

EGILEA:
**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**

Centro Penitenciario Córdoba
14014 Córdoba

Ibon Muñoa 2000ko urrian atxilotu zuten. Harrez gero preso daukate: Valdermoro, Kordoba, Burgos, Langraitz, Puerto I eta, 2014ko martxotik hona, Kordoban.

AZALEKO IRUDIA:
**Mikel Zarrabe Elkoroiribe**

**www.literaturakoadernoak.org**



ISBN: 978-84-942 777-4-0
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL: SS-1304-2018

*Nora, Ugaitz, Jon eta Iraiari.*
*Mirentxineko kide miresgarriei.*

# Desio bakarra biharko

Lagun artean, txantxetan, esaten dugu kartzelan euskal preso guztiak artista bihurtzen direla. Egia da sortzea denbora eta burua betetzeko modu bat dela, eta gomendio hori ematen zaiela kartzelatutakoei, gutxienez, gorputz atal batek askatasunez jardun dezan, libre ibil dadin ziegako hormetatik at.

Lagun handiak izan barik, Ibon kaletik ezagutzen genuenoi harrigarria egin zitzaigun artista bihurtu, eta poesia idazten zuena jakitea. Kultura ekitaldi guztietan publikoan egoten bazen ere, bere karakter erreserbatuak ez zigun halako pistarik ematen. Ez genion poeta itxurarik ikusten, poetek itxura jakin bat edukiko balute lez!



Dena dela, begitazio hori erabat apurtu zitzaidan bere gutun konkretu bat ailegatu zitzaidanean, gure aita hil eta idatzi zidana doluminak emateko. Eder-ederra izan zen, delikatua, goxoa eta karinoz betea. Hor ikusi nuen Ibonen alde sentsible eta poetiko hori. Oraindik ez diot behar den

bezala eskerrak eman idatzitakoagatik. Izan bedi aitzin-solas hau eskertzeko modu txiki bat.

Ibon kalean balego, blogaria litzateke. Blogari berezia, halere, bertsoz eta poesiaz ematen duelako egunekoak eragiten dion hausnarketa, normalean, hitz lauz jarduten dugulako bloga dugunok. Era berean, ezin dugu ahaztu, unean uneko gaien gainean hausnartzen da webgune batzuetan. Muñoak gauza bera egiten du, ezagutu duen albiste batek, adibidez, zer senti edo pentsarazi dion azaleratzen du. Eguneroko moduko bat dela esan genezake, beti ere hitz neurtuan idatzita.

Askotako gaiak darabiltza, baina hiru nabarmentzen dira: aktualitate sozio-politikoa, natura eta Eibar. Hiru gai, sarri gurutzatu egiten direnak, beti aurrera begira jartzen da Ibon, kritiko, baina esperantzaz blai agertzen dira paperean idatziok, harrigarria hori ere jakinda kartzelan idatzita daudela.

Liburua irakurtzen nenbilela, beste idazle euskaldun bi etorri zaizkit gogora etengabe. Ez estilo

aldetik, bai jorratutako gaiengatik. Biak ala biak espetxean egondakoak, baita zein bestea erbestean bizi izandakoak. Baina sasoi bitakoak. Idazle oso desberdinak: Joseba Sarrionandia eta Toribio Etxebarria.

Sarrionandiak kartzelan idatzitako *Ni ez naiz hemengoa* liburu sailkaezina gogorarazi dit Muñoarenak. Besteak beste, aktualitateak sorrarazitako hausnarketak zurian beltz egiten duelako Sarrionandiak. Gainera, egunerokoa da, eta poesiak ere tartekatzen ditu. Espetxeaz ere badihardu Iurretakoak liburu horretan.



Bestetik, Toribio Etxebarria eibartarraren *Ibiltarixanak* etorri zait akordura. Erbestean idatzitako liburuaren tematika askotakoa bada ere, garrantzia berezia dute Eibarrek eta naturak. Ahaztu barik, poemak errimatuak direla, Ibonen asko lez. Biak eibartar prestuak, gure herria beti gogoan, atzerrian egon arren.

Sarrionandia eta Toribio (barkatuko didazue gehiegizko konfiantza, baina ia etxekoa dugu askok)

ez dira bidelagun makalak edozein irakurketa-rako. Bietatik edango zuen, seguruenera Muñoak, eta inspirazio iturri bikainak dira edonorendako.

Amaitzeko esan nahi dut izenburua eder-ederra jarri diola Ibonek liburuari: *Hamaika desio utopia-rako*. Hamaika asko direnez, eta utopia inoiz ez delako gauzatzen, nik desio bakarra dut biharko: Muñoak liburua sinatzea aurrez aurre, Eibarko edozein kale-kantoitan. Bihar bertan.

On dagizuela irakurketak!

***Leire Narbaiza***

***Hamaika desio utopiarako*** Ibon Muñoaren bosgarren liburua dugu. Aurretik argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (2011),
*Ainarak herrira itzuliko dira* (2014),
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (2016) eta
*Udaberrian biziko gara* (2017). Haien ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen diete liburu honetako bertsoek ere.

Hartara. lehen bertsoak 581. zenbakia darama; azkenak, 721.a. Guztira, 141 bertso berri, 2017ko urtarrilaren 15etik 2018ko martxoaren 25era artean Kordobako espetxean idatziak.

*581*

**Berta Caceres borrokalariari**

1

Multinazionalak hil du
tiroka indigena,
Berta Caceresek zeukan
Ama-lurraren sena,
ekologismoa ei da
Hondurasen hobena,
halaber, feminismoa
erdeinuz deus ez dena.



2

Berta hil dute zorua
zuelako maitatzen,
herriarentzat onura
biziki desiratzen,
ideal horiek jardun zen
etengabe jorratzen,
zuzentza estatuaren
aurrean zut eskatzen.

3
“Geureak dira” zioen
“errekak eta lurrak”,
kendu nahi zizkielako
egitasmo makurrak,
berarekin bildu ziren
nekazari zuhurrak,
soilik darabiltzatenak
soroetan aitzurrak.

4
Nahiz demokraziaz ziren
kinka gaintzen saiatu,
Tegucigalpa sekula
ez zen alde paratu,
multinazionalak zuen
bortxa bizkor sustatu,
faxistek nekazariak
zituzten ikaratu.

5

Indiarrak dakuskigu
lehen lez baztertuta,
kolonoen handinahiak
dauzka lar pobretuta,
hamaika malintze dago
ankerrekin batuta,
herriaren kontra dira
oldartzen harrotuta.

6

Bertaren borroka duinak
izango du segida,
herria zola zaintzeko
antolatzen ari da,
bere ereduak dezan
egoismoa brida,
oroimenak kontzientziak
zuzen ditzala gida.

7
Seme-alabentzat ondu
gura zuen bizitza,
inoiz ez zezaten jasan
pobreziaren sitsa,
horregatik erabiltzen
hasi zen zentzuz hitza,
inork ez dezan bilaka
oasia sasitza.

8
Berta orain egongo da
bihotzak ferekatzen,
nekazarien tristura
atseginez gozatzen,
“Pachamama”ren altzoan
baitut irudikatzen,
lurrak naro eman dezan
hazia barreiatzen.

*2017ko urtarrilaren 15ean*

*582*

**Bizitza da handiena.**
**(2016.10.25) Elhadji Ndiaye-ri**

1

Komisaldegian Elhadji zendu da
osasunez ondo zegoen goizean,
xaloki zihoan, motor bat gidatuz
presa barik aise giroa gozatuz,
poliziek zuten zanpatu, ordea,
ustez aurre zakar egin zielako,
lekukoek, berriz, garbiro diote
motiboa larru beltza izan zela.
Geuri berdin zaigu zein den kolorea
garrantzitsuena gizatasuna da,
baina zuriok ez dugu arazorik
kalean egunez libre ibiltzeko,
lasai zegoena xaxatu zutenez
gertatu zen xextra jipoi hilgarria,
eta ez zioten Chinchillan topatu
ezer ilegalik bere arropetan.

2

Iruñean daude senegaldar denak
tinko batu dira arrazisten kontra,
jende zuri gutxi dakusatelako
hipokrita hutsak garela diote,
zinez uste zuten lagunak ginela
euren arrangurak gureak zirela,
konfiantza zaie gaurkoan murriztu
gurekin batera zoru hau ontzeko.
Elkartasunean aterpe ditzagun
teoria dadin praktika bilaka,
konpartitu dezagun euren min sakona
jakin dezatela gu eurak garela,
esango, diegu eurekin dugula
bortxarik gabeko herria zertuko,
bizitza delako zinez handiena
berdintasunean eratzen denean.

*2017ko urtarrilaren 22an*

*583*

**Xederik behinena**

1

Haize firfira dabil
murruen lerroan,
pilpira sumatzen dut
baitaren erroan,
irudikatzen zaitut
Eibarko arroan,
ilusioak biltzen
desiren txarroan.



2

Maizko naramatzate
bertsoek zugana,
sorkuntzekin nigana
dator iragana,
biziko dugulako
berriro izana,
zurekin bihurtzen zait
porlana oihana.

3
Ez direlako inoiz
ametsak haizatu,
egunero legez naiz
zurekin esnatu,
zorionez ez zaigu
bihotza hormatu,
oro gintuelako
xarmak kitzikatu.

4
Geuretzat izan baitzen
latza gertaera,
neguan sartu ginen
pagoen antzera,
biluzik geratu zen
geure biziera,
kartzelak ostu zigun
garai alegera.

5
Zu berriz ikustea
xederik behinena,
ariman behingoz dadin
isildu auhena,
nire metafora da
izango gardena,
"zu zara mahastia
eta ni aihena".

6
Gaur pentsatzen ari naiz
hormari begira,
joateko gozo gero
idazten herrira,
pozarren garenean
heldu izadira,
txoriek ohi zuten lez
kantuz hasi dira.

7
Itxaropenak diost
“elkartuko zara”
“ibiliko zarete
barreka tralara”,
hegan bueltatuko naiz
zure habiara,
txor-txor gaindi dezagun
dramaren ikara.

8
Ama-lurrek dizkigu
penak alaituko,
gatazkaren ajeak
arras urrituko,
askamena Arraten
dugu ospatuko,
izarren distirekin
maitez gozatuko.

*2017ko urtarrilaren 22an*

*584*

**Espeen eta txirtxilen zaraten menpe**

1

Espe batzuen triskak eta hitz hutsalak
ozenki dantzuzkit ziega barrenetik,
eragotzi didate kurloien kantua,
zakarki birrindu une magikoa,
balentriak dabiltza harro aireratzen
bizitza nolabait justifikatzeko,
kalapitak hor nonbait ergelki piztuta

isolamenduan zigortuta daude.
Burua zaielako drogekin tenteltzen
espe batzuk dira espeen etsaiak,
kartzelak halakoen beharra ohi dauka
negozio gaitzak luze iraun dezan,
izarrak direnean ortzian esnatzen
maizko isiltzeko esan behar zaie,
hola saiatzen gara atsedena zaintzen
ez gaitezen eurak bezala erotu.

2

Espeen berriketa atertzen denean,
txirtxilek gaituzte kri-kri aztoratzen,
zoko triste honetan aterpetzen dira,
barrua naturan jaso zutelako,
loguratuta gaude uda bukaeran
hegoak igurzten ari direlako,
soinu monokordeak lar kaltetzen gaitu
ezin dugulako ganoraz lo egin.
Zoritxarrez gauero gogaitzen gaituzte,
espe batzuek lez arras estresatzen,
zuekin amets egin ahal izateko
ohean tapoiak ipintzen ditugu,
entzun gura nituzke hemendik urruti
lehen bezainbeste askatasunean,
euren kantua nuen maite zelaietan
iluntze oskorri zoragarrietan.

*2017ko urtarrilaren 29an*

*585*

## 2015eko urrian,
## Bavarian neskato iheslari baten irribarrea

1

Siria zutelako
bidegabe sutu,
kinka zietelako
bortizki estutu,
etxean zirelako
bonbekin izutu,
Alemanian dira
beharrez lekutu,
animoa, ordea,
ez zaie antzutu.

2

Haurraren irria zait
musuan loratu,
argazkiaz bihotza
gozo pilpiratu,
burbuilak bere amak
ditu aireratu,
Wegscheid-en ondoeza
zaie oneratu,
herri horretan dira
pozik ainguratu.

3
Ninietan suspertu
baitzaio distira,
xaboizko burbuilei
ari da begira,
gerrari egitea
hanka zen desira,
itzultzeko gerora
asaben herrira,
ikusteko bakean
ametsen Palmira.



4
Ederra da neskaren
keinu naturala,
islatzen duelako
atsegin totala,
soatik egotzi du
Balberen itzala,
kemenak eman dio
naroro ahala,
gaur iruditzen zaio
bizitza jabala.

5
Neskaren arima da
lurraren buztina,
faxistarena, berriz,
ilunki osina,
elkartasuna ohi du
itzaltzen iraina,
gizatasuna dabil
banatzen okina,
xaloki esan dio
"zu zara sorgina"-

6
Nahiz erabat gogorra
izan den bidaia,
estatuen hesien
erruz alderraia,
orain oro sentitzen
duzu bizinahia,
zure hegada izan
dadila garaia,
zintzotasunez dizut
opatzen elaia.

*2017ko urtarrilaren 29an*

*586*

## Utopian sinesten dutenei

1

Deika ari natzaio sentimentalari
utopian sinesten duen gazteari,
ametsak gauzatzeko sasoia delako,
eskuak luzatzeko samurtasun osoz,
elkartasunak izan dezan ahalmena
kontzientzia sorgorrak oro suspertzeko.
“Suntsi ditzagun” diot “Europako mugak
ihesik datozenak aterpe daitezen,
laborria maltzurki eragin dutenek
armen ordez onura produzi dezaten,
gerra isildu dadin, Sirian, Iraken…
jazarria bueltatu berriz sorlekura.

2

Bidegabekeria noiz gainduko dugu?
Zergatik ez da inoiz historian jazo?
Utopia ezin da bortxarekin jaio,
kontsumismoarekin bakea pausatu,
feminismoa naro ongarri dezagun
uzta moreak haiza dezan lazeria.
Giza eskubideak eta justizia
gizatasuna nonahi abian jar dadin,
kapitalismo gaitza galtzen has gaitezen
itsasoak ez ditzan haurrak urperatu,
besteak beste ziegan hauxe dut oldozten
ilargiaren printzek blaitzen nautenean.

*2017ko otsailaren 5ean*

*587*
**Catalunyari**

1
Espainia, Frantzia lez
nahita da berekoia,
geure ondasunak jaten
dituen bizkarroia,
guk konpartitu nahi dugu
duda barik saroia,
onartezina delako
pobreziaren lohia.



2
Madril (e)ta Paris ez jardun
herriak zikiratzen,
amets txit askatzaileak
krudelki deuseztatzen,
ez gara inoiz hasiko
zuen kontra lehiatzen
auzolana klarki dugu
Europan proposatzen.

3
Gaztelak hasi zuena
Austriek zuten zertu,
Espainia beti dago
lurrak hartzeko gertu,
nahiz inperioa ia
zitzaion desagertu,
oraindik badu zerekin
armarria edertu.

4
Kataluniarekin da
oldartu estatua,
Generalitat-i dio
zuzendu oinaztua,
nahiz ataka orain bertan
dirudien estua,
elkartasunarekin du
mantenduko itua.

5
Catalunyak hurbil dantzu
danborren oihartzuna,
Espainiak darakutsa
bere alde iluna,
konstituzioa baita
ezpataren ituna,
inposaketa delako
ustezko batasuna.

6
Rajoy eta enparauak
daude amorratuta,
katalanen ausardiaz
arras artegatuta,
demokrazia daukate
ankerki giltzatuta,
ahozko mehatxuekin
dardaraz izututa.

7
Kataluniak zinez du
merezi askamena,
erakutsi duelako
horretarako kemena,
ezin delako nahitaez
eragotzi nahimena,
opa diogu xedea
lortzeko ahalmena.

8
Katalunia orain da
edonon aierua,
esteladak argitzen du
distirekin zerua,
aurki dezagun modua
ekoizteko gorua,
Gure Esku Dagok trebe
ehun dezan zorua.

*2017ko otsailaren 5ean*

*588*

**Tarajalen migratzaileak hil zituzten**

1

Hamabost gizaki Tarajalen zeutzan
hondartzatik hurbil itota hil ziren,
Guardia Zibilek errukirik gabe
gomazko pilotak jaurti zizkieten,
sokorritu ordez izutu zituzten
igerian estu zebiltzan lagunak.
Europan sartzea euren xedea zen
bizitza eskasa erabat ontzea,
estatu gehienak zekenak direnez
txiroen patua maizko krudela da,
Ceutan aterpetu beharrez zituzten
hamabost hobitan izen barik dautza.

2
Eskubideak brast ito zizkieten
Europan pausatu gura zutenei,
“Errua izan zen migratzaileena”
esan du bihotzik ez duen jujeak
giza izaera zakar lurpetuta
bat  dator estatu espainolarekin.
Igerian ia ez zekitenei
demokratek bortxa opatu zieten,
etxekoek noizbait jakingo balute
zelan zendu ziren esango lukete,
“kapitalismoa ez da oasi bat
baizik lapur eta makurren zorua”.

*2017ko otsailaren 12an*

*589*

**Hamaseigarrenean ortzadarra etor dadila**

1

Hamasei urte dira joan dagoeneko
lotuta eraman ninduten datatik,
iraganean ziren larrosak zimeldu
zigorrean zorrotz arantzak hozitu,
zoko hauetan dago gizatasun gutxi
euren izaera bengantza delako.
Egun argiak aise igarotzen ditut,
ilunak poliki kideekin gaintzen,
nahiz umorea ziplo haizatu zitzaidan
maitasunarekin alai bueltatu zait,
letretan sentieraz hori idazten dut
neure esker ona jator eskaintzeko.

2

“Ortzadarra herrian azaldu dadila”
diot zoriona sustraitu dakidan,
ametsetan dakusat bakea dilindan
askatasuna lez geure udaletan,
elkarbizitza zuzen ehunduta dago
hari berde, gorri, zuri ederrekin.
Zeurekin zinez nahi dut kate barik bizi
bizinahia senti dezagun berriro,
batera ginelako izan atsegina
maitaleak gara naturan izango,
ihintzak diezaiogun suspertu irrika
begiak daitezen lehen lez sorgindu.

*2017ko otsailaren 12an*

*590*

**Ehunzangoa lez gu goaz aurrera**

1
“Chilopada” klasea
da karniboroa,
halaber, terrikola
et(a) artropodoa,
noiz edo noiz zertuko
zen ehunzangoa,
oparo bizitzeko
maite du basoa,
egur ustelen eta
orbelen giroa.

2

Herrian hasi gara
kemenez abian,
egunero gabiltza
harat-honat lehian,
Ehunzango zu aldiz
zaude hariztian,
elikatzeko jana
harrapatu nahian,
xedea hola duzu
lortzen izadian.

3
Herriak irauteko
behar du arnasa,
zuzenki gainditzeko
estatuen basa,
Ehunzangok higitzen
diosku “demasa!”
“tamalez daukazue
ataka eskasa,
ezin zaretelako
bizi zuen kasa”.



4
Estatuek mugekin
gintuzten banatu,
herri gisa maltzurki
oro baldintzatu,
nahiz legeak zituzten
zorrotz inposatu,
Ehunzango ez gara
sekula geratu,
euskal bidea dugu
batzeko hautatu.

5
Ehunzango aditu,
gu goaz aurrera,
milaka zangorekin
askatasunera,
Amaiurrera gara
helduko batera,
ez jasateko berriz
hainbeste galera,
izan dezagun behingoz
izateko era.

6
Ehunzango zu zara
gu lez izakia,
baina bakoitzak daki
non daukan tokia,
etorkizuna izan
dadin egokia,
geurea orain bertan
da erabakia,
libre egin dezagun
nahi dugun saskia.

*2017ko otsailaren 12an*

*591*

**(Urtarrilak 14-15) Sara eta Izarri**

1

Sarek esan digu klarki esateko
“salatzen dut!” kide minen egoera,
bereziki gaixo dauden presoena
lurraldera libre bueltatu daitezen,
Bilbon mendekua deitoratu dugu
gatazkaren ordez bakea hobetsi
konponbide ona erdiets dezagun
hitza eta giza eskubideena.
Manifatik ginen pozarren itzuli
batasuna gure indarra delako,
tamalez berriak kolpatu gintuen
Sararen tristura, Izarren zauriak,
aska ditzatela eskatzen gabiltza
gain dezaten oro matxistaren bortxa,
aurki gertaera zuzen konponduta,
Donostian elkar ikusiko dugu.

2
Bilbon urtarrilak hamalau zituen,
egin zenioten aurre neguari,
ziegetan zuekin adoretu ginen
telebistak piztu genituenean,
poza zuei lez iraungi zitzaigun
izua zelako gero baitan sartu,
Izarrekin gara lur jota geratu
geurea da ere Sararen samina.
Gaur ospitalean memento samurra
pilpira laztanka goritu denean,
elkartasunak du gela zipriztindu
ama ferekatu haurra oneratu,
kartzelan diegu bizinahia opa
gogoan mamua aiena dakien,
"zuekin biziko gara" diotsegu
"zuen askamenak askatuko gaitu".

*2017ko otsailaren 19an*

*592*
**Ez inbertitu burtsan**

1
Burtsaren egoitzan naiz
eguerdian zurtu,
amets eroak zaizkit
izotza lez urtu,
egurra jasota zait
urdaila uzkurtu,
musu leun mardula
negarrez zimurtu.



2
Aurrezkiak joan dira
zuzen errekara,
hurbildu nintzelako
burtsaren saltsara,
apustu berekoia
irten zait kontrara,
etxean sentitzen dut
etsita ikara.

3
Ohean goiztirian
triste naiz esnatu,
oraina dudalako
dorpeki pitzatu,
langile bat ezin da
horrela portatu,
kapitalismoaren
zokoan pausatu.

4
Handikien mundua
suertatu zait basa,
bizitza erosoa
orain da eskasa,
marrazo horiek egin
didate demasa,
txanponen ordez daukat
txin-txin zorren kaxa.

5
“Errua nirea da”
diot tabernetan,
aritu nintzelako
jardun zikinetan,
dirua sartu nuen
banku handietan
trabatzeko ergelki
akzioen zetan.

6
Senak diost “herrian
jator inbertitu”,
“arren ez zaitez burtsan
berriro gaizkitu”
“elkartasuna behar
zenuke goritu,
auzolan atsegina
musu-truk bizitu”

7
Kontsumismo gaitza dut
tinko baztertuko,
joera txar zekena
errefusatuko,
libre bizi gaitezen
naiz borrokatuko,
jendartea ontzeko
zuekin batuko.

8
Burtsak pobrezia du
azkar menderatzen,
enpresek diruekin
net espekulatzen,
gu plaza ari gara
lihoaz bilbatzen,
maitez Alternatiben
Herria prestatzen.

*2017ko otsailaren 19an*

*593*

## Zurekin eta zuekin Arrate oparoan

1

Azitaindik oinez gorantz hasi naiz
Arraten dago zoriona,
Altzubarren, Orbe, Biriñao… dira
nire urratsen lekukoak,
aldapa gogorra aise gaindu dut
arnasak ez dit kale egin,
pagoak ederki jantzita daude
udaberriko pizkundean,
Ikusgarria da ikuspegia
Gurutzearen talaiatik,
ihintzak zelaia dotoretu du
eguzkiaren izpiekin,
“laket dut goizeko bakardadea
beltza argitzen didalako”
zurekin maitea esan nahi nuke
libre biziko naizenean.

2

Halabeharrezko herritik kanpo
hamasei urte daramatzat,
Arratera ohi naiz barrutik joaten
amesten hasi bezain azkar,
Eibarren delako arnasgunea,
bizinahiaren abaroa,
desio xaloak gaztetan legez
zuzen narama altxorrera.
Gaur irailak zortzi egutegian
bihotza dabil pilpiraka,
kide minak ditut irudikatzen
txosnan musu-truk atseginez,
hiru urte barru batuko gara
lehen lez pozik jai giroan,
txoriekin kantuz esango dugu
"Arrate zara oparoa".

*2017ko otsailaren 26an*

*594*

**Giza eskubideak lortu arte**

1
Eguna iritsi da,
abenduak hamar,
giza eskubideak
ohi lez gaizki samar,
nahiz dabiltzan Nazio
Batuetan zakar,
herrien auzolanak
esperantza dakar.



2
Eskubideak erro
ditzagun munduan,
herri txiroek duten
eskatzen moduan,
ez dezagun amestu
zekenki diruan,
euren zoruan bizi
daitezen zeruan.

3
Kongon gizatasuna
delako murritza,
gizakiei zaie
zornatu bizitza,
eskubiderik gabe
galdu dute hitza,
askatasunak behar
duen gidaritza.

4
Armak ari direnak
Sirian banatzen,
eskubideak nahita
dituzte urratzen,
samurtasuna dute
aldiro sastatzen,
ez garelako euren
kontra borrokatzen.

5
Eskubideek ixten
dituzte zauriak,
dakartzate bakea
josteko hariak,
eurekin haizatuko
dira lazeriak,
edonon piztu diren
gerren larderiak.

6
Migratzaileak daude
mugetan galduta,
egoismoak uzten
ditu makalduta,
eskubideak izan
ditzaten onduta,
elkartasuna dugu
ereingo bilduta.

7
Giza eskubideak
dira hedatzeko,
bidegabekerien
dramak sendatzeko,
has gaitezen eurekin
bortxa sikatzeko,
berdintasuna behingoz
sakon finkatzeko.

8
Giza eskubidean
hasten da bidea,
osatzeko gizaki
zintzoen oldea,
zuzen heziko dugu
ankerren aldea,
laztana izan dadin
bortxaren ordea.

*2017ko otsailaren 26an*

*595*

## Urteberriko kontzertua

1

Strausstarrak Vienan urtarrilean
musikak luzaro iraun dezala,
eguerdian ditut pilpiraz entzun
urteroko doinu zoragarriak,
jarrai dezatela musikariek
zoria opatzen herritarrei,
ez dadila berriz goibeldu poza

orain arte legez bihar gerrekin,
“Ez dadila inoiz buka une hau”
esan dut baltsea hasi denean,
bizipenak ditut oroitu gero
irudikatzeko udaberria,
zu erdigunean barreka zaude
amets atseginen iturburua,
noizbait egongelan Radetzki martxa
lagunduko dugu esku-zartekin.

2

Nahiz aretoa den ahaltsuentzat
kontzertuak laket zait ikustea,
horregatik diot “gora orkestra!”
“Pikutara klase diferentziak!”
maiteak gogoan urteberrian
presoen taupadak bizitzen dira,
musika delako sentimendua
balio dezala bortxa lurtzeko.
Biolak lez notak hedatzen ditut
desio behinenak jaioterrira,
ikusi nahi nuke herria libre
munduan agintzen elkartasuna,
barrutik irtengo garen urtean
aterpe gaitzala samurtasunak,
zurekin nahi ditut oro sentitu
gaurko xarma eta kili-kiliak.

*2017ko martxoaren 5ean*

*596*

## Metalak onerako izan daitezela

1

Oletan eraldatzen dituzte metalak
milaka onerako eta txarrerako,
armadarentzat dira izaten gaitzenak
jendea traba dadin bortxaren zingiran.
Botereak dagitza zurrun agintzeko
estatu handinahiak tinko iraun dezan,
jendartea ontzeko egingo balitu
ez zatekeen inoiz gangrena izango,
utopia zaleok hori maiz diogu,
ekaitza behin betiko ezereztu dadin.

2

Tailerretan kurrikak egin ditzatela
txantxarrak zein hesiak mugetan mozteko,
baliaraz dezagun zentzuz altzairua
ospitaletarako, eskoletarako…
Guk ez ditugu gura tankeak, granadak…
elkartasuna soilik delako urrea,
gerretarako diren balak ur ditzagun
gizatasunak dezan zer ongizatea,
samurtasunak golda ditzan lurraldeak
bakea ereiteko irria sortzeko.

*2017ko martxoiaren 5ean*

*597*

**(1999.03.19) Joselu Gerestari maitez**

1

“Ttotto” egun hartatik
zaude bihotzean,
orain presondegian
gaude leotzean,
konpartitzen ditugu
kezkak ohatzean,
ideal atseginak
murruen atzean,
libre biziko gara
geure baratzean.

2

Gau ilunean herra
zenuen pairatu,
nork zizun arma jarri
eta desarratu?
Gaur ez dut nahi lagun min
horretaz mintzatu,
samina lurraldean
sakon zen finkatu,
Zizurkilen izarrak
ziren amatatu.

3
Gogoratzen naiz gorpu
agertu zinela,
udaberri ederra
bertan zegoela,
egun hartan Baztanen
lasai nengoela
“Gara”n argazki beltza
ikusi nuela,
nire arima ziplo
ikaratu zela.



4
Kontzientzia onbera
nahi dut laudatzea
zeure nahia zelako
drama osatzea,
erabaki zenuen
borrokan batzea,
konponketa delako
hitza obratzea,
deserriko kideen
kinka zentzatzea.

5
Zeure desiretan naiz
gozo kulunkatzen,
eurekin orain legez
nintzen elikatzen,
mendian ibiltzea
zitzaizun gustatzen,
zeure herri txikia
zenuen aitatzen,
beharrez lagatako
laztana maitatzen.

6
“Oker” oro zuzena
darraigu batera,
ez goaz esperantza
sutan erraustera,
arratsetan diotsut
goazen pizkundera,
goizean hasiko den
printzaren aldera,
Ernion laket egon
zaitezen ostera.

*2017ko martxoaren 5ean*

*598*

**Igoumenitsa.**
**Mikel Zuluaga eta Begoña Huarteri**

1
Asiatik ziren beharrez irten
kinka latzetik urruntzeko,
sentitzeko berriz ongizatea
izu sarkorra uxatzeko,
Europan nahi dute etxe txukun bat
bonbarik gabe bizitzeko,
eskuak eskaini lan egiteko
elkartasuna eskertzeko.
Ez zelako inor bidaian ito
Kios irlara heldu ziren,
zortzi asiarrak helmugan pozik
zoria izan zutelako,
hortik eramango zituzten gero
penintsulara, Greziara.
Orain kanpaleku batean daude
Igoumenitsa kaitik hur,
agian euskaraz entzungo dute
Ongi etorri! esaera.

2
Mikel eta Bego hausnartzen zeuden
iheslarien lazeriaz,
Europa zekenak ez duelako
konpromisoa zuzen bete,
estatuek mugak itxi dituzte
babesa eman beharrean,
“Kaixo!” esatetik igaro dira
“ez ditugu nahi” esatera.
Autokarabanan bihotzak pil-pil
Iritsi dira hitzordura,
City hotelean berba egiten
zintzotasunez gazteekin,
esango diete “Atenasetik
Euskal Herrira joango gara”.
Kaian atxilotu dituzten arren
oro gaituzte kitzikatu,
desobedientzia zinez delako
utopiaren hasiera.

*2017ko martxoaren 12an*

*599*

**Hamaika ohetan**

1

Urtetan lotan egon naiz
makina bat ohetan,
jaiotetxe zaharra zait
agertzen ametsetan,
maizko irudikatzen dut
lurraldea loretan,
maiteñoaz nagoela
izadian jostetan.



2

Kartzelan leotz askotan
egon naiz giltzatuta,
hainbat ohetan izan dut
bihotza pitzatuta,
esperantzak laga dizkit
taupadak eztituta,
pareta zuri margulak
kolorez beztituta.

3
Aspalditik preso nago
herria desiratzen,
setimendu atseginak
gutunetan islatzen,
gatazkaren konponketaz
ohean dut pentsatzen,
maitasuna bizigura
dela naiz akordatzen.

4
Ohean pozarren nago
irria ezpainetan,
sartzen ari garelako
garai oparoetan,
laster elkar ikusiko
dugulako plazetan,
guda zaleen bengantza
gainduta kaleetan.

5
Ohetik abiatuta
gauerdian hegatzen,
zure ondoan izarren
printzekin naiz pausatzen,
biharko bizitzaz gara
ilusioz mintzatzen,
zurekin ondoeza zait
berehala sendatzen.

6

Nahiz ez den inoiz izango
ohe hauxe neurea,
etzanda arnasten ohi dut
kemenaren airea,
musek opatzen didate
hari sendo morea,
ehun dezadan dotore
bertsoaren sarea.

7
Sarek ohe hauetatik
gaitu liberatuko,
gorrotoaren kateak
dizkigu zartatuko,
ziegako sorkuntzak dira
nirekin bueltatuko,
izarak eta koltxoia
ditut zokoratuko.

8
Atzean geratu dira
zigorraren oheak,
gogotik uxatu ditu
Arrateko haizeak,
orain loaldiak dizkit
zaintzen zure bakeak,
diostazuzen eleak
direlako loreak.

*2017ko martxoaren 12an*

*600*
**Trikitriari**

1
Txosnen eremuan trikiti saio bat
gazteek zaharrek beste maite dute,
baserritar askok egin zuten legez
landa ingurutik kalera jaitsi zen,
nortasuna bikain eguneratuta
geurean lortu du aise irautea.
Hamaika saltsatan nahastu delako
Trikitilarien sonak mardul darrai,
Piamontetik zen trikitria heldu
trenbidea zertzen hasi zirenean,
berehala zuen arrakasta jaso
eskusoinu mina etxekotu baitzen.

2

Tresna infernuko hauspoa omen zen
hala ziotsoten atzerakoi hitsek,
baserritarrekin kulunkan hasita
debeku eroak gainditu zituen,
erromerietan alaiki ari da
kalejiretan zein hainbat rock taldetan.
Trikiti bidean jarraitu ezazu
higitzen ez dena itzaltzen delako,
gizaldi berriek txit senti dezaten
gaur sentitzen dugun zorion handia,
plazan izan dezan euskarak ahala
sorgintzeko zeure notekin herria.

*2017ko martxoaren 19an*

*601*

**(2016.12.27)**

**Sare, ikuslegoa, Mikel Gorosabel, Josu Gil, Joseba Arrillaga, Zaloa Urain, Xabi Bastida, Aitor Gorosabel, Maite Arrroitajauregi, Miren Oteiza, Mikel Arrieta, Arrate Gisasola eta Asier Serranori.**

1
Gaur abenduak hogeita zazpi,
kartzelan nago lorian,
elkartasuna kantuz hasi da
Coliseo antzokian,
Sarek eratu du kontzertua
maite dudan sorterrian,
gatazka zuzen konpon dezagun
Euskal Herriko habian,
elkarbizitza marduldu dadin
hirustak lez belardian.

2

Izarren eran jarrita daude
herritarrak aretoan,
ingumak ari dira hegatzen
kantari duinen kolkoan,
presoak gura dituztelako
katerik gabe behingoan,
etor daitezen bizinahiaz blai
gereziaren aroan,
bengantza eta herra gainduta
eskubideen arloan.

3

Sarek adorez salatzen darrai
makurra den egoera,
onera dadin iheslarien
eta presoen afera,
betiro gure alde ari da
delako txit sentibera,
kantariei eskatu zien
“etorri saio xumera”
ziplo zioten baietz erantzun
altruistek alegera.

4
Kantatu duten artistek oro
eman digute onena,
musikariek, berriz, dotore
erakutsi ahalmena,
norbaitek esan du jaialdia
izan dela gozamena,
iturri aratz onekoa da
eibartar hauen sormena,
doinuekin ta hitzekin dute
sorgindu areto dena.

5

Zuekin egon ez naizen arren
ez dut inoiz ahaztuko,
kontzertuaren oihartzunak nau
geroan kilikatuko,
ziur zutela nire bihotza
joan zirenak sentituko,
Iñaki Saez zena ni beste
zela ere hunkituko,
Sarek “Kalera Kalera”rekin
kartzelak ditu hustuko.

6
Eskerrik asko maitez diotsot
kantuz aritu denari,
bere artea musikarekin
opa egin duenari,
Coliseora hurreratu den
ikuslego xaloari,
losintxa egin diote nire
arima zigortuari,
zuk Sarek, berriz, egin diozu
denon askatasunari.

*2017ko martxoaren 19an*

*602*

## **“Eta kitto!” mila ale eta gehiago**

1

“Eta kitto!” jaso dut milagarren alea
aspaldiko laguna euskararen hauspoa,
Eibar dir-dir delako orrietan agertzen
espetxean naro dit atsegina eskaintzen,
ziegan sartzen denean Txantxa Zelain jartzen naiz
sentiera Arratera hegazka heltzen da.
Daramatza hiru bat hamarkada gurekin
hiriaren taupadak berrietan islatzen,
horri esker hobeto dezagugu zer garen
zehatz nondik gatozen eta norantz goazen,
kirolean, kulturan, politikan, lanean…
herritarren egintzak irakurtzen ditugu.

2

Guk ikusi genuen “Eta kitto!” jaiotzen
nola joan zen poliki pausoz pauso koskortzen,
aldizkari kuttuna auzolanak ondu du
kazetari asko da bere kantxan trebatu,
euskaraz blai bizitzen garelako beregaz
eibartarrok jatorki “geurea da” diogu.
Nik herenak etxean eskuratu nituen
ezinbestez besteak preso hartu ohi ditut,
sorlekua sekula ez zait ziegan ilundu
ametsetan dakusat etengabe dilindan,
“Eta kitto!” eguna hurreratzen ari da
eibatarren erara mintza nadin zurekin.

*2017ko martxoaren 26an*

*603*
**(2017.03.21) Aritz Portu Iraizoz jaioberriari**

1
Artazkotzen sustraitu da
ederkiro haritza,
maitasunaren haziaz
lerden sortu bizitza,
Aritz, jaio zarelako
eztitu zaigu hitza,
zu zara Ilargi eta
Igorrentzat garaitza.



2
Arretaz jarraitu dugu
zuen haurdunaldia,
topa eginez diogu
“heldu da zohardia!”,
Ilbeheran jantzi zaigu
dotore ilargia,
Aritz, laztanduko dizu
printzekin haragia.

3
Aitari esan diogu
“Aritz zara saria”,
naro ekarri diguzu
espetxera zoria,
gurasoentzat dakigu
izan zarela nahia,
udaberrian txit zaie
goritu bizinahia.

4
Aritz edoski luzaro
amatxoren bularrak,
izan ditzazun haritzen
bezalako adarrak,
zurekin bizitu dira
bihotzetan txingarrak,
aitxa zoriondu dugu
goratuz lesakarrak.

5
Aritz, aita joango zaizu
alai ezagutzera,
sentiera zarelako
gozo besarkatzera,
bihar edo etzi dute
eramango etxera,
eguzkia irtengo da
giroa berotzera.

6
Zeure ametsetan gaude
ez zaitez larritu,
irribarrea dakizun
aurpegian lilitu,
aitatxok adur-zapiak
trebe apaindu ditu,
Aritz, zeuri esker zaigu
atsegina goititu.

7
Aritz zure argazkiak
ditugu ikuskatu,
bertso hauek hunkituta
dizkizugu kantatu,
nahiz preso Kordoban gauden
gaituzu kitzikatu,
hemendik sehaska dugu
leunki kulunkatu.

8
Artazkotzen goiztiria
hasiko da esnatzen,
Aritz, amatxo ipuin bat
ari zaizu kontatzen,
plazetan hasi zirenez
tximeletak pausatzen,
kometa jarriko dugu
aitarekin hegatzen.

*2017ko martxoaren 26an*

*604*

**Otxandio-Iruñea: XX. Korrikari**

1

Otxandiok esan du lekukoa jasota
“Iruñera joango naiz mezua hedatzen”,
Bat Zuk eta Batzuk,tink abian has zaitezten
zazpi euskal herriak euskaldun daitezen,
AEK hor ari da, ongarritzen gogoak,
ikasleak sorgintzen euskaltegietan,
Korrikaren emaitzak dantzuzkigu plazetan
euskaltzale ugari mintzatzen euskaraz,
zuhaitzetan gerezi mamitsuak dilindan
udaberri biziak opatu dizkigu,
bertan bizi garenok dastatuko ditugu
maitez osa dezagun jendarte anitza.

2

Hogeigarren Korrika bizinahia ereiten
aurrekoak moduan umeen laguna,
ilusio horrekin esperantzaz mukuru
mingainetan altxorra kantatzen dantzugu,
arbasoen elea gogoz babes dezagun
Batzuk eta Bat, Zuk, Ni, gu izan gaitezen.
Sentierak hitzekin adierazten ditugu
lelo labur bitxiak kitzikatu gaitu,
nortasuna tai gabe sustraitzen hasi da,
lurraldea loratzen magia horrekin,
"BatZuk" eta besteak oinetako pareaz
Korrikan txit ohi gara herria sentitzen.

*2017ko apirilaren 2an*

*605*
## Gure alargunei

1
Belearen hegada
karranka ozena,
sukaldean ziplo da
belztu sentimena,
ezustean entzunda
berririk txarrena,
bizipoza bihurtu
zaizu etsipena,
istripu bat delako
ariman eztena,
maitasunak opako
dizu atsedena.

2

Maitez diotsut eutsi
goiari larrosa,
bihotzean dakizun
ondoeza osa,
naro senti dezazun
umeekin poza,
bizipenak oroituz
hutsunea goza,
bizitza izan dadin
berriro airosa,
bere irria etxe
aurreko mimosa.

3

Nahiz laztana zendu zen
bizi da zurekin,
halaber, pilpiraka
aldiro gurekin,
gu edonon ohi gara
batzen berarekin,
bizigura ehuntzen
dugu elkarrekin,
Arraten hitz dagigu
xarmaz izarrekin,
bere hobi aratza
den Ama-Lurrekin.

4
Zorionez zuk duzu
haizatu tristura,
joan direnak zin-zinez
hori dute gura,
gauaz mintzatzea da
aspaldi ohitura,
aipatzeko kultura
lehen lez natura,
joan zara maitemindu
zineten lekura,
pagadian zenuten
eskertzen freskura.

*2017ko apirilaren 2an*

*606*

**Ibon Iparragirreri**

1

Kide gaixoa kolpatu dute
tamalez ez du kiderik hurbil,
espetxezainak ez direnean
preso arruntak izaten dira,
aldiro dago mehatxupean
barru eskasa basa delako,
kinka txar hau maiz gertatzen denez
bere zigorra bikoitza baita,
harraparien harrapakina
oihan beltzean ahulena da.
Ezlekuetan legea dago
herraren menpe hondoratuta,
dispertsioak bakartzen gaitu
biluzik uzten babesik gabe,
giharren zolan hitzak jai dauka
senak ezin du bortxa ekidin,
oi, Ibon mina sentitzen dugu
ariman zure bakardadea,
guda zaleen injustiziak
kartzelan gogor kaltetzen zaitu.

2

Logelan zeunden zu aitxarekin
zurekin bertan ertzainak zeuden,
nahiz aitxa zure aurrean hil zen
Alcala Mecon zaude berriro,
etxean egon behar zenuke
Madril oldartu zaizu, ordea,
gizatasunak ez du lekurik
bihozgabeen zoko hitsean,
ankerkeriak gupida barik
sentimendua mindu baitizu.
Samurtasuna astero dator
goiari hola eusten diozu,
maitez kemena opatzen dizu
Ondarroako kresal usaina,
ferekak eta laztan gozoak
gau eta egun gogoan daude,
elkartasuna gure marka da
Ibon, ditugu xede berberak,
zeure desirak eta geureak
euskal ortzian piztuko dira.

*2017ko apirilaren 9an*

*607*
## **Udaberria sumatzen dudalako**

1
Udaberria dator
enarak zeruan,
natura sumatzen dut
pizten inguruan,
nahiz urtetan nagoen
kartzelen munduan,
maiteñoa nirekin
zaude akorduan.



2
Udaberriak dizkit
begiak argitzen,
atsekabea eta
tristura eztitzen,
bizinahia zinez zait
borborka bizitzen,
zigorraren katea
ariman txikitzen.

3
Sinesten dudalako
jendarte justuan,
udaberrian dantzut
bihotza kantuan,
hori diot gaur gora
begira barruan,
sentitzen dudalako
haizea larruan.

4
Txolarreak txioka
enarak hegatzen,
gure gogoak hasi
dira kilikatzen,
udaberria ez da
inoiz ezkutatzen,
ea politikoa
zuzen den gauzatzen.

5
Udaberriaren zain
daude kaleetan,
gereziak dilindan
ñir-ñir adarretan,
goiztiria hasiko
baita mendietan,
lurraldea on dadin
eguzki printzetan.

6

Udaberrian dira
zelaiak loratzen,
ihintzari esker maiz
oro distiratzen,
herria dakusagu
ideiak freskatzen,
bakea gero sendo
has dadin finkatzen.

7
Udaberrian gara
berriro hunkitu,
Euskal Herri zintzoa
delako zutitu,
aldiro dugulako
hainbeste sufritu,
itxaropena zaigu
kartzelan loditu.

8
Udaberriak dakar
naroro lurrina,
laztana txor-txor zure
hitzen atsegina,
konponketaz desager
dakigu samina,
irrikaz lant dezagun
desiren buztina.

*2017ko apirilaren 9an*

*608*
**Gure txori Pitxintxori**

1
Etxera irrikaz deitzen dudanean
kantuz ari zara txori pitxina,
nahiz kaiolan zauden zut bizi baitzara
eguzkiak beltza urdintzen dizu,
nire buruari horixe diotsot
bihotzak, ordea, ezetz diosta,
ziegako leihoan dakuskidalako
barroteak eta burdin sarea.
Preso zarela ametsik onena
etxean zarela esnatu baita,
antzerako zerbait amestuko duzu
dakusazunean baso hurbila,
hunkituta luze entzungo nituzke
zure txortxor horiek Ama-Lurrean,
jaio zinelako libre hegatzeko
haizetxoarekin zerutik gertu.

2

Txori denda hartan maizko ikusita
erosi zintuen errukituta,
etxeko giroan bizkortu zintezen
zure bila joan zen neska laguna,
zuk gura zenuke habia zertzea
nik aldiz beregaz berriz batzea,
ea helburuak irits ditzakegun
naturaren xarma senti dezagun.
Zu eta ni gaude gaur egun histuta
esperantzak behintzat, kementzen gaitu,
zeure jabeari maitez esan diot
“opa iezaiozu askatasuna”,
horrela zugana joango ginateke
Arrateko zelai miresgarrira,
bertako pagoen abaro freskuan
txiruli askeak dasta ditzagun.

*2017ko apirilaren 16an*

*609*
## Zergak onerako izan daitezen

1
Zergak fama eskasa
dauka jendartean,
batik bat aberatsak
direnen artean,
iruzurra delako
nornahiren kaltean,
ordaindu dezatela
epaitu ostean.



2
Nik arbuiatzen nuen
zergen ezarpena,
sarritan direlako
bortxen sustapena,
eskuratu dezagun
tinko ahalmena,
bete dadin herritar
zintzoen nahimena.

3
Zerga izan daiteke
ona edo txarra,
erabilerak ohi du
zehatz jartzen marra,
gastu soziala baita
herrian beharra,
tamalez lehenesten
dute militarra.

4
Dirua ez dezagun
xahutu bankuan,
baizik utopiara
daraman pausuan,
zergak gizatasuna
haz dadin munduan,
herriak has daitezen
helduta kantuan.

5
Zergak erabiliko
ditugu ontzeko,
pobreziaren drama
zuzen konpontzeko,
ongizatea behingoz
sakon errotzeko,
bizinahia geurean
non-nahi hauspotzeko.

6
Ez ditzagun erabil
gerrak hedatzeko,
goikoen handinahiak
gogor pagatzeko,
baizik ekologiaz
Lurra ondratzeko,
bakearen haziak
naro banatzeko.

7
Zerga izan dadila
solidarioa,
gatibuentzat den lez
kurloien txioa,
gal dadin egoismo
maltzur arraioa,
bera delako kalte
gehienen zioa.

8
Zergekin dezakegu
hobe ontasuna,
auzolan atsegina,
gure nortasuna,
gaur batzuek sentitzen
duten hoztasuna,
bihar bilaka dadin
bero poztasuna.

*2017ko apirilaren 16an*

*610*
**Bakearen artisauei**

1
Bakearen artisau taldeak esan du
“helburua orain da armagabetzea”,
Paris eta Madrilen kontra daudelako
lan eskerga zertzeko erne ari dira,
ekintza zail hau dute ausarki prestatu
gero itzul daitezen, deserriko minak,
eurekin bat egin du arima xaloak
auzolana delako herri honen arma.
Erakunde zaharrak oinez tinko darrai
Aieteko bidea zintzoki urratzen,
erabaki senduna berriz berretsi du
sentieraz baitugu Baionan txalotu,
nahiz estatu zitalek maiz jazarri duten
bere hitza lehen lez jator bete baitu,
herriaren asmoa berea delako
hunkituta dio “agur apirilak zortzi”.

2

Nazkatuta gaudenez gerra zaleekin,
mendekua sustatzen ari direnekin,
ez dugu nahi bortxa den garaile-galtzaile
guk hobetzat daukagu garaile-garaile,
artisauek garbiki horixe diote
bakea ez delako porrotekin lortzen,
harremanak kalean onduko ditugu
haiek eta guk giza eskubideekin.
Arren, ager dadila zeru oskarbia,
ortzadarra dirdaitsu ekaitzaren ordez,
egokitu dezagun txit elkarbizitza
bare pausa daitezen usoak plazetan,
Luhusoko bihoztun eredugarriak
zuekin gu Baionan artisauak gara,
naro erein duzue atsegintasuna
libre bizi gaitezen euskal herritarrak.

*2017ko apirilaren 23an*

*611*

**(1937.04.26)**

**Gernika oroitza eta bakearen lurra**

1

Gernikako arbola
ez zuten txikitu,
karlistek zutelako
tinko defenditu,
ez zen ere bonbekin
belztuta gelditu,
herritarrak ostera
zituzten kalitu,
azoka eta etxeak
erabat suntsitu.

2

Gernika alemanek
zuten bonbardatu,
Franco ankerrak zien
gorrotoz eskatu,
triskantza latzak harro
zituzten ospatu,
larogei urte dira
ordutik pasatu,
Madrilek ez du zorra
oraindik kitatu.

3
“Guernica” obra zuen
Picassok pintatu,
munduaren aurrean
izua salatu,
sinboloa genuen
geurean laudatu,
tamalez noizbait zuten
Madrilen paratu,
“Guernica” Gernikara
ziguten ukatu.



4
Gerra soilik delako
bidegabe zurra,
betidanik izan da
bizitzen lapurra,
elkartasuna denez
fereka samurra,
Gernika, berriz, oro
bakearen lurra,
bihur ditzagun arma
fabrikak simaurra.

5
Geure Gernikan gerra
dute arbuiatzen,
Hiroshiman, Sirian…
gogoa pausatzen,
jende gizatiarrak
dituzte maitatzen,
bertara noiznahi dira
jator hurreratzen,
gizatasuna ari
direnak obratzen.

6
Durango, Eibar, Bilbo,
Gernika… oroitza,
historia ez dezan
inork utz murritza,
buelta ez dadin berriz
gerraren sasitza,
bake zuzena izan
dadila garaitza,
libre ondra dezagun
asaben haritza.

*2017ko apirilaren 23an*

*612*
**Zazpiak bat muga barik**

1
Irudiak ETBn ikusi nituen
Berlingo hormaren eraispenarenak,
utopia zertuko zela zirudien
herriaren aroa gertu zegoela.
Behobian hesia kendu zutenean
"bat izango gara!" gogoz esan nuen,
tamalez maiz diogu estatuen alde
lapurtar xaloa frantses hutsa dela,
helburua horrela ez dugu lortuko
lurralde lehorra ez da hezetuko.

2

Noizbait geure fotoa ikus genezake
Zazpiak pozarren eskutik helduta,
sendotuta euskara, halaber, kultura
ongizatea zut sustraituta zolan.
Horregatik gabiltza arkatzak hartuta
aberrian zuzen marrazten geroa,
ikurrina dilindan gura dugulako
elkartasunaren herrien agoran,
auzolanak mundua oneratu dezan
harresi, txarrantxa eta muga barik.

*2017ko apirilaren 30ean*

*613*

**Eibarko altxorrei**

1

Akondia dakusat Urko aurrean dago
Anbotori diote biek begiratzen,
guk Eibarren diogu eskulturak direla
Garagoitxi, Aizketa, Galdaramiño… lez.
Arbasoek horrela izendatu zituzten
esateko euskaraz sentitzen zutena,
eibartarrak garenez tontorretan sorgintzen
mendiei lotsa zor diegula diot.

2

Kalamuan zut nago ikusmiraz gozatzen
gaur mendiak hegoaz hurbilago daude,
une bikain ugari pasatu dut eurekin
bizinahia horrela errotu zitzaidan.
Altxorrekin amesten maiz esnatzen naizenez
goiz-argiak arraiak iruditzen zaizkit,
desioak ozenki berehala diosta
Arratera joateko prestatzen has zaitez.

*2017ko apirilaren 30ean*

*614*

**(1984.03.23)**

**Ibon Zubizarreta eta Juan Cruz Urigueni**

1

Eguerdian kartelak jartzen hasi ginen
lau autonomoak hil zituztelako (1*)
antikapitalistak ei ziren K.A.A.k (2*)
“Egin”en berria irakurri nuen.
Pasaiako badian kalitu zituzten
poliziek zuten segada prestatu,
bokalean kide bat atxilo zeukaten
hitzordua jartzen behartu baitzuten.
Batzarrera deitzeko ados jarri ginen
gazteen hilketak tinko salatzeko.
garai hartan sarritan jasan genituen
estatuen legez kanpoko krimenak.
Txokoan (3*) geunden ertzeko beiraren aurrean
jazo zena zuzen jakinarazteko,
egindako kartela itsasten geundela
izua, gainera, etorri zitzaigun.



---

(1*) *Rafael Delas, Jose Mari Izura, Dioni Aizpuru eta Pedro Mari Isart.*
(2*) *Komando Autonomo Antikapitalistak.*
(3*) *Eibarren Untzagan dagoen taberna.*

2

Ibon gauza izan zen ospa egiteko
Juan Cruz eta biok ez genuen lortu,
hankak eta besoak zabal-zabalduta
pareta batean ezarri gintuzten.
Polizien kotxea agertzen ez zenez
"sekreten" (4*) bihotzak punpaka zebiltzan,
hurko batzuk ausarki hurbildu zirenez
kalte barik ginen etxera bueltatu.
Iruñean dolua Azpeitian legez
Eraildako minak bertakoak ziren,
dena baitzen zilegi "ilegalen" (5*) kontra
krimena ez dute sekula epaitu.
Sentiera zitzaigun geuri ere belztu
Untzagan jendea jatorki batu zen,
gaur ondratu zaituztet lau duin horiek beste
Ibon eta Juan Cruz zuekin bizi naiz.

*2017ko apirilaren 30ean*

---

(4*) *Uniformerik gabeko poliziak.*

(5*) *Sasian borrokan ari zirenak, klandestinitatean.*

*615*
**Ezkor ez bizitzeko**

1
Gaurko eguna kuttuna
izan baita gogorra,
ziegan mirailak esan dit
“dirudizu ezkorra”,
bizitza iruditzen zait
zu gabe lar idorra,
zeure xarmak blai dezala
neure arima sorra.



2
Espetxean hondatuta
sartu nindutenean,
ezin zintudan ikusi
nire oroimenean,
oraintxe geure maiatza
irazeki denean,
loratuko gara diot
libre zorionean.

3
Egunak eratzen ditut
krisiak eztitzeko,
zurekin desirak gero
ederki mamitzeko,
nahiz ziega ez den toki bat
nonora higitzeko,
zugana heltzen naiz zeure
taupadak aditzeko.

4
Neguko egun motzetan
gogoa zait tristatzen,
horma grisaxkek didate
sentiera zartatzen,
zutaz pentsatzen, ordea,
arin naiz oneratzen,
bizinahiak goiztirian
gozo nau inguratzen.

5
Nik azken urteak ezin
izan ditut dastatu,
zigorrak hainbat gauza dit
nahitaez deuseztatu,
eskerrak nauzula oro
hitz eginez sustatu,
adorea didazula
bihotzean ziztatu.

6

Telefonora joaten naiz
zurekin mintzatzeko,
ametsak ta esperantzak
ondo elikatzeko,
tarte hori izaten da
ajeak gozatzeko,
biharko bizimodua
egoki prestatzeko.

7
Nirekin zaudenez zara
musarik xaloena,
sorkuntzara iristeko
biderik errazena,
argazkiaren aurrean
maiz dagit hasperena,
baitan ziplo esnatzen  zait
sortzeko ahalmena.

8
Irtengo naizenean da
hasiko atsegina,
zurekin elkartuko naiz
gaindituta osina,
sasitza izango denez
berriz zelai apaina,
laztan, usainduko dugu
bioleten lurrina.

*2017ko maiatzaren 7an*

*616*

**Ama-Lurri deika herriaren alde**

1

Ama-Lurri ari naiz ozen deiadarka
kemena naroki opatu diezadan,
asmatzeko zer egin euskal jendartean
izurrite latza zuzenki gaintzeko.
Aberria dabiltza estatuak galtzen,
geure nortasuna maltzurki xurgatzen,
debekatu digute oraina jostea
mugak ezarrita banatu gaituzte.
Ez daudenez bakea errotzeko gertu,
gure baratzetik armadak kentzeko,
gorrotoa ereiten ari diren horiek
pikutara ditut sarritan bidaltzen.
Penaz diot “gu gaude askatasun barik”
euren polizien jardunak sufritzen,
ez diegu lagako geroa gidatzen
borrokan gaudela senti dezatela.

2

Kontsumismo gaitzean ez naiz ni gordeko
lurraldea libreki gura dudalako,
garbi diet esango porlan zaleei
guk elkartasuna hobeste dugula.
Gobernuek mezua entzun dezatela
ez delako gaurko egoera ona,
ez direla eurenak denon ondasunak
auzolana dela aberastasuna.
Ama-Lurrek esan dit kemena hauspotuz
“herriaren alde gu izan zaitezte,
bengantzari atea behin betiko itxi
bertan bizi diren jende xaloekin”.
“Eskubide guztiak lora itzazue
aberriak gero mardul iraun dezan,
teoria praktikak zer dezakeenez
kartzelak husteko urratsak bizitu”.

*2017ko maiatzaren 7an*

*617*
**Gertatu zaidalako**

1
Hormatxoriak hizketan
etxarteko gainetan,
udaberrian dabiltza
ugaltzeko jostetan,
espea oinez ari da
sartuta gogoetan,
bizitza zaila delako

barruen zokoetan.

2
“Mindu zait” penaz esan du
“esparruan giroa”,
ez direlako konpontzen
bera eta eroa,
botikak txarto hartuta
da bihurtzen harroa,
hola berba egin ordez
soilik dagi orroa.

3
Espea urduri dago
sentitzen du beldurra,
aisian beraren kontra
daukalako makurra,
espe horren erruz gerta
dakioke malurra,
jaso dezake zein eman
babesteko egurra.

4
Helbururik behinena da
bueltatzea herrira,
ohi legez hori esan du
txoriei begira,
hauek espe bortitzetik
urrun egoten dira,
edatera joan dadila
senaren iturrira.

5
“Ni gizon bat naiz” diotso
matxista basatiak,
euskal espeak zintzoki
“garela gizakiak”,
etengabe aritzen da
kontatzen balentriak,
sarritan emandako zein
jasotako jipoiak.

6
Gaur, behintzat, lasaiki dago
eguzkia gozatzen,
arima kezkatuari
adorea opatzen,
kinka eskasa jarraitu
beharko du pairatzen,
xarma naro hedatuta
egoki kudeatzen.

7
Berriro atera dira
etxartera batera,
hitz zuzenekin zerbait du
ondu bere joera,
“izan zaitez” esan dio
“xalo eta onbera”
“hola itzuliko zara
lehenago etxera”.

8
Ezleku beltzean espe
batzuk dira zakarrak,
adimena galtzen die
drogaren zarakarrak,
gu jator saiatzen gara
ekiditen liskarrak,
jakintzak diezazkiela
senda buru kaskarrak.

*2017ko maiatzaren 14an*

*618*

**Zazpika aldizkariari esker**

1

Bart ziegan “Zazpika”k arras hunkitu nau
Korrika oroituz negarrez hasi naiz,
artikulua dut arretaz leitu
hainbat bizipen dit ekarri gogora.
Nire bizitza da agertu atalka,
haurra, nerabea, gaztea, heldua,
etxea, maitea, joan ziren kuttunak…
egindako hutsak eta obra onak.
Iraganetik naiz orainera heldu,
sehaska gozotik barru garratzera,
tarte luzean dut tantaka sentitu,
zoria, tristura, maitasuna, bortxa…
Sentimenduak dit bidean lagundu
kontzientziak dizkit urratsak zuzendu,
ideologia euskara izan da
zapalkuntza zer den erakutsi zidan.

2

Korrika zinez da hausporik onena
hegatzen naraman haizetxo leuna,
beregaz herria batuta dakusat
kantuan pozarren euskararen alde.
Eibarren gaztetan lilura izan zen
oraintxe den beste ataka honetan,
hamaika pilpira gertu dastatuta
geroa nekusan itxaropenez blai.
Historia gaude gaur izkiriatzen
apirilak zortzi armagabetzea,
orduan genuen hori bera egin
Askatasunaren Ibilaldian zut.
Euskal prentsarekin elikatzen gara
iritziak bikain ehuntzen ditugu,
Korrikan jarraika mezulariei
Euskal Herriaren mapa dazagugu.

*2017ko maiatzaren 14an*

*619*

**Joan ziren Amnistiaren Aldeko Batzordeetako kideei**

1
Amnistiaren alde
bainintzen aritu,
hazia zenidaten
ariman sustraitu,
ohi legez naizelako
zuekin oroitu,
askatasuna barda
gertu dut sentitu.

2
Barrutik zintuztedan
nahitaez agurtu,
gogoan ez zarete
ahanzturan urtu,
zinostenez "kateak
ditzagun apurtu"
kemena ziegan ez zait
sekula uzkurtu.

3
Zuekin maiz nioen
“presoak askatu”,
“iheslariak zaindu
eta elikatu”
ataka behar dugu
demokratizatu,
amnistia dezagun
zuzenki gauzatu.

4
Kartzelan egoten naiz
zuekin berbetan,
gauaz elkartzen gara
nire ametsetan,
arreta jartzen dugu
kontu baikorretan,
plazetan gaudelako
euskal herrietan.

5
Txosnan lan genegien
herriko jaietan,
elkartasuna batu
otarren zozketan,
preso-iheslariak
zeuden bihotzetan,
senideak gurekin
zutik kaleetan.

6
Zenbat borroka eta
manifestazio,
zenbat asmo, desira
eta ilusio,
horretarako geneukan
hainbat argudio,
herri honek goiari
hola eutsi dio.

7
Euskal bidean gaude
motxilak hartuta,
horixe diotsuet
bertsotan poztuta,
giza eskubideak
denontzat lortuta,
zuekin biziko naiz
oro eztituta.

8
Joan zineten oinatzak
sakonki utzita,
geurean amnistia
hitza itsatsita,
bengantzaren zutoinak
ziplo eraitsita,
ondratuko zaituztet
nonahi goretsita.

*2017ko maiatzaren 21ean*

*620*
**Horma sugandilari**

1
Horma sugandila zulotik irten da
harrietan dago eguzkitara,
intsektuak trebe ehizatuko ditu
atseden hartzeko gero berriro,
bere betazalak mugikorrak dira
eremua ondo begiratzeko,
isats luzea du, mihi bifidoa
kolore arrea kamuflatzeko.
Bere familian txikiena baita
izaki eder bat nolanahi ere,
nahiz ez duen musker baten tamainarik
arriskuak erraz saihesten ditu,
narrastia denez odol hotza baitu
baina ospa dagi bizkor hankekin,
maiatzean zaio laket usaintzea
natura delako oro lurrintzen.

2
“Geure generoa ez baita narrasa”
ahalmenik balu esango luke,
geurea, berriz, da erabat lardatsa
herrestan gabiltza denon kaltean,
sorlekua bortxaz txikitzen diogu
zakar gauzatzeko anbizioak,
porlana edonon ezartzen dugunez
lazertido asko hiltzen ditugu.
sugandilak muga jarriko liguke
ez diezaiogun lar bizitza txartu,
ase dagoenez geure joranekin
presaka otu zait izkiriatzea:
“gu geu sortu baino askoz lehenago
noizbait itsasotik heldu zirenez,
saurioen zola eurek bezainbeste
zainduko dugula sina dezagun”.

*2017ko maiatzaren 20an*

*621*

**Drogek amei egin dietena**

1
Alkoholak lez drogak erraz du
suntsitzen gure sendia,
biak batera aritzen dira
izorratzen gaztedia,
ama bihoztun bati zioten
gogor astindu habia,
geroztik dar-dar bihurtu zaio
bizialdia hobia.



2
Pattarren eta drogen kaltea
ama honek du sufritu,
senarra eta ia haurride
barik bera da gelditu,
aspaldi ziren lehengo amets
zoragarriak amaitu,
jada zaizkio desirak eta
ilusioak urritu.

3
Bere bizitza orain soilik da
umetxo haien hileta,
urte haietan egongela zen
seme-alaben olgeta,
etxean zintzo emango zien
ganorazko heziketa,
baina ezingo zuen ekidin
gero drogen zikin meta.

4
Ama batentzat okerrena da
galtzea bere fruituak,
etxea zuzen jo zuelako
hauts zurien oinaztuak,
laster lehertu ziren suaren
eraginez istiluak,
banaka danba hilko zizkion
inpernu horren mailuak.

5
Amak borrokan hasiko ziren
gainditzeko arazoa,
drogak ez zezan ardoak beste
gaizkitu euren auzoa,
lehentasunik behinena baitzen
zaintzea maitez gaixoa,
bestalde tinko salatu zuten
trafikari temosoa.

6

Tamalez keri guztiek dute
erakartzen zoritxarra,
zaila delako kanporatzea
mendekotasunaren harra,
etxean trostan sartzen denean
pozoi hutsa barra-barra,
aulki hutsekin sukaldean da
hasten amaren negarra.

7
Edozein amak eskaintzen ohi du
musu-truk samurtasuna,
etxeko minen ohitura txarrek
lagatzen dute iluna.
zelaian mozten saiatuko zen
mitxoleta erruduna
maitasunak ken ziezaion zama,
bueltatu giro kutuna.

8
Heroinak ta edanak zuten
jarri etxean itua,
krudelki oro joango zitzaion
amari belzten patua,
udaberrian leihotik gertu
dantzu hontzaren ulua,
izartegira nare begira
eztitzen zaio dolua.

*2017ko maiatzaren 28an*

*622*

**Gizon tunantea zintzo dadin**

1

Hainbat gizon tunante ez da ondo portatzen,
txortan egin ostean xarmanta zen liliaz,
nahiz ez duten ohean gutxiesten zein mintzen,
egindako jolasak hedatzen ohi dituzte,
atzo arte zituzten lizunkiro kontatzen
lagunekin edaten lurpetuta etika,
orain laket baitzaie filmatzea unea
bidegabe neskaren izen ona zikinduz.
Irudiak whatsappen sartzen ari direnak
gaitzespena baitute ezbai barik merezi,
matxismoa ez dadin inoiz izan ohore
ezin dugu onartu horrelako irainik,
ukendua biktimak gozo senti dezala,
elkartasun osoa atseginez kalean,
harroxkoa hobenaz oro lotsa dadila
behin betiko gal dezan tente daukan gandorra.

2

Ospetsua bazara dena ei da zilegi
gertaera askotan, behintzat, hori dirudi,
futbolari batzuek zori hori baitute
tifosoek diete arrazoia ematen,
neska, berriz, sarri da hala-hola galtzaile
jendartea oraindik lar matxista delako,
iruzkinen zoruan igarotzen ohi baita
izatetik biktima izatera errudun.
Iraultzarik ez dago jokaera hauekin
utopia ez dugu ekarriko gurera,
zuzen susper dakigun kontzientzia sorgorra
gizon horien praktikak salatzen has gaitezen,
feminismo eleak arrakasta lor dezan
ama beste dezagun maita nornahi andrazko,
zinez hartu emanak duinak izan daitezen
sexuaren plazerak sano goza ditzagun.

*2017ko maiatzaren 28an*

*623*
## Futbola soilik delako espe batzuen hitza

1
Cristiano, Messi ta
Griezmann idoloak,
espe batzuk dirudi
direla leloak,
ziegatik dantzuzkigu
zaleen orroak,
lehortuta dauzkate
senaren erroak,
horrelaxe ahanzten
dituzte hurkoak,
sukaldean euren zain
daudenen malkoak.

2
Bere grina horiena
legez da futbola,
edozein droga beste
edo “Coca-Cola”,
muturka ibiltzea
ostera kirola,
isurtzeko sastaka
zorura odola,
beste edozer gauza
ez zaio axola,
maitasunak kaskoa
konpon diezaiola.

3

Arren, futbola izan
dadila jolasa,
kartzelan ez gaitezen
sorgor bihur masa,
ondo dago hartzea
noizik behin arnasa,
ez dezagun, ordea,
inoiz marra pasa,
irrika diezaiogun
sutsuari laxa,
ez dadin patioan
izan hain narrasa.

4
Futbola da garuna
jaten dizun sitsa,
sarri zikintzen zaizu
horregatik hitza,
golek dakarten ditxa
delako murritza,
golen ordez aukera
ezazu bizitza,
ez dadin izan zeure
geroa sasitza,
ureztatzen has zaitez
jakintzen zuhaitza.

*2017ko ekainaren 4an*

*624*
**Enaren itzulera ikus dezagun**

1
“Presoak kalean egon baino lehen
ez nadila zendu”, kezkatuta diot,
gau izartuetan nire desira da
maizko agertzen den ametsetako bat,
Franco hil aurretik horixe zioten,
zahartu garenok gaur hori diogu.
“Errefuxiatuak itzul daitezela”

gogoak diosku egunsentietan,
berrogei urtetan borrokatu gara
amnistiak dezan zipriztin herria,
ehundu dezagun dotore bakea,
bizikidetzaren soineko ederra.
Bidean hamaika kide geratu da
geure bihotzetan nare bizi dira,
eurekin eskuak batu genituen,
ilusio asko zintzo konpartitu,
euren ahalegin eskergari esker
“Kalera, kalera” hur sentitzen dugu.

2

Eguna biziko dugula uste dut
auzolanak bikain lagunduko digu,
urratsak zuzenki ematen darraigu
armagabetzera hola heldu gara,
herrian giroak hobera egin du
kalean garbiro sumatu daiteke.
Geurean dira ja joan lau hamarkada
“amnistia orain!” esan genuela,
kartzelak husteko gogoz jaiki ginen
loreen maiatza odolez busti zen,
plazetan bortxa zut salatu genuen,
erail zizkiguten minak ondratzeko.
Atzo lez gaur diot gerturik gaudela
emateko dena zauriak ixteko,
aizue xedea orduko bera da
denok kate barik ondo bizitzea,
gurekin ditzaten senti joan zirenak
enaren pilpirak libre aberrian.

*2017ko ekainaren 4an*

*625*
**Iheslarien bizitza garratza**

1
Ziztatzeko hartu dut
haserre orratza,
idazteko pentsatzen
dudana arkatza,
“iheslarien kinka
delako garratza,
Europa izan zaitez
eurekin maratza.



2
Nahiz jendeak datozen
gerratik ihesi,
nonahi nahita diete
jarri mila hesi,
eurei jaurti orde
horrenbeste gezi,
hobe genuke gure
kontzientzia hezi.

3
Geure elkartasuna
orain denez motza,
negutean jasaten
ari dira hotza,
nork hautsi die ditxa?
nork deitu arrotza?
Europak ez dezala
senti berriz lotsa.

4
Orain karpa batetik
bestera dabiltza,
Sirian zutelako
bortxaz galdu giltza,
gu eurekin oro har
zekenki gabiltza,
ez ditzagun gaixoak
gabezian iltza.

5
Migratzaileak izan
zein iheslariak,
txarto portatzen dira
gaur agintariak,
ea behingoz izaten
garen gizakiak,
zintzo diezazkiegun
estal lubakiak.

6

Euren bizitza denez
aspaldian latza,
ez diezaiegun bota
zaurietan gatza,
eskainiz sagarra ta
ez maltzurki patsa,
geure sentiera da
izango aratza.

7
Denaren beharrean
estu familiak,
hala daude zaharrak,
etxeko txikiak,
Europan sartzen dira
herenak eriak,
oro susper ditzala
arimen zirriak.

8
Oraingo malezia,
dezagun atertu,
sututako garretan
konponketa zertu,
horretarako egon
gaitezen zut gertu,
haurren gorputz makalak
daitezen edertu.

*2017ko ekainaren 11n*

*626*

**Arrate nire azken borondatea**

1

Hil aurretik hau da borondatea
Herio gertu zain daukadalako,
Arraten zirrara sentitu nahi dut
lagun iezadazu maite kuttuna,
nire azken hatsa bota aurretik
gu izan garena ospa dezagun.
Nahiz taupadak hasi diren apaltzen
bihotza nekatu egin delako,
bikain egongo naiz gurpil-aulkian
txorien kantuak berriz dastatzen,
eguna garbia izan dadila
printzekin gaitezen indarberritu.

2

Gaur nirekin zaude ospitalean
dir-dir ohearen aldamenean,
“zu bihar Arraten egongo zara”
joateko unean esan didazu,
laztanduko gaitu udaberriak
geure zoriaren zelai jorian.
Olgetan dabiltza umetxo batzuk
euskaraz mintzatzen zoragarriro,
“lasai joango zara” esan didazu
altxorra delako gero biziko,
pagoen hostoek baietz diote
haizetxo leunak kulunkatuta.

*2017ko ekainaren 11n*

*627*
**(2016.07.31)**
**Urkullu kideen haurrak babes itzazu**

1
Apalekin gara zurrunak izaten,
malguak, berriz, ahaltsuekin,
politikoek maiz horixe dagite
bortitza dena hobesten dute,
beldur izatea naturala denez
halako gauzak gertatzen dira.
Urkullu Loiolan atzo jazo zena
garbiro diot, “ez da zilegi”,
ausarta ez denak presoen aferan
bere ardurak laga ditzala,
aizu ez delako inor nahitaezko
ez bazara gai, arren, joan zaitez.
Ezin duzulako herrian agindu
sufrimenduak sendatu barik,
entzun Etxerati, txostena leitu,
bengantzak haurrak kaltetzen ditu,
espetxeak arras urrun daudelako
bidaiak dira arriskutsuak.

2

Polizia duzu atseginez hartu,
espe ohi duina, berriz, baztertu,
ez diozu nahita arreta eskaini
haurren kinkari muzin eginda,
aldaketa hola ez dago zertzerik,
demokrazia barreiatzerik.
Gaur Urkullu zeuri haserre diotsut,
“Loiolan txarto aritu zinen”,
espainolak legez gobernatuz gero
zelai hau ez da loreztatuko,
gu beste has zaitez urratsak ematen
haiza dezagun dispertsioa.
Aizu esperantza ez dakigun histu
kideen haurrak babes itzazu,
Zaballan ditzaten ikus gurasoak,
beste haurrekin jolas daitezen,
motxila gerora soilik izan dadin
txango eztia gurasoekin.

*2017ko ekainaren 11an*

*628*
**Independentziarako bidea**

1
Macron, Le Pen, Rajoy, Sanchez
gu aginteko lehian,
euren estatuek menpe
gauzkate aspaldian,
demokrazian hasiko
gara libre abian,
berdin euskara, kultura
eta ekonomian.



2
Arren, utz diezagutela
horiek erabakitzen,
hartu-emana has dadin
berehala eztitzen,
herrien Europa bor-bor
hasiko da loditzen,
aniztasunean bikain
garelako kabitzen.

3
Europa duina dezagun
muga barik gauzatu,
zentzuak behar lieke
xede hau proposatu,
Madril ta Paris bakea
arduratsu hautatu,
herri txikiek hartuko
genuke hor ostatu.

4
Danga bazter dezatela
gaurko inposaketa,
monarkek armekin zuten
behartu eraketa,
Europan kemenez presta
dezagun galdeketa,
boza izan dadin hola
gatazken konponketa.

5
Demokrazia izango
baita ongizatea,
jator irekiko dugu
etxearen atea,
bertan biziko da sortzen
ari den jendartea,
hamaika kolore polit
duen lagunartea.

6

Demokraziak eraiki
diezagula zubia,
ez dadin sekula izan
lurraldea hobia,
kultura izan dadila
arimentzat  habia
euskara gozo gaituen
elkartuko ibia.

7
Ez dezala inork senti
hau dela deserria,
edonork esan dezala
hau da denon herria,
loreztatu gura dugu
herri xume berria,
elkartasunak on dezan
ederki aberria.

8
Kulturaz ekonomia
dezakegu bazkatu,
auzolanak horixe du
betidanik islatu,
lehenbailehen dezagun
lan arloa gidatu,
independentziak ditzan
gogoak kitzikatu.

*2017ko ekainaren 18an*

*629*

**Etxauzia 8. Herrialdearen egoitza**

1

"Euskal diaspora" sentieraz diot
"gure zortzigarren herrialdea da",
Euskal Etxeetan sustatzen dituzte
asaben ohiturak eta historia,
halaber, kultura barreiatzen dute
euskara ikasten eta erabiltzen,
batzuk folklorea lantzen ari dira,
beste batzuk, berriz, independentzia.
Gugandik joan ziren bizitza ontzeko,
jatorria zinez dute goraipatzen,
gurekin dabiltza hartu-emanetan
prezatzen gaituzte batzen garenean,
eurekin ditugu mardul loratuko
urtetako amets eta desioak,
"iheslari eta presoak etxera
aberria zuzen eraiki dezagun".

2

Gaztelu zaharrak Baigorrin zut dirau,
Etxauzian ei da geroa hasiko,
asmoa esaldi batekin sortu zen,
“euskaldun bat euro bat” auzolanean,
euskal herrientzat erosiko dute
diasporak hor izango du egoitza,
kultura bertatik hegatzen has dadin
historia edo ekonomia lez.
Ameriketara aspaldi joan ginen,
orain joaten gara mila tokitara,
haien ordez jende asko etorri zen,
gaur egun horixe gertatzen ari da,
bihotzez diogu eurak gu direla
nonahi bizi diren euskaldunak beste,
harmonia zintzo eratu dezagun
zortziak bat zoru solidarioa.

*2017ko ekainaren 18an*

*630*

**Palma olioaz**

1

Palmondoaz ari dira
bizitza lurperatzen,
oihanak eta soroak
berekoiak hondatzen,
indigenak sorlekutik
dituzte kanporatzen,
halaber orangutanak
janik gabe lagatzen.



2

Eguratsa txartzen digu
palmaren olioak,
erregai bilakatzen du
kapital arraioak,
elikagai batzuetan
daude gaitzen zioak,
zera janda ditzakegu
jasan ondorioak.

3
Palmarekin batzuk dira
errazki aberasten,
tamalez injustizia
berarekin da hazten,
nekazariei zaie
bizinahia eskasten,
dietelako asaben
ondarea ebasten.

4
Palmaren alde dituzte
ekologistak hiltzen,
herrien ekonomiak
pobrezian amiltzen,
multinazionalak dira
pistolekin ibiltzen,
ez direlako sendunen
aldarriak isiltzen.

5

Arren, ez itzazu eros
palmaren ekoizkinak,
ez saritu naturaren
jale aseezinak,
kapitalismoak ditu
eragiten suminak,
ez diezagula odola
zurrupatu izainak.

6



Indonesian, Papuan,
izakiak akitzen,
Thailandian, Nigerian,
ondasunak txikitzen,
Kolonbian, Hondurasen,
Ama-lurra okitzen,
gizatasuna du palma
olioak gaizkitzen.

7
Europak tinko esan du
“ez dut eskuratuko”,
“palma olio zikina
geurean onartuko”,
baina ez ditu oihanak
arduraz suspertuko,
mindu dituen izaki
ahulak babestuko.

8
Dirua munduan denez
gabezien murdea,
elkartasunak ongarri
diezagula oldea,
zentzua izan dadila
kraka horren ordea,
munduak bilatu dezan
irauteko moldea.

*2017ko ekainaren 25ean*

*631*

**Elkarbizitza eta askatasunerako**

1

Harmonia pitz dezagun elkarbizitzarako,
udaberri sanoa askatasunerako,
memoria bakoitzak du idatziko berea
mindutako arimak ondo senda daitezen,
maitasunak gidaritza herrari ken diezaion
jendartean egia mintzatzen has dadila.
Aspaldiko ika-mikak zuzen konpon ditzagun

lubakiak lagata plazan bildu gaitezen,
hauspotzeko atseginez bizinahia geurean,
eskaintzeko elkarri sentieraz eskua.
eskubide printzipalak zipriztindu ostean
sendo lora dakigun lurraldean bakea.

2

Auzi minkor asko dago argitzeko herrian,
ekarpenak zertzeko biktimak prest ei daude,
ze eskatzen ari diren adi entzun dezagun
saminduen larruan txerak pausa daitezen,
zergatik ez dugu jartzen hitzordua Gernikan
suspertzeko bihotzak ehunduta oraina?
Harremanak nahi ditugu zubiekin sendotu
aberrian has dadin goiztiria oskarbi,
gerratetik ja laurogei urte gogor joan dira
auzolana dezagun enpatiaz apaila,
bortxa eta mendekua ziplo isil daitezen,
ez daudenak etxera onik ekar ditzagun.

*2017ko ekainaren 25ean*

*632*
**Bortxak hil dituen haurrei**

1
Zergatik jazoko zen
drama Manchesterren? (*)
Zergatik agintean
beti dago Txerren?
Haurren eskubidea
dagoenez herren,
indarkeriak ditu
tratatzen okerren.



2
Manchesterren biktimak
ia denak haurrak,
injustizian dira
egosten malurrak,
bengantzak nonahi ditu
ematen egurrak,
halaber, gerrak pizten
largura makurrak.

---

(*) *2017.05.22an Manchester Arenan atentatua gertatu zen*

3
Su arma ekoizlea
ohi da egoista,
burugabe armatzen
ei du jihadista,
anker horien fedea
delako faxista,
galarazten diete
haurrei txirrista.

4
Europan ez dakigu
ataka zentzatzen,
ezta zergatik ere
gaituzten kolpatzen,
jihadistak diosku
gorputza zartatzen,
Sirian ditugula
haurrak akabatzen.

5
Haurrak jasaten ditu
helduen liskarrak,
bortxarekin ditugu
itzaltzen izarrak,
osten dizkiegunez
desiren otarrak,
euren ametsak dira
bilakatzen txarrak.

6

Manchesterren, Alepon…
hurkoak galduta,
begiradak beharrez
daude goibelduta,
ikusi ditugunez
haurrak triskatuta,
bakeari diogu
deitzen izututa.

7
Gerrekin ezin dugu
onura dastatu,
haurren ongizatea
bikainki bermatu,
elkartasuna gogoz
dezagun aupatu,
edozein aitzakia
tinko borrokatu.

8
Manchester izan dadin
azken oinaztua,
ortzadarrak dezala
marraztu zerua,
eztitu eta gero
zirrika dolua,
lorez bezti dezagun
haurrentzat mundua.

*2017ko uztailaren 2an*

*633*

**Sadikoak kide gaixoak mindu ditu**

1

Sadikoa irten da bere estoldatik
esateko demasak kide gaixoei,
lotsa barik esan du ezin dena esan:
"espetxean hil arte biziko zarete",
herrarekin legea ankerki darabil
kaio maltzur faxistak ez du etikarik.
Gobernuak muga bi hiletan jarri du
hil hurrena nolabait libre gera dadin,
hola soilik lezake azken hatsa bota
ziega ziztrin batean isolamenduan,
kide batzuk jadanik urrun zendu dira
etxekoen epela ezin sentituta.

2
Espainiak bengantza elikatzen darrai
sasidian sartuta bakearen kontra,
Frantzia gaur ei dago bidegurutzean
mantendu zein itzali txingarrak ezbaian,
senduna den herriak aldiz garbi dio:
"ez dezala bortitzak konponketa histu".
Deserrian aspaldi hainbat kide dago
egoera larrian osasunik gabe,
Etxegarai, Urkullu eta Barkos, arren,
Oierrekin (*) adina bat egin eurekin,
esperantza ez dadin bilaka ekaitza,
aberrira zutunik bueltatu daitezen.

*2017ko uztailaren 2an*

---

(*) *Oier Gomez, Gasteizko preso ohia, Frantziako gobernuak libre laga zuen, bere gaixotasuna sendaezina delako*

*634*

## ***Akebai* baietz izango da**

1
"Akebai" mosaikoa [*]
dezagun gauzatu",
plataformak zertzeko
gaitu gonbidatu,
euskarak bikain ditzan
eibartarrak batu,
hiriak Guinness-ean
har dezan ostatu.



2
Nahiz erdarakada bat
den klarki akebai,
asmoari diotsot
dudarik gabe bai,
euskara umeekin
oro dadin arrai,
gazteekin taupaka
aise dezan jarrai.

---

(*) *2017.06.22an mosaikoa burutu zen*

3
Gaztedia ohi denez
edonon geroa,
euskarak eskertuko
du bere beroa,
hartu-emana izan
dadila sanoa,
geure hizkuntza izan
ez dadin nanoa.

4
Mihian busti barik
zitzaidan sikatzen,
zokoratuta, berriz,
elbarri geratzen,
etxean nintzelako
sakonki tristatzen,
gaztetan hasi nintzen
kalean mintzatzen.

5
“Akebai” berda dadin
belardi larua,
euskarak altxa dezan
gurekin burua,
geure umeek ikus
dezaten keinua,
iluna ñirñirtuko
duen errainua.

6

Auzoetan bizkor da
sustraitu ideia,
zoragarriro egin
duzulako deia,
“Akebai”, irten denez
ondo zeure lehia,
baietz izan Eibarren
“abeto” izeia.

7
“Eta Kitto!” zabiltza
“Akebai” sustatzen,
euskara hogeita bost
urte ferekatzen,
kultura guztiei
musuak banatzen,
ametsak dizkiguzu
musu-truk loratzen,

8
Mosaiko erraldoia
Untzagan ikusgai,
gaur “Akebai” zurekin
gu izan gara gai,
bihar esango dugu
ez dabil alderrai,
euskarak gazteekin
zinez mardul darrai.

*2017ko uztailaren 9an*

*635*

**Zure umetokian bizi izan nintzen**

1

Zuk umetokian artatu ninduzun
asmorik onenaz aritu ei zinen,
hogeita hamabost aste gozo-gozo
txoko samurrean bizi izan nintzen,
nik zure taupadak sentitzen nituen
laguntzen zidaten lasai egon nendin.
Zu nitaz erditu zinen momentuan

hartu-emana zen tamalez amaitu,
zilbor-heste ona moztu bezain azkar
gertatuko zela ondorioztatu dut,
negarrez orroka hasi nintzenean
nigandik deblauki urrundu zintuzten.

2

Hemezortzi urte geroztik joan dira,
ez dut inoiz jakin zu nongoa zaren,
amak behar zuen sabel emankor bat
arazorik gabe mardulki sor nendin,
beharrez zenion subrogatu egin
duintasunez bizi ahal izateko.
Ohean zurekin sarri amets dagit
ez duzu, ordea, izen zein musurik,
ezin izan dugu elkar ezagutu
nire desioa egun horixe da,
zeure lurraldean eman diezadazun
lapurtu ziguten laztan maitekorra.

*2017ko uztailaren 9an*

*636*
**(2017.06.03)**
**Iruñean ez demokraten manifa**

1
Nafar bandera *versus*
euskal ikurrina,
eskuindarrak dabiltza
xaxatzen sumina,
manifaz lortu dute
helburu zikina,

hedatzea herrian
herraren zirina.

2
Esparza ikurrina
zoro arbuiatzen,
aurrerakoiek biek
dituzte maitatzen,
aizu konponketa da
helduko mintzatzen,
eta ez sentierak
bortxaz debekatzen.

3
UPN beti lez
nafarrak banatzen,
lurraldeko ekandu
minak mespretxatzen,
Espainia du ezbai
barik goraipatzen,
PPk ta PSNk
dute sostengatzen.

4
Manifa horiek dute
maltzurki eratu,
nafarren sinboloa
txarto baliatu,
nahiz dioten ozenki
“geurea sustatu!”,
Francorekin ez zuten
inoiz defendatu.

5
“Euskal Herria ziplo
dezagun txikitu!”,
aspaldian gintuzten
horiek erdibitu,
diktadurak adina
gaituzte etsitu,
aldaketaz ditzagun
ajeak eztitu.

6
Ikurrina eduki
dute giltzatuta,
euskara legez hesi,
batean sartuta,
boteretik at daude
oro pipertuta,
dirua kudeatu
barik izoztuta.

7
Gobernua ez dago
egun ustelduta,
pikaroen kiratsa
arduraz kenduta,
zauri ugari daude
zuzen orbainduta,
nafarrak lehen baino
hobeto zainduta.

8
Aurki udalek dute
libre bozkatuko,
ikurrina eskegi
zein ez hautatuko,
Nafarroakoak du
zinez ospatuko,
berriro direlako
dilindan batuko.

*2017ko uztailaren 16an*

*637*

**Errekaleorri**

1

Gorka Urtarani esan diote,
“ez ezazu lehor Errekaleor”,
“taupaka nahi dugu alkate jauna
ez itzazu ito amets ederrak”,
“arren, ez asmatu gezur merkerik
auzotarren nahia deuseztatzeko”.
Auzoak erein du alternatiba
jendarte hobea zoritu dadin,
kapitalak, berriz, ez du onartzen
bere asmoen at dagoen ezer,
alkateak dauka jarrera bera,
tamalez garbiro sumatu dugu.
Udalak iraultza mehatxatu du,
Iberdrolak laga argindar barik,
esperantza ziplo desager dadin,
bankuek agintzen jarrai dezaten,
ez dezagun ahaz geure ardura
lagun diezaiogun utopiari.

2

Hil hurren zegoen Errekaleor
heldu zirenean gazte ausartak,
horko antzinako egoiliarrek
atsegintasunez bat egin zuten,
ongizatea da ordutik hazi,
zurbil zegoena suspertu dute.
Kukutza eraitsi, Itoitz urpetu…
ez dadila eror Errekaleor,
ohiko lapur banden grisaren ordez
Gasteiz berdea hobesten dugu,
ekinez ezina lor dezakegu,
auzolanaz gaindu horien afana.
Bortxa ez delako demokrazia
bakean uzteko eskatzen dugu,
ez dezan diruak ankerki hautsi
hunkitzen gaituen iparrorratza,
jaietan pozarren esan dezagun
Errekaleorrek bizirik dirau.

*2017ko uztailaren 16an*

*638*

**Osasuna bueltatu dakizun**

1
“Bizkarra lehen bezain
txarto da geratu,
ebakuntza honekin
ez dute asmatu”
“Izan zaitez baikorra”
dizut aholkatu,
min sarkorra dakizun
zerbait oneratu.



2
Sendagileak gure
alde ari dira,
garamatzate gogoz
beltzetik argira,
tamalez noiz edo noiz
na(ha)siko balira,
ez diezaiegun murritz
zor diegun mira.

3
Galenok diezazula
osasuna zaindu,
ondoeza maisuki
erabat arindu,
maitasuna ez dadin
saminaz erkindu,
desioak dakizun
aldapa berdindu.

4
Hipokrates Galeno
bezainbat aiduru,
zu artatzeko dago
zientziaz gonburu,
zalantza ez dadila
izan estakuru,
behingoz, isil ditzagun
hainbeste zizpuru.

5
Aizu ospitalera
arreta eske joan,
utz itzazu ustezko
eskasak kanpoan,
denetik omen dago
osasun arloan,
baina gehienak daude
gaixoen alboan,

6
Arren, sendagile bat
mina sendatzeko,
bizitzaren magia
oro dastatzeko,
kalera deablauki naiz
irten eskatzeko,
lehengo sasoi ona
berriz gozatzeko.

7
Irriñoa bueltatu
dadila zugana,
zirujauak dezala
gauzatu esana,
bertsotan opa dizut
onura laztana,
bihar zu ta ni izan
gaitezen izana.

8
Lehen bezain xaloa
nahi zaitudalako,
min horrek laster zaitu
bakean lagako,
atsegina ereingo
dugu guretako,
bizinahia haz dadin
bion zorirako.

*2017ko uztailaren 23an*

*639*

**Jose Antonio Alberdi Zabaletari**

1

Zu, zeu, Porrotx, Pirritx eta Marimototsekin,
"Goma" laket zaude Amañan eurekin,
nahiz betiro zabiltzan jaietan presaka
atsedena ondo etorriko zaizu,
arnasa har ezazu beraz kezka barik
egitarau dena martxan dago eta.
Jada jaiak eratzen lau bat hamarkada

urtero auzoan magia zertzeko,
hamabi hil lanean saltsa osatzeko
aurrekontuari buru egiteko,
haurrak alai daitezen helduak adina,
uztailean leher dadin txapligua.

2
Kaltetzeko SGAEk zerga ezarri du
baina zu ez zara enpresaburu bat,
izerdia isuri da zuk dagizuna
eredugarriak diren kide jatorrekin
izain horiek odola xurgatzen ohi dute,
eskerrak Eibarrek lagundu dizula.
Kulturako jendea bat dator zurekin
elkartasunean batuko zarete,
lagun minek horixe egingo baitute
pilpiren gunea ez dadin itzali,
auzolana delako Amañan indarra
pailazoak dira oholtzara igo.

*2017ko uztailaren 23an*

*640*

**Barraskiloak ez du gatazka gaindituko**

1

Barraskilo txepela maskor barrenean
euria atertu arte egongo da,
hori dagi molusku gasteropodoak
ekiaren printzak irten bitartean,
ohitura da zinetan erabat eskasa
bere zera zaio horrela moteldu.
Herrestan da higitzen lorratza marrazten
presa barik doa Herioren bila,
azkarrago naturan arituko balitz
bizirik gehiago iraungo luke,
zozoa ez denean gizakiak gara
jasotzen duguna gerora jateko.

2

Prozesua ez dabil nahi genukeen lez,
gatazka ez dugu oraindik gainditu,
estatuek galgari sakatzen diote
eusteko horrela status gaitzari,
arinago batuta joango ginateke,
geure baloreak landuz sendoago.
Barraskiloarena luzaro eginda
kazola batean amai genezake,
lanabesak gogotsu eskura ditzagun
lurrak eman ditzan oparo fruituak,
dastatuta pikuak euskal maratoian
helmugara trostan libre hel gaitezen.

*2017ko uztailaren 23an*

*641*

## Biktimok elkarbizitza hitzar dezagun

1
Estatuak biktimak
ditu erabiltzen,
politika gaitzetan
zakarki hariltzen,
bereak ez direnak
baititu isiltzen,
joan ziren minak hola
berriro erailtzen,
memoria basatzan
ari da murgiltzen.

2

Zeure sufrimendua
nahi nuke sentitu,
jakin dezazun zenbat
dudan nik sufritu,
tamalez bortxak noizbait
gintuen etsaitu,
Francorekin hasi zen
gatazkak zauritu,
konponketak gozoro
gaitzala ongitu.

3
Bengantzak dizulako
bihotza hormatu,
zentzua nahi nizuke
musu-truk opatu,
gorrotoa dezagun
behingoz, zokoratu,
atseginez gaitezen
biok laster batu,
giza eskubideak
ditzagun goratu.



4
Garari berrira gara
tinko abiatu,
herriak zuzen dezan
bakea eratu,
ez ezazu zoroki
bidea puskatu,
zuretzat ona denez
ere gerizatu,
hil zutena dezagun
gogoan ondratu.

5
Biktimak plazan gara
zirraraz elkartu,
elkarbizitza dugu
kemenez hitzartu,
herritarrek gurekin
dute parte hartu,
hurbiltzera garenez
zintzoki ausartu,
Gernikan ñirñirka da
ortzia izartu.

6
Biktimok bikain dugu
geroa marraztu,
inoiz ez ditzagun joan
zirenak kakaztu,
pairatu eta gero
hainbeste oinaztu,
ika-mikak ditugu
hitzekin araztu,
gizaki gisa gara
oro aberastu.

*2017ko uztailaren 30ean*

*642*

**Gaur Beatriz Artolazabali esan diozu...**

1

DBSEa (*) da zuretzat arnasa
diru horri esker ez zara hondatu,
ematen dizuten kopuruarekin
ataka lakarrak leuna dirudi.
Artolazabalek aztoratu zaitu
erreforma hitza esan duenean,
hori lasai dio bikain bizi denak,
sari oparo bat jasotzen duenak.
Eusko Jaurlaritzak iragarri ditu
laguntza horrentzat aldaketa batzuk,
ez duzu arrazoi zekena ulertu
zu lakoen kontra izango delako,
nahiz behar gorrian jende asko egon
nahitaez teilatu bera konpartitzen,
sailburuak ditu kenketak egingo,
"etxe bakoitzean soilik errenta bat".



(*) *Diru Sarrerak Bermatzeko Errenta.*

2

Etxe zaharreko txirrina jo duzu,
berriro joan zara gurasoengana,
eskerrak aldiro musu-truk duzula
euren atsegina naro sentituko.
Errauskailu gaitzak eta AHTk
pobreen txanponak lapurtzen dituzte,
Eusko Jaurlaritza tamalez ari da
ohi legez itsuski aberatsen alde.
Gaur esan diozu politiko horri
“zuzen ari zaitez, etikoki jardun”,
“behekoak zaindu goikoen zergekin,
karriketan poza trostan ibil dadin,
hobe ei delako sosa banatzea
bankuan gordeta edukitzea baino,
horrenbeste krisi eta musu goibel
kontsumo hurbilaz hobetu daitezen”.

*2017ko uztailaren 30ean*

*643*

**Hiru urte barru irria eta irrika**

1

Zeru motzari beha
arrats ubelean,
zeurekin oroitzen naiz
ziega goibelean,
nirekin zaudelako
zigor itzelean,
tximeletak sentitzen
ditut sabelean.



2

Gatazkak gogor zizun
bihotza zauritu,
baina inoiz ez gara
aldapan gelditu,
esperantzak gogoa
digu ongarritu,
bizinahia barnean
dakigun hozitu.

3
Ia hamazazpi urte
tristatu ginela,
bidean zigutela
ezarri kartzela,
nahiz iruditzen zaigun
bizitza txepela,
zingira izango da
bihar urmaela.

4
Urriak hamazazpi
iristen denean,
izpiak dakuskigu
etorkizunean,
nahiz arras urrun zauden
etxe barrenean,
aldiro batzen gara
desiren gunean.

5
Enarak legez hegan
noa zuregana,
maitez dugu batera
ospatzen izana,
alai kontatzen dizut
kideek esana,
“noizbait eroriko da
herraren porlana”.

6
Urriaren hamaikan
dizut xuxurlatu,
ia direla kate
ugerrak zartatu,
gerezien aroa
dadin hurreratu,
tinko beharko dugu
bengantza bezatu.

7
Urrira danga heltzen
garen bakoitzean,
txolarreak pausatzen
dira erlaitzean,
arima gal ez dadin
etsipen hitsean,
gu gara Egoarbitzan
elkartzen haitzean.

8
Kostata dugulako
gaindu izurria,
zain dago hiru urte
barruko urria,
irria izango da
geure hazkurria,
irrika agortuko
ez den iturria.

*2017ko abuztuaren 6an*

*644*

## Joan zaigun Kepa Del Hoyo Hernandezi

1

Ezlekuan gauzkate barruaren barruan,
ordu asko nahitaez leotzetan sartuta,
horma garai grisaxkak dakarrenez itzala
ekiaren izpiek gutxi dute irauten,
ez ditugu leihotik ederresten izarrak
zeru soila delako laukizuzen mehe bat.
Astean behin zokotik garenean irteten

aldapatik zorira azkar gara iristen,
zeruaren adina xarma zaigu handitzen
begiei uneak dakarkie distira,
lorategietatik mintzalekuetara
dena ohi da irria eta txantxa sanoa.
Berehala ditugu hitz xamurrak aditu
barroteen artetik geuri deika dabiltza,
gu etorri garela Mirentxinen dirudi,
eurak, berriz, direla bertan preso daudenak,
hurrengoan berriro aitortuko digute:
“zuek gabe ez gara inoiz libre biziko”.

2
Ametsetan hurkoak besarkatzen ditugu,
bakardade honetan desiraz blai maitatzen,
telefonoz pozarren garenean mintzatzen
bihozñoak zin-zinez hasten dira punpaka,
modu asko dauzkagu sentitzeko zirriak
horregatik ez gara deserrian ihartu.
Elkartasun joriak duelako ahala
sentiera bizian esperantza hazten da,
zoritxarrez estresak segada prest duenez
zigorraren zoruan minki gaitu kaltetzen
gaur Keparen ametsak deklamatu ditugu,
Maite, Peru… bisitan hola dugu omendu.
Kepa, Euskal Herriak ihintza du isuri,
Galdakao maitean datza zure gorpua,
zenuenez oparo ongarritu baratza
uztak oro dizkigu asetuko xedeak,
mardul zara laztana gure baitan esnatu
Gorbeiara zurekin laket gara igoko.

*2017ko abuztuaren 6an*

*645*

**(1-0) Geure desira urriak 1 ospatzea**

1
Erresiñola birgaitzen
dabil bere habia,
goitik “Els Segadors” dantzu,
himno hunkigarria,
“Casteller” bat sortu dute
adierazteko nahia
katalanen esperantza

da independentzia.

2
Diadan elkartu dira
bihotz oro xaloak,
Bartzelonara ditugu
zuzendu gure soak,
gu noizbait izan gaitezen
eurak bezain iaioak,
kemenez buru ditzagun
aspaldiko asmoak.

3
Legebiltzarrean esan
dituzte hitz sendunak,
jakobinoek, ordea,
diotez akastunak,
arren, ez dezala mana
egoismo zurrunak,
baizik denontzat onura
ohi den gizatasunak.

4
Rajoy mendekari latza
ari da mehatxuka,
katalanei arnasa
ez diezaiela uka,
"Askatasuna" ontzia
ez dadin gal zabuka,
iltzez josten hasi dira
ahalmenak mailuka.

5

Biziki pipertu dira
ustezko demokratak,
maginetatik atera
nahi dituzte ezpatak,
Euskal Herrian ditzagun
jator bete estratak,
ez dakizkien ken hurko
maiteei ezkatak.

6

Urrian entzungo dugu
katalanen danbada,
ospakizuna gabiltza
prestatzen gogoz jada,
elkartasuna delako
herrien besarkada,
har dezatela gurekin
behar duten aupada.

7
Katalanak omen dira
ebatziko dutenak,
alde egon zein ez egon
bertan bizi direnak
“estelada”k babestuko
ditu biztanle denak
giza eskubideekin
herriko eskumenak.

8
Erresiñola hasiko
zara libre hegatzen,
zeure eredu ausarta
hemen dugu laudatzen,
lurraldetik joango gara
bidean aurreratzen,
herrien Europa tinko
zeurekin gerizatzen.

*2017ko abuztuaren 13an*

*646*

**(2015.11.30) Zuekin mintzatu nintzen**

1

Untzagan lurruna sanandresetan
elkartasuna usaindu dut,
Etxeratek dauzka postuan salgai
txistorrak maitez frijituta,
trikitisarekin begiak dir-dir
gogoan gaude ez gaudenak.
Musu gorrietan islatzen baita
eibartarrek gaur nahi dutena,
gatazka gaintzeko konpromisoaz
lora dadila amnistia,
ordua delako trabak kentzeko
elkarbizitza sustrai dadin.

2

Alai mintzatu naiz lagun minekin,
bihotza pil-pil dutenekin,
gurekin batu da behe-lainoa
samurtasuna ukitzeko,
eskatuko dio eguzkiari
ager dadila izpiekin.
Elaiak zain gaude deserrietan
Euskal Herrira hegatzeko,
ametsak zuekin konpartituta
udaberrian mamitzeko,
sagardoarekin topa eginez
ospa ditzagun sanandresak.

*2017ko abuztuaren 13a*

*647*
## Akulturazioak ez dezan jan txantxangorria

1
Akulturazioak irentsiko gaitu
ez bagara gauza baratza zaintzeko,
“nork aukera dezake zer izan nahi duen”
hori esateko ez daukat ezbairik,
zoritxarrez oro har hobesten ditugu
multinazionalen argi dirdaitsuak.
Euskaldunak garela erdaraz diogu,
hegemonikoak lez aritzen gara,
gu geu izan gaitezke txit unibertsalak
aniztasunaren partaide bagara,
ez dezagun amaitu kolonizatuta
euskal sorkuntzari lagun diezaiogun.

2

Ezin gara gu izan euskararik gabe,
ez dago gerorik sustraiak galduta,
ekoizpena geurean agortuko balitz
soilik ginateke izango ezdeusa
nortasuna naroki ongarri dezagun,
uztak truka ditzagun beste kulturekin.
Guk ez dugu izan nahi besteen morroiak
baizik atseginez herrien hurkoak,
zentzu barik jardunda amilduko gara,
kultura ereinda ostera biziko,
lurraldeko bitxiak plazara ditzagun
txantxangorriari entzun diezaiogun.

*2017ko abuztuaren 13an*

*648*

**1936… Kartzelak hiltegiak izan ziren**

1

San Kristobal, Ondarreta,
Saturraran… ospelak,
falangistak izan ziren
presoekin krudelak,
leotz nazkagarri haiek
zirelako umelak,
birikak jango zituen
hetika gaitz ustelak.



2

Barruetan gatibuak
zituzten izorratu,
libre ustez laga eta
ankerki fusilatu,
Francoren agindua zen
"gorriak" akabatu,
Euskal Herria ez zedin
inoiz egituratu.

3
Kartzelak gerretan izan
ohi dira hiltegiak,
esparruak zerabiltzan
hola Hitler naziak,
arbaso asko hil zigun
Francoren sarraskiak,
geroa ia lurpetu
ondorengo luiziak.

4
Bilbon senak zirelako
bonbekin aztoratu,
herritar batzuk ez ziren
etikoki portatu,
preso faxistak zituzten
bidegabe kolpatu,
hiraz jazarrita hainbat
errugabe pitzatu.

5
Saturrarango hobena
noizbait zuten eraitsi,
bertan zituzten andrazko
eta umeak itxi,
gosez, hotzez...handik onik
irtengo ziren gitxi,
mojak ziren deabruak
izatera iritsi.

6

Ondarretako orbana
izango zen sorgorra,
preso zeuden arimentzat
sufrimendu gogorra,
bizitza hor zekusaten
izututa ezkorra,
zintzilik zeukatelako
heriotza zigorra.

7
Ezkaban gotorlekua
zen madarikatua,
San Kristobal gaur egun da
harri multzo mutua,
ihes egitea izan
zenez euren hautua,
larrutik ordaindu zuten
presoek apustua.

8
Ezkaban zut daude erail
zituztenen sendiak,
botilen hilerrian du
berba egin herriak,
"hor nonbait darraitenentzat
pilpiraz irrintziak,
topatu arte ditzala
babes izartegiak".

*2017ko abuztuaren 20an*

*649*

**Biktimak ondratzeko euskal memoria**

1

Txingorra luzaro jasan dugulako
ostadarrak haiza dezala ekaitza,
herrian dezagun arnasa baretu
ariman dakigun lili atsegina,
zintzo hasi gara lantzen enpatia
besteen samina ondo ulertzeko.
Abia gaitezen bidean batera

sasidia bihur dadin belardia,
hemen kaltetuak denok garen arren
iraka garitik bereiziko dugu,
uzta ez dezaten gal pozoia hedatuz
bengantza sustatzen diharduten horiek.
Francok zuenean lehertu bizitza
terrorearekin zanpatu gintuen,
eusteko goiari herra geratzeko
mendira joatea ebatzi genuen,
bortxan herriaren alde sartu ginen
egun irten gara xede berarekin.

2

Jada bete dira zortzi hamarkada
zerrenda goibela hazten hasi zela,
bakoitzak bereak gogoratzen ditu
argitara ñir-ñir atera ditzagun,
ondratuta giza eskubideekin
lurraldean dute atseden hartuko.
Bizikidetzaren plazak apainduta
ospatuko dugu garai oparoa,
inortxok ez ditzan biktimak bakartu
bihotzetan sakon sustraitu ditzagun,
ekiaren printzek argizta dezaten
ilundu ziguten herri dirdaitsua.
Biktimak ditugu oro asetuko,
testigantza latzak arretaz jasoko,
historia zuzen idatz dezakegu
egiak landatuz gezurrak erauziz,
matazak bilduta hariak harilduz
ehunduko dugu euskal memoria.

*2017ko abuztuaren 20an*

*650*

**Camilleri. Hartzei**

1

Hartzak, otsoak, baleak…
joan ziren pikutara,
guk eraginda sentitu
zutelako ikara,
arren, itzul daitezela
berriro naturara,
Kantauri itsasaldera
eta mendietara.



2

Hartzak eta gizakiak
omen gara etsaiak,
geurea dela hobena
goitik dio elaiak,
nahiz arbasoenak ziren
haranak ta ibaiak,
kendu genizkien kobak
eta baso garaiak.

3
Mañarian azken hartza
danba zuten kalitu,
aziendak bazkatzen, ustez
ezin ziren aritu,
Marik galera sakonki
zuelako sufritu,
Euskal Herria negarrez
erabat zuen blaitu.

4
“Hau bizimodu petrala”
esango zuen hartzak,
seko laga zuenean
handinahiaren martxak,
Basajaun jeinu onbera
guregana ekartzak,
oro aberats ditzaten
basoak ta belartzak.

5
Tamalez hartz asko daude
itxita kaioletan,
horrela dauzkate batzuk
munduko zooetan,
egon izan zarenean
urtetan leotzetan,
zuk dakizu euren sena
dagoela penetan.

6
Hartza hobe basatia
hezur-haragizkoa
soilik ondo moldatzen da
delako halakoa,
lozorroan igarota
egun motzen aroa,
irrikaz usainduko du
bedatse oparoa.

7
"Piztitzar arreak" deitzen
ohi die ezjakinak,
guk genizkien, ordea,
murriztu atseginak,
janik gabe joango ziren
geratzen hartz bikainak,
mendetan jasan dituzte
horrelako irainak.

8
Hartzik gabe izadia
irizten zait herrena,
Erronkarin noizbehinka zen
ibiltzen Camille zena,
hauxe da neure gogoak
desiraz dioena,
"basoan entzun dadila
orrorik ozenena".

*2017ko abuztuaren 27an*

*651*
## *No Future* bai izan dadin

1
Punk mugimenduak *No Future* zioen
“azkar bizi zaitez gazte hiltzeko”,
britaniarrek ei zuten abiatu
gurean ospea lortuko zuen,
musikak hor darrai, kulturak, berriz, ez,
hainbat kantari lez, desagertu zen.
Menderakaitz haien berbak bat zetozen

hobesten genuen bizitzarekin,
hautsi behar zela oraina zioten
gazteok gerorik izan genezan,
Ingalaterra ez zen gu baino gehiago,
Gaztetxeak ziren paradisua.

2

Norbaitek, uste dut, grinaz zioela
“geroa gure zain hil arte dago!”,
gaztediarena izan ohi delako
oldozmen baikor bat iruditzen zait,
baina sinistea lar kostatu arren,
dena zurrupatzen ari baikara.
Nahitaez behin bakarrik bizitzen garenez
geroa gabiltza gaur baldintzatzen,
mundua basatza bihur daiteke
jarraitzen badugu kontsumismoan,
punken errepika ez dadin gauzatu
ez dezagun ahaz *The Clash* taldea.

*2017ko abuztuaren 27an*

*652*

**Espetxetik Durangoko euskal azokari**

1

Berrogeita hamar urte bete eta mardulki,
zazpi Euskal Herriak sorkuntzak aurkezten,
argi printza diktaduran, kulturaren egoitza,
pizkundea has zedin gune aproposa.
Hasieran txikia zen, orain, berriz, handia,
arima du lehen lez apala, ordea,
esperantzak bertan dagi abendero habia
horri esker ez gara bizi gaur mortuan.

2

Euskaldunak zinez dauka iturririk onena
ura edan naroki dezakeelako,
usainduta liburuak dastatuta doinuak
sentimenduz gainezka etxera heltzen da.
Nahiz bost egun gutxi diren urte baten barruan
ez da inoiz agortu emari gardena,
zeure baitan desioak oro zertzen direnez
espetxean zurekin elikatzen gara.

*2017ko abuztuaren 27an*

*653*

**Alkoholak mendekatzen gaituenen**

1

Geure sena erotzen
duen malezia,
gibela zorrotz digun
zulatzen gezia,
hankak zakar dizkigun
trabatzen hesia,
harremanak eteten
dituen luizia,
nahiz neurriz edanda
ohi den delizia,
alkohola da herri
honen minbizia.

2
Istripu bat izan dut
autoa gidatzen,
gerta zitekeenik
ez nuen pentsatzen,
ardoa egon nintzen
tabernan tragatzen,
konturatu orduko
nenbilen pairatzen,
errepidetik kanpo
kostuak zenbatzen,
ertzainen tutuari
arnasa botatzen.

3

Isun potolo bat dut
saminez pagatu,
gidabaimenik gabe
naute izorratu,
etxean gero dira
nirekin tristatu,
bizipoza batean
baitzait beheratu,
alkoholak bizitza
baitit baldintzatu,

ongizate naroa
nahitaez kraskatu.

4
Alkoholak ta drogek
gaituzte kaltetzen,
euren menpe hartuta
bizkorki pobretzen,
ez dute herriaren
ataka hobetzen,
baizik askamenaren
bidea lurpetzen,
ea ditugun grina
eskasa baretzen,
xedea has gaitezen
ganoraz asetzen.

*2017ko irailaren 3an*

*654*
**Biharko Aberri Eguna**

1
Aberri Eguna bihar izango da
askatuko garen egunaren data,
kolore bizien ostadar itzela,
bake zuzenaren lurrin atsegina,
amnistia eta oroimen zintzoa,
joan ziren mamien une dirdaitsua,
euskara, kultura eta ikurrina
aniztasunaren irrintzi alaia.

2

Data hori izan dadila gorria,
elurra bezala erabat zuria,
berdintasunaren auzolan berdea,
munduari beha aterpe morea,
lehengo ametsen loraldi naroa,
elkartasunaren baratz emankorra,
elkarbizitzaren eredu gardena,
askatasunaren egun eternala.

*2017ko irailaren 3a*

*655*

## Maitasuna zaretelako

1

Ziegan aise dabil samurtasuna,
gogoan zaudete sorlekua lez,
joan zinenetik mintzatzen gara,
kulunkatzen gogoz sentimenduan,
oroitzen ditugu bizipen onak,
oraingo desirak grinaz aletzen.
Egun zuek eta ni bizi gara

atseginez beste modu batean,
txit laguntzen digu irudimenak
harreman berria senti dezagun,
geroa ehundu nahi dugulako
aukeratu ditut hari lodiak.

2

Barruan batera bizi garela
letretan aldiro idazten baitut,
noiznahi diotsuet behar dudala
zuen presentzia hunkigarria,
maitasuna izan zinetelako
gauero zaituztet kantuz omentzen.
Aitxa eta ama ez zaitezte hits
Eibar gero eta hurrago dago,
Arratera gara sarri igoko
bihotzean gozo egon zaitezten,
Gurutzetik libre hegaldatzeko
gure izadia ohoratzeko.

*2017ko irailaren 3an*

*656*

**Kurloiei esker**

1

Kurloiek digute poza eskaintzen
papurrak jatera datozenean,
hormatzar grisaxka berdatzen dute,
hurbiltzen gaituzte Euskal Herrira.
Nahiz belatzak urrun hegatzen diren
maiz alde dagite ikaratuta,
gero, berriz dira urduri jingo
gosea delako atzaparkada,
habian goizero kantatzen dute,
sinfoniarekin jaikitzen gara.

2

Leihoen aurrean pausatzen dira
egunean zehar otorduetan,
eurek ikuskizun eder hauekin
soei distira dakarkiete.
Papurren peskizan saltoka datoz
irensten dituzte bizkor mokoka,
nahiz ezleku hitsak krudelak diren
noizbehinka heltzen da samurtasuna,
ohetik txioak entzun ahala
maite zaitudala baieztatzen dut.

*2017ko irailaren 3an*

*657*

**(2017.08.17) Catalunyaren mina geurea da ere**

*Habanera*

1

Catalunya kolpatu du
Estatu Islamikoak,
izuak armatzat zeuzkan
sinesdun makur eroak,
Rambletan eta Cambrilsen
jazo ziren erasoak,

iman faltsuek dituzte
sutzen gazte kokoloak,
Alak inoiz ez zituen
eskatu txikizioak,
Koranean transkribatu
ziren soilik hitz lañoak,
izugarriak ei dira
gaizkile horien asmoak,
bat baita munduan agin
dezala kalifatoak.

2

Rambletan ozen entzun zen
mendekuaren motorra
inguru zoragarria
bihurtu zuen mingorra,
Bartzelonak ordaindu du
brast berea ez den zorra,
gizatasuna bortxaz da
geratu arras idorra,
Siria, Irak… direnez
bidegabeki Gomorra,
elkartasunak dezala
ongarri denon alorra,
yihadistak burmuinean
zokora dezan zaborra,
konpartituz ondasunak
izan dadin maitekorra.

3

“Ez dugu beldurrik” zutik
diote Katalunian,
ezin da gaur jarri oihu
horren zentzua ezbaian,
baina “neri bost” diosku
martiriak estasian,
ustez biziko delako
paradisuan zorian,
gorrotoa gera dadin
histuta amildegian,
giza eskubideekin
tink has gaitezen abian,
yihadistek ez dezaten
izan euren sen urrian,
motiborik jarraitzeko
eromenaren gurdian.

4
Zendu dira yihadistak,
turistak, egoiliarrak…
etxe guztietan hautsi
euren hurkoen bularrak,
atakak laga dizkigu
baitan sentimendu txarrak,
ziztatu gaituelako
amorruaren laharrak,
egun botatzen dituzte
ankerki bonba baldarrak,
Europan erruz ditugu
ekoizten arma lakarrak,
bakea zertu dezagun
erauziz gerren zuztarrak,
Catalunya blai dezala
herri libreen langarrak.

*2017ko irailaren 10ean*

*658*

**Turismoa senduna izan dadila**

1

Turismoa gora eta behera,
askatasun horrek sorgintzen gaitu,
zoragarria da bidaiatzea,
paradisuaren bila joatea,
motxilan sartzea turista hitza,
uda oroitzea argazkietan.
Uholdea brasta heltzen denean

plazera, zoria eta estresa,
bidaia enpresek asetzen dute
guretzat grina den kontsumismoa,
bizipoz honek du iraupen motza,
udako hileak bezain laburra.
Nahiz diogun dela eskubidea
pribilegio bat da turismoa,
pobrezia dakar basa denean,
kanporatzen ditu egoiliarrak,
lainoetan daude alokairuak,
lan baldintzak zolan ostalaritzan,

2

Donostian gauak ez du mugarik,
haserretu dira Alde Zaharran,
alkoholak dakar burrundadia,
ordu txikietan katuak gara,
atsedenik gabe kinka pairatuz
turista sendunak aztoratuta.
Turismoarena konpon dezagun
geurea ez dadin bihur Las Vegas,
erakar ditzagun jende xaloak
zertzeko jatorki hartu-emanak,
ezagut ditzaten jai herritarrak,
ametsak, kultura eta euskara.
Gu bisitatzera jingo direnak
izan daitezela gure lagunak,
sinergiak bikain lora daitezen,
hobe dadin gaurko mundu petrala,
turistek gaur beste migratzaileek
aberats dezaten Euskal Herria.

*2017ko irailaren 10ean*

*659*

**Jubilatu den Sumendixako Pantxikari**

1
Pantxika deitzen diogu
geure astemeari,
inoiz ez dio muzinik
egiten arbiari,
behar batzuk degizkio
Eibarko udalari,
baserrian, berriz, dago
begira naturari.



2
Pantxika belarri-luze
setatsu, larru-latza…
mandeuliak haizatzeko
astintzen du isatsa,
ez badiozu lagatzen
hartzen patxadaz hatsa,
tak estanpatuko dizu
muturrean apatxa.

3
Pantxikari ezjakina
diotso abadeak,
baina ondo dazaguzki
Arrateko bideak,
guk baino hobe dakizki
bizitzaren kodeak,
jakingo dituen beste
laster bere ordeak.

4
Nahiz alfer ospea daukan
ez dago egonean,
Pantxikak otzarak zuzen
daramatza gainean,
Eibarrera doa jaiak
ospatzen direnan,
atseginez dabil baso
sarrien barrenean.

5

Olentzerorekin dakar
makina bat opari,
Gabon Gauaren magiaz
erraz dautso goiari,
Eibarko umeek dute
ferekatzen kantari,
arrantzaka erantzuten
die euren xarmari.

6

Aratusteetan joaten
da Kaldereroekin,
erotuta klinki-klanka
mailuen kolpeekin,
pilpiraka dabil beti
motzaile jatorrekin,
sorginduta dakuskien
jantzi dirdaitsuekin.

7
Danborradan gustura da
irteten sanjuanetan,
daborren hotsekin oinez
Eibarko kaleetan,
ajea izaten ohi du
gero halakoetan,
kortan sartzen dutelako
ezohizko orduetan.

8
Pantxika jubilatuta
ederki bizi zara,
Eibarren zure zaleak
lehen lez pila gara,
gatazkak noizbait ninduen
eraman kartzelara,
agurtu gura zintuzket
asteme ilunkara.

*2017ko irailaren 17an*

*660*

**(Laukiz, 1905 – Gasteiz, 1937)**

**Estepan Urkiaga "Lauaxeta"ri**

1

Lauaxeta gertu sentitzen zaitut
Mungian, Gasteizen.... olerkietan,
Otaegi eta Txiki adina,
Francoren enparau biktimak beste.
Udako iluntze neketsu hartan
idatzi zenuen "Azken oyua",
axota hartuta beldurrik gabe
askatasunari dena emanda.
Zu ez zara galdu ezerezean
egun ondareak mardulki darrai,
obrak dizkizute doinuz apaindu
zirrara noranahi ailega dadin.
Antton Valverderi esker jazo zen
Estepan zintudan noizbait agurtu,
geroztik sarritan elkartu gara
etzateko zeure hitzen zelaian.

2
Gernikan zintuzten atxilo hartu,
Gasteizen faxistek epaitu gero,
hilerriko horman goiz-argian hil,
historiak zaitu piztu, ordea.
Gerra salatzea gura zenuen,
sinbolo kutuna hautsi zuena,
kazetari frantsez batekin zeunden
munduak egia ezagut zezan.
Ekainak hogeita bost ei zituen
ordutik joan dira larogei urte,
nahiz hatsa tiroka kendu zizuten
bizirik dirauzu sentimenduan.
Euskara maitatu zenuelako
mihiak sorkuntzak laztantzen ditu,
Lauaxeta mina jator diotsut
zeureak direla geure taupadak.

*2017ko irailaren 17an*

*661*

**Nerabe jazarriei**

1
Nork ez du jazarpenik
umetan sufritu?
Galdetu dut ez denez
gaitz hori finitu,
jendartean dezagun
afera ongitu,
ez dakigun gerora
bihotza txikitu.

2
Nerabezaroa da
une kritikoa,
komunikazioak
galtzen du ildoa,
hoztasunez tratatzen
duzu gurasoa,
bizitza bilakatzen
zaizu oztopoa.

3
Nerabea mintzen du
jazarpen ergelak,
eragiten dizkio
ondoez itzelak,
ahularekin gara
izaten krudelak,
behingoz, bazter ditzagun
praktika ustelak.

4
Tamalez dramak darrai
bidea sasitzen,
nerabeen irria
dar-dar iraungitzen,
beharbada ez dugu
zuzen transmititzen,
haurreriaren sena
egoki hornitzen.

5
Zergatik bizinahia
ziplo da bukatzen?
zergatik dira makur
nirekin portatzen?
Aizue has gaitezen
atseginez batzen,
lehen genegien lez
zoria sustatzen.

6

Zuek sarri nauzue
oro ikaratzen,
hasten zaretenean
harro akuilatzen,
zintzoki has gaitezen
sasoia gozatzen,
adiskidetasuna
jator elikatzen.

7
Gaur buruaz beste du
egin nerabeak,
hurkoak beste daude
lur jota kideak,
doluak behar ditu
taxuzko eleak,
elkartasunak ditzan
fereka nekeak.

8
Zendu den nerabeak
gaitu deitoratu,
inortxok ez ditzala
hitzak ezabatu,
bihurriak beharko
ditugu bezatu,
jazarriak pozarren
daitezen esnatu.

*2017ko irailaren 24an*

*662*

## (1936ko abuztua)
## Juana Josefa Goñi eta sei seme-alabei

1

Izu beltzera jaitsita distira dute ikusi,
ahanzturan gal ez dadin uste zena topatu,
leizetik hezur hautsiak kontuz jasotzen dabiltza,
ezin zuenak sinetsi negarrez da urrundu,
ama eta sei haurride herrak amildu zituen,
norbaitek dar-dar esan du “ziur aski bizirik”.
Ezberdinak ei zirenez estu jazarri zieten,
Franco oldartu zelako bortxa deslai zebilen,
doktrina oro ankerrak eragin zuen triskantza,
atzerakoien gezurrak ehizaldia eratu,
holokaustoa zertu zen gurutzadaren aroan
eromen hura zelako zoru hartan sustraitu.

2

Hil zituztenen hurkoek egia jakin nahi dute,
sentitzeko lur emanda baitan bizi direla,
“barkamenik ez” diote, “baizik harreman xaloak”,
ez dutelako hobenik makur haien ordeek,
leizea izan dadila oihartzun eta zirrara
berriz jasan ez dezagun halakorik geurean.
Legarreako gunean begirunez bil gaitezen
sendiak eta herriak atseden har dezaten,
zauri sakonak betiko zuzen orbaindu daitezen
samurtasunak bihotzak ferekatu ditzala,
gertakizunak sorraraz digun ondoez mingotsa
Gaztelun ezti dezala sentimendu sanoak.

*2017ko irailaren 24an*

*663*

**(2017.07.10) Ermuan egon gara**

1

Ilunsentian sentimenduz blai
idatzi dut iritzia,
denok genuen lurpetu Blanco
Ermuko zinegotzia,
estatuak ez zuen nahi ñir-ñir
argi zedila ortzia,
agintariek estali zuten
ona zen exigentzia.



2

Aznar zekenak gizatasuna
estu zeukan jazarria,
egun haietan espetxeetan
kinka zen oso larria,
ase genezan plazetan, behingoz,
urtetako egarria,
“Euskal presoak Euskal Herrira!”
baitzen gure aldarria.

3
Ia hogei urte piztu zutela
Ermuko espiritua,
Mayor Orejak maltzurki zuen
akuilatu mendekua,
ez dadin jazo garai hartako
testuinguru sutsua,
“gatazka zuzen konpon dezagun”
da gure ohiko mezua.

4
Eraso asko jasan genuen
ondorengo egunetan,
faxistek traba barik zituzten
egin herri batzuetan,
eskerrak udak moztu zuela
ehiza hura oporretan,
baina kideen ataka ez zen
hobetu espetxeetan.

5
Zergatik giza eskubideak
sorgor ditugu zanpatzen?
Zergatik hasi ziren monarkak
herriñoak konkistatzen?
Rajoy zergatik darraizu Macron,
Trump... lez bakea pitzatzen?
Barruan itaun hauek ari naiz
goibeldurik ahoskatzen.

6
Bortxak gaur egun adina zuen
mintzen arimen alorra,
esperantzari egin zitzaion
horri eustea gogorra,
abagunea txarra zelako,
herriarentzat elkorra
gerora martxan jarri genuen [1*]
drama gaintzeko motorra.



[1*] *Lizarra Garazi.*

7
PPren hitza dirudi dela
Garbi Falangearena,
zurea ez da izan Ermuan
Totorika [2*] Ghandirena,
aizu heldu da zauri zaharrak
ixten hasteko orena,
joan ziren minek senti dezaten
arantza barik garena.

8
Ermuan egon gara pilpiraz
gertaera oroitzeko,
PPkoa zen ermutar haren
tragediaz hunkitzeko,
gure herriak elkarbizitza
nahi duela sentitzeko,
mugarik gabe erabiltzea
boza libre bizitzeko.

*2017ko urriaren 1ean*



[2*] *Ermuko alkate ohia.*

*664*

**Kartzelan ez dago zerurik**

1

Preso batzuk zigor esparruetan
ohatzean luze daude etzanda,
uste dute Zeus beste direla,
ez dago zerurik ziegan, ordea,
euren telebisten zarata dantzut,
iruzkin lizunak ozen diotez,
nahiz kartzelan garen protagonistak
“Anaia Handia” gustatzen zaie.
Leihotik harroki aritzen dira
ekintza eskasak txor-txor kontatzen,
zatarki goratuz burdin saretik
lapurretak eta liskar ergelak,
barrua delako oilarren zola
bizitza kaskar hau hobesten dute,
zoritxarrez hemen bakarrik dira
gandorrik gabeko izar lausoak.

2

Txantxaz dioskute, “zirtzilak gara”,
batzen garenean aisialdian,
drogen mende eta hezkuntza barik
isolamenduak usteltzen ditu,
gazteak direnez pentsatzen dute
ez direla inoiz aguretuko,
ohartuko dira noizbait nahitaez
hormen erresuma lupetza dela.
“Buruak zentzatu”, gure mantra da
etxekoen alde jardun daitezen,
jarrai ez dezaten kraka izaten,
grina egoisten jopu gaixoak,
bigarren graduko moduluekin
amesten dutela sarri diote,
elkartasunean dago, ordea,
egun behar duten ongizatea.

*2017ko urriaren 1ean*

*665*
**Egoskorrei**

1
Herrian deitzen didate
Pipermin Egoskorra,
besteen iritziekin
izaten naiz lar gorra,
garaipenak lortzen ditut
naizelako gotorra,
nirea soilik delako
egiaren alorra.



2
Piperminek dio, “ni naiz
xextra barik aspertzen”,
hitz egitea ez dela
guda ez du ulertzen,
tronpatzen bada gainera
gurekin da pipertzen,
gero kexatuko zaigu
dugulako baztertzen.

3
Egoskorra zarelako
erraz nauzu nekatzen,
gogotik ziplo didazu
umorea uxatzen,
Pipermin utz iezadazu
jatorki kontseilatzen,
ikas ezazu hurkoa
zintzo errespetatzen.

4
Ez duzu nahita aditu
arrazoi borobila,
eztabaida galdu baino
hobe da nahaspila,
ea bilakatzen zaren
hiztun ordez isila,
zeren orain dirudizu
iluntzeko txirtxila.

5
Zu noiz portatuko zara
lagun minak bezala?
Zeuri hori eskatzea
ez da gauza makala,
egoskorra izan arren
izan zaitez jabala,
harroxkoa izan barik
atseginez apala.

6

Zeuretzat zaila delako
amore ematea,
horrek eragiten dizu
makurra izatea,
otoi, zabal iezaiozu
irriari atea,
burmuinetik ken dezazun
astuna den katea.

7
Izan edo ez izan da
egun zeure auzia,
gaintzeko laster ganoraz
jarrera itsusia,
ez dezazun sarri entzun
gure aharrausia,
ez zaitez berriro izan
hitz-mizti nagusia.

8
Egoskorra izan zaitez
burua zentzatzeko,
hartu-emanen arauak
zakar ez urratzeko,
seta hori erabili
herria askatzeko,
injustizia kemenez
non-nahi deuseztatzeko.

*2017ko urriaren 8an*

*666*

## Hau da gure sagardo berria

1

Sagastian sagarrak jakintzaz hautatu
kizkiaz jasota otarrean batu,
dolarean zanpatu patsa bereizteko,
muztioa upan hartzitzeko gero,
sagardoa kultura eta jai giroa
edari gozoak bizigura dakar,
osasuna zen euskal marinelentzat,
egun harremanak aberasten ditu,
gazta, intxaur, txuleta... bakailo tortilaz
irria isurtzen duen iturria.

2

Sagardo txotx eginez bustitzen gaituzu,
osoro sorgintzen zure txinpartekin,
nahiz aspaldi zu zinen galzorian egon
herriak kantari suspertu zintuen.
Egarritu garenez ondo asetzeko
sagardotegian gogoz sartu gara,
bertsolari zaharren eskola izan zen,
orain euskararen aterpe kutuna,
"hau da geure sagardo berria" esanez
sagardogileek agurtu gaituzte.

*2017ko urriaren 8an*

*667*
**(1871ko martxoaren 18tik 27ra)**
**Pariseko komunari**

1
Noizko gerezien sasoi gorria?
Noiz itzuliko da pilpira hura?
Gereziondoan elkartu gara
zentzuz zaintzen dugu ez dadin ihar.
Bere abaroan eserita gaude
utopiaz luze hitz egiteko,
esperantzak oro geriza gaitzan,
munduan ametsak gauza ditzagun.
Bedatsean mardul loratu dira
zelai hau delako txit emankorra,
adarretan ditu haize leunak
dantzatzen ipini ale gorrixkak.
Saskiak mukuru daramatzagu
herriak xedeak elika ditzan,
laket zaigulako konpartitzea
mamiak ditugu plazan dastatu.

2

Hemeretzigarren mendean zuten
Parisen komuna kemenez sortu,
nahiz denbora gutxi iraungo zuen
bizirik diraute taupada haiek.
Gerezien sasoi osasuntsua
ustelduko zuen bortizkeriak,
Parisen ez zedin hozi hazia
klase mailak sendo manten zitezen.
Oinez hasi gara Euskal Herrian
askatasuna da gure helmuga,
berdintasunaz ta feminismoaz
bermatuko dugu ongizatea.
Kapitalismoa gaindu dezagun
iraultzaile haiek ohoratzeko,
gerezi gorrien sasoia dator
elkartasunaren xarma dario.

*2017ko urriaren 8an*

*668*
## Joxean Lasa eta Joxi Zabala zirenei

1
Joxi eta Joxean
gogoan zaudete,
zuekin sentierak
bor-bor ziren bete,
Ekik eta Ilargik
zaintzen zaituztete,
beste minak lez gure
bizitza zarete.



2
Tolosan zuen alde
tink ziren altxatu,
Karnabak urri hartan [1*]
isilik geratu,
bihotzak zitzaizkigun
berriaz urratu,
geroztik zaituztegu
baitan ferekatu.

[1*] *1983. urtean.*

3
Zuen adina nuen
zenean gertatu,
bahiketak gintuen
gogor asaldatu,
gorpuzkinekin gero
ginen ikaratu,
gertaera genuen
negarrez salatu.

4
Gobernuak makurra (2*)
zeukan izaera,
mendekuaz etorri
zen zuen galera,
kartelekin genuen
azaldu afera,
poliziak zebiltzan
GALekin batera.

(2*) *Felipe Gonzalezen gobernua.*

5
La Cumbre egoitza zen
izuen gailurra,
bertan jasan zenuten
torturaren zurra,
Rodriguez Galindo da
ankerren ikurra,
amorruz diot zuen
irrien lapurra.

6
Ertzainek zintuzteten
zakar hobiratu,
“X” jaun terroristak
beste mespretxatu,
eskerrak zeniguten
kemena ziztatu,
horrela dugu gaurko
bidea obratu.

7
Tolosatik zarete
hegan abiatzen,
Uzturren zein Ernion
gustura pausatzen,
dakusazue herri
duina oneratzen,
mailaka ari dela
kateak puskatzen.

8
Goiz-argian ziegan naiz
zuekin esnatu,
akorduan zarete
atzo lez loratu,
itxi nindutenetik
sarri gara batu,
gaur bertsotan ditugu
desirak kantatu.

*2017ko urriaren 15ean*

(1*) *1983. urtean.*
(2*) *Felipe Gonzalezen gobernua.*

*669*

**(Rosario, 1928 - Higeras, 1967.10.09)**
**Ernesto Che Guevara zenari**

1

Gizaki berria jaio dadila
jendarte berria gauzatu dadin,
barruan ametsik gorriena da,
xede bikain eta utopikoa.
Chek, Morek... horretaz maiz hitz zegiten,
Platonen Grezian filosofatzen,
tamalez munduak gaixorik darrai
agintean jauna bortxa delako.
Gizakiak gara txarrak ta onak,
eraikitzaileak, suntsitzaileak...
net gaiztotzen gaitu egoismoak,
zintzotzen, ostera, elkartasunak.
Estatuak beti oreka hausten,
edozein ondasun zeken xahutzen,
kapitalismoak gidatzen ditu
uste dute dena dela eurena.

2

Gizaki libreak izan gaitezen
menpekotasunak haiza ditzagun,
izadiak dezan iraun oparo,
jendartean dadin lora onura.
Jentilen asmoa hori omen zen,
geure helburua izan dadila,
pobrezia non-nahi gaindi dezagun
herriak bakean bizi daitezen.
Utopia ez da ilusio bat
baizik kontzientzia eta praktika,
zentzuz murriztea kontsumismoa,
auzolan jatorra barreiatzea.
Berrogeita hamar urte joan dira
Chek egun agian esango luke:
"iraultza morea ehun dezagun,
herrien arteko anaitasuna".

*2017ko urriaren 15ean*

*670*

**Hainbat burutazio**

1

Ekaitza galdu denez, ekia
zeru itzelaren jabe,
zoru latzean espea dago
oldozten hesirik gabe,
ametsetan da trebe hegatzen
enarak bezain lokabe,
Euskal Herria pil-pil delako
hamaika taupotsen labe.



2

Tamalez zeru garbi argia
iluntzen den egunetan,
abagunea txarto dakusa
jositako hausnarketan,
ohean lortzen du garaitzea
tristura goiztirietan,
joan zirenekin berba egiten
duelako arratsetan.

3
Hormen gainean jarri zituzten
gorrotoaren txarrantxak,
ziega barrutik ozen dantzuzki
espetxezainen azantzak,
noizbait zituen hustu, ordea,
okerrak ziren zalantzak,
ariman sakon dituelako
errotuta esperantzak.

4
Herritik urrun zapirehun hil
daramatza ezlekuan,
euskara mina ez zaio ito
diglosiaren putzuan,
laztana beti diz-diz dakusa
desioen eremuan,
bertsoa kantuz eskaintzen dio
egin eta segituan.

5
Kartzelan dago muga zelako
konponketa obratzea,
benetan horren alde merezi
zuelako saiatzea,
bere bizitza izan delako
aberria maitatzea,
estatu horiek ezarritako
atakatik askatzea.

6

Ezagutzen du gertatzen dena
anitza den jendartean,
herritarrek ez dute kemena
laga sasien artean,
"bedatsea da piztuko" dio,
"idealak ereitean",
"liliak mardul haziko dira
urte gogorren ostean".

7
“Egun handia badator” dio,
“herriaren pizkundea”,
“poliki bada ere gainditzen
ari gara uholdea”,
betidanik du sendoki izan
hurkoekiko fedea,
gaur iraultzeko gatazka dute
batera hartu goldea.

8
Kideak ari dira edonon
bizinahiaz ekinean,
Sare, Etxerat, Bagoaz... beste
musu-truk aldamenean,
“kartzelaldia maratoi bat da”,
dio bisiten gunean,
“zorionez ez nago bakarrik
traineruan arraunean”.

*2017ko urriaren 22an*

*671*
**Jaiki Hadiri esker onez**

1
“Sekula ez zarete ibiliko bakarrik”,
gorriei Anfield.en abesten diete,
zuk, ostera, aldiro adoretu gaitezen
diñoskuzu, “alboan egongo naiz beti”,
Jaiki Hadi nahiz ezin zaren egon gurekin
dantzuzkigu hur zure ele atseginak.
Espetxean ez dago bizitzerik luzaro
zaudenean gaixorik edo etsiturik,
psikologo, mediku, psikiatra... xaloak
osasuna zarete zoko zornatsuan.

2

Esperantza maiz zaigu ezlekuan itzaltzen,
bizinahia murrizten bengantzaren zolan,
horregatik diogu egunsenti garbian,
“bidegabekeria gaindituko dugu”,
sentieran taupaka zaudelako gurekin
maitasunak larrua ferekatzen digu.
Jaiki Hadi iluna argitzen diguzu
zeuri esker ez gaude bakarrik bidean,
geure alde musu-truk zarelako jarduten
ninietan zoria isladatzen zaigu.

*2017ko urriaren 22an*

*672*

**Ustez nazionalistak ez diren nazionalistei**

1

“Espainia hautsita baino hobe gorria”,
aspaldian eskuindar harek esan zuen,
“Nazioa batuta beste ezer gainetik”,
dio orain ustezko sozialista batek,
Horixe ohi diote mundutarrak direnak
arbuiatzen dutenek nazionalismoa,
frantziarrak lez dira espainolak bakarrik,
 herriñoen hizkuntzak itotzen dituzte.

2
Nazionalismoari, “Ez”, diote faltsuek
sutsuenak ohi dira jai nazionaletan,
Parisekin daukate hartu-eman estua
ukatzeko bortizki herrien desirak.
Bretainia, Korsika, Catalunya... eta gu,
Europako herriak eurak beste gara,
izateko ditugu eskumenak eskatzen,
izarrak pitz daitezen, inperioak hil.

*2017ko urriaren 22an*

*673*

**Miltantzia, bilerak, sendia...**

1

Batzordean sarritan
gara lar nekatzen,
denbora kudeatzen
ez dugu asmatzen,
jarduna has gaitezen
egoki eratzen,
batzarra ez dadin joan
alferrik luzatzen.

2

Kide xaloak hobe
dezagun batzarra,
oro eskura dezan
lehengo indarra,
erabakiek izan
dezaten giharra,
onura izan dadin
helburu bakarra.

3
Dena ematen ari
zara herriari,
lagata soilik hondar
batzuk etxeari,
arreta nahi diozu
eskaini haurrari,
zeure beharra duen
laztan maiteari.

4
Egun guztia duzu
eman bileretan,
hola ezer gutxi zer
daiteke plazetan,
arimekin has zaitez
hartu-emanetan,
bedatsea pitz dadin
gaurko lupetzetan.

5
Borrokaren arloan
oreka bilatu,
gaur arrazoirik gabe
zara ernegatu,
batzarretan beharko
genuke gozatu,
zuk eta guk dezagun
herria libratu.

6
Kide minentzat izan
zaitez eredua,
herriari dakion
ailega ordua,
auzolanean ipin
ezazu itua,
batera gain dezagun
gatazka estua.

7
Militatu pertsona
bezala ontzeko,
jendeen arazoak
zuzen konpontzeko
goiztirian ohean
lasai agontzeko,
eguneroko martxa
zehatz atontzeko.

8
Herkide izan zaitez
bileretan duina,
etxekoekin eta
lagunekin fina,
politikan ezazu
lora krabelina,
zabaldu dadin zeure
ideien lurrina.

*2017ko urriaren 29an*

*674*

## Erresiñola lez libre biziko gara

1

Catalunya gogorki mintzen ari dira
bere desioak ihartu daitezen,
tamalez guk horretaz gehiegi dakigu
giltzak eman ordez jo gaituztelako.
Espainiak ez du nahi erein konponketa
baizik etsai-lege krudela ezarri,
sekula ez dezagun ezagut bakea
proposamen onak txikitzen dizkigu.
Estatuak maizko du isiotzen sutautsa,
gaizkileak kiskal gaitezen darabil,
trokan ginen aspaldi zintzilik geratu
erabakizuna kendu zigulako.
Katalanak adina nazkatuta gaude
monarken hizkuntza darabilelako,
mendekua delako herraren pozoia
adorearekin drama gain dezagun.

2
Lurraldea sakonki maite dugulako
ez gara zekenen segadan jausiko,
lubakiak tapatzen jarraitu ditzagun,
katalanen eran borroka gaitezen.
Geurean ez dugu nahi hesi zein murrurik
herrien arteko harremana baino,
nahiz jasoko ditugun muturreko asko
geure bedatsean loratuko gara.
Paris eta Madrilgo gobernu horiei
ekinez zentzua sustrai diezaiegun,
ezpatari herriak garaitu diezaion,
irriak maltzurren musu muzinari.
Hiru gehi bat gehi hiru denez berdin zazpi
guk Euskal Bidean aurrera darraigu,
batasuna zelako Monzonen ametsa
erresiñola lez esnatuko gara.

*2017ko urriaren 27an*

*675*

**Beñat Arrue Gurrutxaga zenaren gurasoei eta Suku Mayari**

1
Suku, Beñatekin zara
agertzen argazkian,
Thamon edozein ume lez
bizi zinen lorian,
Pumori mendira gogoz
joan zen gero abian,
lau lagunekin hil baitzen
ausa baten azpian.

2
Suku jazo zitzaizuna
saminez dut leitu,
zure giltzurrunak ziren
zoritxarrez eritu,
Arantxa ta Pellok zutaz
zirelako hunkitu,
Aizarnan itxaropena
oro zaizu lilitu.

3
Lur jota denbora asko
egon zara laztana,
beharrez laga zenuen
etxekoen harana,
zure adorea izan
ez delako afana,
oraina bihurtu zaizu
lehen lez baba jana.

4
Beñaten gurasoekin
ederto bizi zara,
amets eztiak, ordea,
doaz Himalayara,
Thamora zu joango zaren
datan poztuko gara,
beti jingo zarelako
ekiaz Aizarnara.

5
Sentitzen duzu Beñaten
gurasoen epela,
euren elkartasuna da
Ernio lez itzela,
horri esker ziur zaude
osatuko zarela,
noizbait onik iritsiko
hegatzen Nepalera.

6

Beñat zena orain baita
ortuko astigarra,
beha zaudenean duzu
sumatzen bere garra,
nahiz Namche Bazarkoa den
familia bakarra,
Aizarnakoa zuretzat
dir-dir da ostadarra.

7
Zeuretzat Beñat zenaren
euskara da irria,
bere guraso jatorren
goizeroko zirria,
“gure Nepal adina dut
maite Euskal Herria”,
esan duzu laztanduta
zuhaitzari gerria.

8
Suku, ezagutu duzu
Zumaian itsasoa,
gaur diozu dastatuta
kresalaren gozoa,
“Beñat bizitza oraintxe
derizt txit oparoa,
horrelakoa da zure
hostoen abaroa”.

*2017ko azaroaren 5ean*

*676*

**Urriak 1 bizi izan nuelako:
Jose Antonio eta Lluisi**

1

Lluis Llachen gitarra berriro dantzugu
“L’estaca” kantatzen grinaz ari gara,
artistak faxistak salatu nahi ditu,
estatu makurren inposizioak.
Gudarostea da inperioarena
herriñoen arma elkartasun ona,
euskaldunok maitez erabil dezagun
katalanek senti ditzaten ferekak.
Helmuga zuzena demokrazia da,
erreferenduna zoru egokia,
estelada dabil bihotzak hunkitzen
Rajoyk ikus ditzan botoen distirak.
Errepublikaren hazia ereinda
erauzi gogoan monarkia berba,
erresiñola has dadila hegatzen
mezua txioka xaloki hedatzen.

2

Companys, Agirrek zioen bezala
gu beti zuekin, Catalunyarekin,
Jose Antonio eta Lluis zintzoak
independentzia zuen xedea zen
Katalanek dute goratu burua,
kaleak mukuru oinez hasi dira,
"Els segadors"-ekin eguzkia dir-dir
hautestontziei izpiak eskainiz.
Poliziak datoz harrapariak lez
herriaren nahiak irensteko asmoz
bertako jendea tematsua denez
aurre egin die Krabelin gorriaz.
Companys, Agirre... gaur batu zarete,
geure sentieran adorez esnatu,
katalanez eta euskaraz diogu
"zuekin Eus ta Cat zelaiak loretan".

*2017ko azaroaren 5an*

*677*
**Henry David Thaurauri. Desobeditzaileei**

1
Thauraurekin, Ghandi, King...
ziren engaiatu,
Rosa Parksek adorez
zuen praktikatu,
ez obedituz bortxa
zuten baldintzatu,
molde horiekin gara
gu kontzientziatu.

2
Lukia lez izango
gara matxinoak,
gaintzeko estatuen
inposizioak,
hori zegien atzo
gaztedi xaloak
hori egin dezala
plazetan gaurkoak.

3
Lukia txakurraren
kontrara ari da,
inoiz ez dio egin
men gizakiari,
nahiz maiz kalte degion
baserritarrari,
ez egotzi errua
bere naturari.

4
Baserritarrak jaso
dezala ordaina,
piztiak egindako
gaitzaren adina,
men ez dagienari
eman krabelina,
lurrun dakion hola
zigorren samina.

5
Boterea delako
zurrun endrokatzen,
herriak dira bere
kontra borrokatzen,
desobedientziak du
gaizkia geratzen,
ausardiaz jardunda
ongia loratzen.

6

Ekintzaileak izan
gaitezen geurean,
xedera iristeko
manera barean,
elkartasunak gaitzan
har bere sarean,
ez-demokratak bota
ditzagun airean.

7
Desobedientziak tak
gaitu hobetuko,
desioak ditugu
oro asetuko,
bakea zuzen dugu
hola obratuko,
aberri zatitua
txukun osatuko.

8
Etxegabetzeak maiz
ditugu trabatu
presoen alde tinko
gara kateatu,
gazteek soldadutza
zuten deuseztatu,
horrela gura dugu
herria libratu.

*2017ko azaroaren 12an*

*678*
**Musekin zatoztenean**

1
Gaur iratzarri naiz irribarretsu
egunsentia ospatzeko,
bertsoak kantatzen hasi orduko
pentsamendua bizitu zait,
nik zuentzat ditut maiz izkiriatzen
taupadek pil-pil diostena.
Hormari begira ari natzaio

burdin saretik ohi dudan lez
hori dagit musak datozenean
kitzika nadin muga barik,
eskertzeko zuen elkartasuna
mahaian grinaz jarriko naiz.
Nire lagun minak zaretelako
zuen epela dastatzen dut,
akorduan zinez zaudetelako
hizkiak zehatz josten ditut,
naro jariatuta sendimendua,
“maite zaituztet” diotsuet.

2

Eguna oskarbi piztu delako
gertu dantuzkit txolarreak,
txantxarretan ohi lez urduri daude
papurren zain ta geuri beha,
hau da ikuskizun eder bakarra
irudimena bazkatzeko.
Desira osoro zoratzen nauzu
dakarkidazu etorria,
musekin batera etortzen zara
olerkietan pausatzeko,
zeureak direnez nire ametsak
etzaten gara Parnasoan.
Zurekin laztana horma lurtzen da
soilik dakusat zoriona,
lurraldean gara libre biziko
sorkuntzetan lez sorginduta,
asetuko dugu gaurko gosea
poeten uztak deklamatuz.

*2017ko azaroaren 12an*

*679*

***Araba Garoñarik Gabe* taldekoei**

1
Zentral nuklearren planak
genituen hondatu,
Ispaster, Deba, Tutera...
borrokatuz salbatu,
Lemoizkoak bestalde
kostata oztopatu,
tamalez luzaro gaitu
Garoñak mehatxatu.



2
Garoñako lurrak daude
Euskal Herritik gertu,
Francoren zentralak zuen
ingurua ugertu,
harrezkero esan dugu
ez dadila lehertu,
zorionez ziplo zaigu
dardara desagertu.

3
Araban ongi duzue
bizitza defendatu,
Ebro zuei buruz da
esker onez mintzatu,
Burebak ostera zuen
Garoña goraipatu
tronpatuta ona zela
bertan zuten pentsatu.

4
“Nuklearrik? Ez, eskerrik
asko”, zen aldarria,
Lemoizko bien kontra
gure txapa larria,
bandera gisa da ere
txit erakargarria,
beregaz itxi duzue
mamu beldurgarria.

5.
Arabak irailean du
garaipena ospatu,
zentral gaitza dutelako
Garoñan amatatu,
kemenez zinetelako
aspaldi engaiatu,
herritarrek zaituztete
Gasteizen besarkatu.

6

Gladys Del Estal zena dut
ñir-ñir irudikatu,
ziur duela zuekin
topa klik partekatu,
energia nuklearra
zuzen zuen ukatu,
erail zuten arte grinaz
Ama-Lur ferekatu.

7
Herri honek du arrisku
nuklearra gainditu
ea orain kutsadura
dezakegun garbitu,
izadia ez dezagun
behin betiko txikitu
kontsumismoa beharko
dugu zentzuz urritu.

8
Lemoiz zure birekin
genuen lar sufritu,
Garoña zuk maiz diguzu
bihotza erdibitu,
horien erruz hil zirenak
gaur ditugu oroitu,
ihintzak basitu ditu
eguzkiak eztitu.

*2017ko azaroaren 19an*

*680*

**Gladys-Enean bizi den**
**Gladys del Estal zenari**

1

Donostian dir-dir oasi txukun bat
Egia auzoak bere baitan dauka,
esparru ederra Gladys Enea da,
beste batzuentzat Kristina-Enea.
Gladys erail zuten ekologista zen,
Maria Cristina, berriz, erregina,
hiriak izena bozkatu dezala
ez dadila tronpa errepublikarra.
Baratze apaina txorien habia
barrenean zara egongo zorian,
kulturak duenez sarri baliatzen
arimak gozoro pilpiratzen dira.
Gladysek txokoa zuen bisitatzen
bizitzaren xarma naroro dastatzen,
zentral nuklearren kontra mugitu zen
Lemoizkoak ez zitzaten jar martxan.

2

Ebro ekainean ez dator gainezka
Tuteran ekiak luze-luze dirau,
garai bikainean bizinahiz beterik
Gladys lagunekin bertara joan baitzen.
“Natori ez!”, esan zuen Erriberan,
berdin “Nuklearrik? Ez, eskerrik asko”,
zubian jarrita lasaiki zegoen
Guardia Zibila oldartu zenean,
Egia maitera gorpu itzuli zen
ankerrak buruan tiro egin zion,
sentiera ziplo goibeldu zitzaigun
maiteki omenduz agurtu genuen.
Lemoiz itxita ez ikusi arren
geure ametsetan ospatu zenuen,
parkean zurekin batzen garenean
zeure irriñoa Ama-Lurrena da.

*2017ko azaroaren 19an*

*681*

**Eibarren behar barik daudenei**

1
Eibarren lehen beti
zegoen beharra,
orain dirudi dela
sikatu zuztarra,
industriak galdu du
atzoko indarra,
ez dakigula bihur

altxorra legarra.

2
Armeria Eskolan
zenuen ikasi,
hola zu erraz zinen
beharrean hasi,
krisiaz dena zaizu
iruditzen sasi...,
xede asko dizkizu
zapla gerarazi.

3
Beste batzuk dauden lez
zu zaude langabe,
udan geratu zinen
aterperik gabe,
orain sentitzen duzu
burua herabe,
zure errua ez den
lotsaren mirabe.

4
INEM eta Lanbiden
zenbaki bat zara,
“zaharra” zarelako
orbelen dardara,
hilero kezkaz duzu
osatzen ilara,
etsipenarena da
zuk daukazun kara.

5.
Zuk maiz pentsatzen duzu,
“ni naiz hobenduna”,
“beharrik gabe gaua
bezainbat iluna”,
hola erkintzen ari
zaizu osasuna,
ohar zaitez zurekin
gaudela laguna.

6

Langabeen taldeaz
zara engaiatu,
“kapitala”, diozu
“dezagun sakatu”,
jende jatorrarekin
zarelako batu
zuk duintasuna duzu
berriro dastatu.

7
Elkartasuna bikain
duzue zeratu,
zuen eragina da
hola oneratu,
pertsona gisa zara
ederki garatu,
joan zitzaizun irria
zaizu bistaratu.

8
Langabezia denez
goikoen miztoa
ez dadila isildu
behargin zintzoa
orainean ongarri
dezagun geroa,
ongizatea lora
dakigun trinkoa,

*2017ko azaroaren 26an*

*682*
## Gure euskal preso politiko gaixoei

1
Aizue barruan gaixorik daudenak
ari dira zigor bikoitza pagatzen,
gorrotoak dauzka estresaren mende,
eskubide barik sumina pairatzen,
“damutu zaitezte”, maizko diotsete
mendekuak ditu txanpon truk tratatzen.
“Galtzaile-garaile”, mantra hobetsita
zuzentza diete erabat ukatzen,
etsai-legearen zolan daudelako
osasuna zaie gehiago hondatzen,
atzo legez orain jarrraitu dezagun
plazetan laztandu arte borrokatzen.

2

Aizue Rajoy ta Macronek diete
bare biziteko desira zanpatzen,
preso gaixo minek aldiro dituzte
gizatasunaren fruituak eskatzen,
espetxeak die bizigura histen
itxaropenaren garra amatatzen.
Elkartasunean kulunkatzen dira,
samurtasunean naro elikatzen,
estatuen bortxa non-nahi salatuta
kemena xaloki diegu opatzen,
eurak askatzea lortuko bagenu
denok ginateke hasiko askatzen.

*2017ko azaroaren 26an*

*683*

## Olinpoan sartu arte herrien jokoak

1

Ator gorri, berde, zuriaz lehiatzen
gure lurraldea munduan ordezten,
tamalez bati lez gu gutxietsita
bi inperioek ezetz dioskute,
gazteek nahitaez horien koloreak
soinean edonon beztitzen dituzte.
Sasoirik onena baliatzen dute
Paris ta Madrilgo fama hauspotzeko,
hobena ez baita eurena, ordea,
baizik politiko belaxka horiena,
sekula ez dute adorerik izan
abian jartzeko desira zuzenak.

2

Komitearentzat ez garenez ezer
Olinpoan borta itxita daukagu,
hortik at gaudenok eratu ditzagun
bihar edo etzi herrien jokoak,
hartu-emana jos dezagun trebeki
kirolak bat gaitzan grina txarrik gabe.
Munduari ozen esango diogu
herrienak direla ere olinpiadak,
ez diezagutela arima goibeldu,
izateko dugun eskubidea motz,
bitartean gazte duinak lehiaketan
euskaldun moduan porta daitezela.

*2017ko azaroaren 26an*

*684*

**Azken txanpan orain lez zurekin**

1
Udaberri betea
amets gardenean,
enarak hegaldatzen
sabai urdinean,
ekiaren printzekin
libre porlanean,
sentiera biziro
gomuten unean.



2
Urte asko daramat
preso erbestean,
Ama-Lur geratu zen
murruen ostean,
ilbeteek sorgindu
naute bitartean,
laztanak ta zirriak
zain dauzkat atean.

3

Hogeigarren maiatza
bengantzan onena,
helduko da desirak
zertzeko orena,
kartzela kide barik
uztea lehena,
maiteaz bizitzea
gozo bigarrena.

4

Udaberrian daude
begiak loretan,
marrubizko kilikak
zeure ezpainetan,
horri esker barruan
etxarte grisetan,
esperantza naroki
darabilt hizketan.

5
Azken txanpan sartu naiz
erabat lasaiki,
kalean zurekin naiz
batuko alaiki,
demokrazia ia
dugunez eraiki,
geroa barru barik
izango da baiki.

6

Udaberrian daude
mardulik liliak,
urrez janzten dituzte
gure belardiak,
barruan ohoratzen
ditut goiztiriak
igaro genituen
momentu eztiak.

7
Nahiz barruan nagoen
puzten zait bularra,
bizinahiak baitan dit
suspertzen txingarra,
zu ñir-ñir zara nire
ortziko izarra,
zoriona opatzen
didan ostadarra.

8
Udaberria ziegan
ezin dut dastatu,
zurekin gura nuke
berriro maitatu,
nire pilpira dizut
bertsotan kantatu,
"maite zaitu", nektarra
zirraraz ziztatu.

*2017ko abenduaren 2an*

*685*

**(2016.01.19)**

**Aterpe gabeak luzaro bizi daitezen**

1

Donostian danbor burrunbak entzuten
aterpe gabeko andre bat hil da,
banku boteretsu baten bebarruan
goiztirian gorpu topatu dute,
neguan kalean nahitaez hotz dagi
ezin duzunean behar beste jan,
piltzarrez bakarrik janzten zarenean,
osasunak laga zaituenean.
Errua nork dauka? Galde dezakegu,
ez itxoin alferrik ihardespena,
egoismoak du hobena, ordea,
ez ditugulako kontuan hartzen,
gu axolagabe portatzen garenez
sorgor dizkiegu osten taupadak,
gure pobrezia gaindu bezain azkar
jorituko zaigu ongizatea.

2

Kalean hor nonbait lotan dagoenak
jendartea klarki seinalatzen du,
ez gara gai kinka zuzen konpontzeko,
hobetzeko lagun horien patua,
gure enpatia ereingo bagenu
ganoraz biziko ziratekeen,
sasidi sarrian uzkur dakuskigu,
itxaropen barik Herioren zain.
Gu legez negarrez jaio zirelako
amaren zirriak leun jasota,
eskain diezaiegun alternatiba bat
sumatu dezaten samurtasuna,
elkartasunean adore daitezke
ardurak gogotsu konpartitzeko,
auzolanak oro askatuko ditu,
atsegina die ihinztatuko.

*2017ko abenduaren 2an*

*686*

**Prostitutak erabaki dezala ze izan nahi duen**

1

Karriketako prostitutak lar zaurgarriak ei dira
migratzaileak, txiroak, ezjakinak... gehienak,
eskubiderik gabe daude hainbat mafien mendean,
horrela nekez sumatu dezakete bizitza.
Matxismo horri ez diogu ganoraz gogor egiten,
guk degiogu dramari ezikusiarena,
nahiz diotenez lanbidea zaharrena den munduan
ez da zilegi inortxo behartzea hortara.

2

Besteen sexu gabeziak asetu behar dituzte,
holaxe arras diete gaztaroa lapurtzen,
hor nonbait jaio zirelako patriarkatu batean,
gorputza zaie bihurtu bezeroen jolasa.
Feminismoak atakatik onik atera ditzake,
euren buruen jabeak, behingoz, izan daitezen,
libre aukera dezatela bihar ze izan nahi duten,
andrazko hauek orduan laket dira biziko.

*2017ko abenduaren 2an*

*687*
**Afrikako umeak**

1
Afrikan sortu nintzen
nekez bizitzeko,
neska izatearen
zama sentitzeko,
hainbat jaun berekoien
bortxa nozitzeko,
pobreziaren mende
sarri larritzeko.



2
Erraz jaiotzen gara
gero mendratzeko,
medizinaz lar urri
laster sikatzeko,
laguntza galdegiten
dugu salbatzeko,
heziketari esker
nahiak gauzatzeko.

3
Amak diost, “Afrika
dago zanpatuta”,
kanpoko kapitalak
gauzka hertsatuta,
lur onenak lagatzen
ditu agortuta,
meak eta basoak
zekenki hustuta.

4
Hiltzen direla dantzut
ni lako umeak,
hemen ez duelako
lekurik bakeak,
errua dioskute
duela goseak,
gaixotasun arrunta
edo gerrateak.

5
Amak diost “ez gara
beregaz bilduko”.
“aitxa minak ez zaitu
berriz laztanduko”,
“agian itsasoak
zuen ostenduko,
Europako txarrantxek
zioten helduko”.

6
Europara joatea
dugu desiratzen,
kinka larriak gaitu
erabat nekatzen,
baina egoten gara
zirraraz pentsatzen,
Afrika garelako
dugula maitatzen.

7
Amatxok babesten nau
etxe zaurituan,
lan dagi urrun eta
aitxaren ortuan,
hemen ez gaudelako
matxisten ituan,
atseginez dagigu
gauero kantuan.

8
Kongo, Mali, Ruanda...
ditzagun eztitu,
auzolanean soro
emankorrak blaitu,
Afrikak eman ditzan
behar beste fruitu,
ni moduko umeak
daitezen loditu.

*2017ko abenduaren 10ean*

*688*

**Enpatia estresa uxatzeko**

1

Igeldon dagoen “Mendi suitzarra” lez
nerbioak dauzkat gora eta behera,
nahiz ez dudan hartzen anfetaminarik
maiz dirudi euren mende nagoela.
Sumendia baitan lehertzen denean
burmuinean zaizkit neuronak zoratzen,
hurkoen esanak entzun beharrean
garrasika ziplo aztoratzen ditut.

2

Antsietateak dit sosegua kentzen,
estresak zin-zinez burua kaltetzen,
lasaiki arnasten ikasiko banu
kideen bizitza hobetuko nuke.
Kartzelan giroa ez dezadan zatar
nortasun basa naiz bezatzen hasiko,
sutsuak iraultza mintzen duelako,
enpatia oro delako gorria.

*2017ko abenduaren 10ean*

*689*
**Sexualitateaz**

1
Aspaldian amesten kontzientziak diosta
“sexualitatea libratu ezazu”,
“hartu-eman sexualak dotore jos itzazu
berdintasunean oinarri daitezen”.
Aniztasun sexuala tinko babes dezagun
mendetasunezko praktikak haizatuz,
bikoteek plazera hobesten dutenez
aurreiritziak lurpera ditzagun.

2

Munduaren motorra diote ei direla
sexualitatea ta ekonomia,
ez dadila sexua bortxa izan, ordea,
baizik grinen gune demokratikoa.
Matxistak gal ditzala abantaila makurrak,
heterosexualak fobia faxistak,
feminismo moreaz patriarkak bezatuz
maitasunak gaitu osoki aseko.

*2017ko abenduaren 10ean*

*690*

**Martxoaren 8a bihar jai eguna izango da**

1

Martxoaren zortzia pilpiren eguna,
berdintasun morea sakon sustrai dadin,
andrazkoen borroka versus patriarkak,
feministen kemena ondratzeko data
Helburua matxistak birziklatzea da,
eraistea betiko euren egiturak,
emakume moratzak hegalda daitezen
sekula ez ditzaten gutxiets lanean.

2

Emakume ta gizon solidarioak
bizitzeko zorian Ama-Lur jorian,
atseginez gozatuz sexualitatea
nork nahi duen maneran mendetasun barik.
Boteretik joan dadin matxismo antzua,
jaunen bortxa munduan, behingoz, erauzteko,
feminismo zintzoak senak blai ditzala,
martxoaren zortziak gidatu gaitzala.

*2017ko abenduaren 10ean*

*691*
**(2016.07.07)**
**Samaldak lorea belaxkatu zuen**

1
Bost kriminal harroputzak
joan ziren Iruñera,
euren irrits zikinari
bidea ematera,
samalda non-nahi zirenez
basaki ehizatzera,
sanferminak lapurrak lez
jator ez ospatzera.

2
Irten aurretik zer egin
bostek zuten pentsatu,
zakilak gura zituzten
bortizki kitzikatu,
gaztetxoa zutelako
bidegabe zanpatu,
jendetza zen Gazteluko
plazan haserre batu.

3
Samaldak neskatxa zuen
gauminean bortxatu,
balentria hedatzeko
atartean filmatu,
bostek errukirik gabe
baitzuten belaxkatu,
bizigura loreari
zioten lurperatu.

4
Bilaukeria diete
orain zorrotz epaitu,
Iruñeko udalak du
zigorra exigitu,
gazteak berriro digu
tragedia oroitu,
bihotzak orduan beste
dar-dar ditu hunkitu.

5
Matxistaren boterea
ohi da bortizkeria,
bortxaketa biihozgabe
hutsen ankerkeria,
jendarteak hola darrai
atzo legez eria,
feminismoaz dezagun
hustu idorreria.

6

Matxismo latza dezagun
bota zakarretara,
ez dadila samaldarik
jin sanferminetara,
beldurrik gabe gaitezen
irten karriketara,
jende xaloak erakar
ditzagun jaietara.

7
Alkoholak batzuk ditu
samalda bilakatzen,
eskua sartzen gaupasak
dituzte hondoratzen,
ea ebazpenak dien
arima eraldatzen,
ikas dezatela andrak
bortxa barik tratatzen.

8
Ar batzuek andrazkoak
minduz dute gozatzen,
sentituz nola dituzten
indarrez menderatzen,
ustezko gizaki horiek
gaituztenez sakatzen,
hasi gara bat eginda
samaldak deuseztatzen.

*2017ko abenduaren 17an*

*692*

**(Lazkao, 1957.12.23 - Donostia, 2017.11.16)**
**Belen Gonzalez Peñalva zenari**

1

Ingumen maitale, andrazko morea,
militante fina hamaika urtetan,
Ama-Lurren baitan aterpetu zara
eredu zuzena naroro ereinda,
une mingarrian triste gauden arren
zurekin bizitzen alaituko gara.
Alternatiba bat amesten zenuen
zinezko bakeaz bortxa gainditzeko,
engaiatu zinen hitza lora zedin
geurean genezan dena erabaki,
oraintxe negarra eskaintzen dizugu,
bihar zertutako xedeen lurrina.
Borroka larrutik ordaindu zenuen,
errepresioak zigortu zintuen,
ohi legez zu zinen adorez hegatu
deportazioan, kartzelan, erian...,
habian zuretzat josten ari gara
eskegiko dugun ikurri askea.

2

Belentxu joan zara berriz itzultzeko
suspertu gaituzu zure pilpirekin,
sentieretan ta bihotzetan zaude
jendartea ontzen jarraitu dezagun,
gogoan zaitugu noiznahi oroituko
sekula ez dadin gal zure izana.
Sorlekutik printzak bidaltzen dituzu
kontzientziak dir-dir argizta daitezen,
munduan onura ta ongizatea
solidaritatez sendotu ditzagun,
mihiek euskara fereka dezaten,
askatasunera kantuz hel gaitezen.
Mendien artean zu Txindoki zinen,
lilien artean krabelin gorria,
zuhaitzen artean jentilen haritza,
erreken artean laminen gardena,
orain zara ere Lazkao maitea,
Euskal Herriaren alaba zintzoa.

*2017ko abenduaren 17an*

*693*

**Eulia mintzatzen denean**

1
Euliak dakuskigu
egun luzeetan,
ez ikusteko gero
egun laburretan,
nahiz sakatuz dituzten
hiltzen batzuetan,
atseden hartzen dute
ziegen zokoetan.



2
Hego gardenak eta
toraxa iluna,
sei hanka ditu eta
itxura txukuna,
nahiz uste dugun dela
eulia ilauna,
begi gorriz dakusa
espetxe aizuna.

3
Eguraldi beroak
datoz euliekin,
garai horretan dira
astunak denekin,
kilika degigute
larruan tronpekin,
tematzen direlako
izerdiarekin.

4
Euliaren firrinda
ez da gogokoa,
gauaz ez du, ordea,
galarazten loa,
egun-argiz izaten
baita aktiboa,
asetzeko hegatzen
ziegaz-ziega doa.

5
Euliak xurgatzen du
zigorraren kraka,
hola gozatzen digu
hemengo ataka,
geure alde aritzen
ohi denez kalaka,
ederki hazten zaigu
desiren aldaka.

6
Euli beltza etorri
zait adierazteko,
udan sartu garela
lasai arnasteko,
goitik esan dit ere
goiari eusteko,
gutxi gelditzen dela
motxila husteko.

7
Eskerrak eman behar
dizkizut eulia,
zeure mezua izan
delako arraia,
arren, saihets ezazu
amaraun sarria,
ez diezazun marasmak
ziztatu pozoia,

8
Zeure hegoak behar
ditut goratzeko,
herriko enparantzan
leun pausatzeko,
hurkoen esperantza
pil-pil sumatzeko,
laztan xaloarekin
zorian batzeko.

*2017ko abenduaren 24an*

*694*
**EAJ *Aberri* izan zaitez**

1
Arren, EAJ zintzo diotsut
ataka delako lehen lez txarra,
“Comunion” sastraka laga ezazu
“Aberri” zelaia lilitu dakizun.
Espainian ustez bare zaudenez
xedeak zaizkizu arras lausotu,
alderdia naro bazkatzen duzu

ahaztuta zer den Euskal Herria.
Auzolanari “Ez”, dioskuzunez
arima belztuta maiz diotsugu,
“zu gabe zaila da ezer lortzerik,
zurekin dirudi ezinezkoa”.
Gurekin bidea egin ezazu
herriko desirak gauza ditzagun,
zer izan nahi dugun hauta dezagun
irriak negarra isildu dezan.

2

Maite dugulako denon herria
zorrotz egin dugu autokritika,
horregatik jazo zen aldaketa,
Aieten urratsa eman genuen.
Zuk, berriz, darraizu axolagabe
sostengatzen PP eta bankuak,
diruari galga jar iezaiozu,
zeure irritsa den zementuari.
Poliki-poliki zure mantra da
inoiz ez gaitezen irits inora
ez dugu gatazka hola gainduko
zingira horretan itoko gara.
Gurekin has zaitez kartzelak husten,
ongizateari dena ematen,
eskubideekin jendea janzten,
euskaraz geroa trebe ehuntzen.

*2017ko abenduaren 24an*

*695*
## *Aizu* aldizkari kutunari

1
"Aizu" aldizkaria
euskara goresten,
"nor-nori-nork" alaia
edonon abesten,
gogoak aritzen da
maitez aberasten,
alfabeta gaitezen
bidea errazten.

2
"Aizu" atzo lez zaude
xaloen habian,
AEK-rekin jaio
zinen aspaldian,
zurekin lehen nintzen
elkartzen aisian,
orain tamalez gaude
espetxe larrian.

3
"Aizu" gure hizkuntza
gogoz leitzeko,
diglosiaren mina
gozo gainditzeko,
mihietan lilura
naro ereiteko,
non-nahi den naturalki
berba egiteko.

4
AEK-k lez uxatu
zenigun tristura,
euskara izan zedin
arimen ohitura,
ura diozulako
eskaintzen gustura,
atseginez bizi da
zurekin kultura.

5
“Aizu” entzunda ziplo
diogu, “euskara”
beregaz bor-bor dago
desiren galdara,
idazlanekin zaigu
argitzen ganbara,
fotoekin musuan
islatzen zirrara.

6

Ohi lez “Korrika”n zara
AEKz atera,
ederkiro zarete
ibili batera
ikusiko zaituztet
korrika ostera,
Euskal Herrian alde
batetik bestera.

7
Euskal espeok leun
dugu ferekatzen,
“Aizu”k zigorra digu
bizkor beheratzen,
amesten une onak
ditugu pasatzen,
euskaraz garamatza
etxera hegatzen.

8
“Aizu” lagun zintzoa
gurekin jarraitu,
euskara, behingoz, dadin
plazetan lilitu,
zutaz gaur zinez dugu
zoria sentitu,
orriak irekita
herria kausitu.

*2017ko abenduaren 31an*

*696*
**Papogorriak izango gara**

1
Nire sentiera taupaka dantzut,
“loraldia mardul dator” diosta,
“negarrik gabeko udaberria
gerezien tantaz urrindatuta”.
Desio xaloen zola ereinda
garai oparoan sartuko gara,
bizitza erabat ondu dakigun,

samurtasunean batu gaitezen.
Berriro ditugu guk hauspotuko
kiliken txingarrak harremanean,
arrats oskorria heldu delako,
Mariren ametsen hego-haizea.
Belardi agorrak berdatu dira
ihintzak laztantzen dituelako,
eremuan dugu izotza urtu,
sasidi sarrien bortxa zimeldu.

2

Abiatu gara mendialdera
txorien kantuen bazter lasaira,
ekiak dizkigu printzak opatzen
Ama-Lurra sakon goza dezagun.
Pago tantaiaren aurrean gaude
akordura datoz orduko grinak,
hostoek adarrak jantzi dituzte
kerizpean gogoz etzan gaitezen.
"Zorion ederrak iraun dezala",
unea dastatuz barrez diogu,
gu iraganetik etorri gara,
ilunabarretik egunsentira.
Izan zirelako askatu ginen
mundu hobearen papogorriak,
eskertuz bihotzez bake zuzena
maitaleak gara Euskal Herrian.

*2017ko abenduaren 31n*

*697*

**Zu eta zuek nire indarra zarete**

1
Hemezortzigarrenean
dandaka naiz pausatu,
azken txanpa luzerako
burua dut prestatu,
nahiz kartzelaldian naizen
noizean behin nardatu,
ziur nago ez zaidala

arima belaxkatu.

2
Txabi, Txikia, Ixabel,
Txomin, Belen, Argala,
Bakartxo, Jokin... eskaintzen
didazue ahala,
zuek izan zinetenez
haritzaren ezpala,
ni saiatzen naiz izaten
izaeraz mazala.

3
Ideal zuzenen funtsa
izan zinetelako,
orain pentsakeraz gara
gu edonon halako,
zigorra gaintzen ari naiz
hangoa naizelako,
atzo lez zuen ametsak
nireak direlako.

4
Aizue gure xedeak
lehengoak baitira,
ilunpetik ia gara
iritsi zohardira,
bi milatik etorri naiz
oinez hemezortzira,
gero zuekin joateko
trostan Euskal Herrira.

5
Nahiz zahartzen ari naizen
darrait biziguraz blai,
horri esker egunero
iratzartzen naiz alai,
hasierako aldapa
bihurtu denez zelai,
laster zugana noala
zinez diotsut Elai.

6

Urriaren hamaikan dut
egingo aitormena,
zurekin bizitzea da
desirarik behinena,
izango delako arrats
hori oskorriena,
etxean zirrika dugu
hartuko atsedena.

7
Laztan, erauzten ari naiz
kartzelako hesiak
ikus ditzagun sasoian
loretan gereziak,
larruak bikain dizkigu
garbituko euriak,
erabat susper daitezen
gure bihotz eriak.

8
Urteak daramatzat hor
egon barik zuekin,
akorduan batzen gara
Untzagan pilpirekin,
ziegan hunkitzen naiz zuen
mihien xuxurlekin,
zoriona dastatuko
dugu krabelinekin.

*2017ko urtarrilaren 7an*

*698*

**Sofrologia espetxea gainditzeko**

1

Isolamenduan luzaz egonda
larrosa mardulak zimel daitezke,
ni barruan nago estresatuta
hamaika motibo dela medio.
Arin hasten dira zainak taupaka
zigorrak estutzen zaituenean,
eztarria zaizu korapilatzen
itoko zarela pentsatzen duzu.
Ezin dut ekidin antsietatea
espetxezain latza datorrenen,
erotzen denean preso soziala,
mintzen nauenean berri goibelak.
Kide bat hil dela dantzuzunean
esparruan zara arranguratzen,
emendatzen zaizu ezinegona
baretu ezinik atsekabea.

2
Hitza leitu dut: sofrologia,
esanahi zehatza gaur ezagutu,
psikoterapia bikaina ei da
estresa baitatik lurrun dakigun.
Egun darabilte bertsolariek
oholtzan daitezen gal kirioak,
betazalak bare biltzen dituzte
sentimendu onak barneratzeko.
Herria gogora ekar ezazu,
maitasuna ohi den hurkoen aldra,
laztana barrezka imajinatu
aisian lehen lez Ama-Lurrean.
Sudurretik sakon hartu arnasa
gero hatsa bota leun ahotik,
sofrologiari kasu eginez
zoriak estresa ordeztuko du.

*2018ko urtarrilaren 7an*

*699*

**Bizkaiko eta gainerako zahar etxeen beharginei**

1

Zahar-etxeetan jator
zaindu ongizatea,
asaben pozak pitz dezan
gaurko giro tristea,
makurra delako sosak
eurekin aurreztea,

eta porlanari, aldiz,
harrika ematea.

2

Aintzat har ditzagun gure
biharko zaintzaileak,
etxe zein egoitzetan lan
dagiten ongileak,
eurak zorionez dira
adinduen zaleak,
jakintza eman ziguten
hurkoen maitaleak.

3
Zaintzaileetatik dira
gehienak andrazkoak,
gizonentzat direlako
lan horiek potoloak,
horrela eratzen digu
bizitza matxismoak
gutxietsiz denon alde
ari diren xaloak.

4
“Bakarrik dituzte barren
garbitzen ipurdiak!”
matxista babuak dio,
halaber handikiak,
baina eurak beharrean
oro dira eztiak,
aitxitxei sorrarazten
dizkiete irriak.

5
Arren, ez gaitezen izan
mazalekin zekenak,
euren lan baldintzak izan
daitezela zuzenak,
amamek goza ditzaten
fereka leunenak,
merezi dituztelako
aterpe sanoenak.

6
Agian noizbait izango
garenez adinduak,
gaixotasun baten dela
medio ezinduak,
izan gaitezen egoitzen
arazoaz helduak,
dirdaitsu jarraitu dezan
geroan ereduak.

7
Guritu ditzala Foru
Aldundiak zimurrak,
soldatak gaur direlako
egoitzetan laburrak,
ez direlako behargin
hauen zerak apurrak,
izan gaitezen eurekin
maiteaz lez xamurrak.

8
Jendartea on dezagun
etika bizituta,
nagusien zein umeen
beharrak asetuta,
egoitzetako liliak
naroro hauspotuta,
izarretako hautsekin
arimak xarmatuta.

*2018ko urtarrilaren 14an*

*700*

**Motxila 21 musika taldeari**

1

Zinez zara Motxila Hogeita Bat itzela,
arimaren musika, terapia sanoa,
nahiz zu zaren xumea goian duzu ospea,
atseginez zaitugu uneoro txalotzen,
gu zurekin diotsut bihoztiak garela,
elkarrekin herria aberasten dugula.
Enpatia landuta maitasuna hazten da,

oneratzen sentsorial aniztasun anitza,
musika ohi delako sentiera izaten
ezgai diren hurkoak pil-pil gaitzen baitira,
egoismo hitz gaitza eletik gal dakigun,
ahizpatasun xaloaz mugak erauz ditzagun.

2
Zuek ñir-ñir zaudete oholtzaren zoruan,
sorginduta musika naturala delako,
ahaldunak zarete trebe jotzen danborrak
motxilaren pisua ez duzue sentitzen,
bizigura naroro duzuenez ereiten
jaialdian eskertu dizuegu artea.
Musikari kutunak benetako lagunak
eredua zarete, karnabaren txioa,
jendartea zuekin loratuta dakusat
poza diren notekin naizenean dantzatzen,
miretsita jarduna izendatzen zaituztet
Iruñeko mirailak, Txantreako ikurrak.

*2018ko urtarrilaren 14an*

*701*

**Udaberrian biziko gara**

1

Udaberria baita
pizkunde totala
zeharo loratzen du
desiren atala,
pilpiraka hasten da
maitale mazala,
txonta jaioberria
habian bezala.



2

Udaberriak bezti
dezala herria,
noizbait bilaka dadin
denon aberria,
behingoz, osa dezagun
zentzuz armarria,
asebete joan ziren
minen egarria.

3
Euskal udaberria
behar du bihotzak,
ziplo isil daitezen
ekaitzaren hotsak,
artez moztu ditzagun
arantza zorrotzak,
ez dezan euskara hil
diglosia motzak.

4
Udaberriak berda
dezala haritza,
landu dezagun bere
abaroan hitza,
gure urratsa izan
ez dadin murritza,
elkartasunaz hobe
dakigun bizitza.

5
Negutea delako
laster bukatuko,
eguzkiak dizkigu
printzak opatuko,
udaberrian gara
lasai esnatuko,
ajea sendatuta
zaigu geratuko.

6

Udaberria jator
dihardugu zertzen,
auzolanean gogoz
bazterrak edertzen,
sentimendua bor-bor
ari da suspertzen,
izotz beltza tantaka
urtuz desagertzen.

7
Urteak eman eta
gero gabezian,
udaberrian gara
bizilo lorian,
arrastian elaiak
prezatuz ortzian,
gereziak dastatuz
jentilen zelaian.

8
Udaberri dituzu
hamaika kolore,
zinez zor dizkizugu
milaka ohore,
kontzientzia gorriz
gaitzazu adore,
bikain dezagun gure
jendartea more.

*2018ko urtarrilaren 21ean*

*702*

**(2017.12.09)**

**Eiffel dorrearen aurrean batu gara**

1

Abendua heldu da bederatzira
Parisen hamaika elkartu gara,
Montmatretik gogoz Eiffelera goaz
ozen esateko, “Orain Presoak!”,
gaur besteak beste horixe diosku
josten ari garen bake zuzenak,
bihotzen pilpirek berdin dioskute
Ferminen kantuak entzun ahala.
Hotz dagien arren adoretsu gaude
kinkak duelako grina eskatzen,
Luhusotik gatoz joateko zorira
gauzatuko dugun garai jorira,
erantzunkizuna geurea delako
ostadarra txukun marraz dezagun,
gizatasunaren artisauak gara
mardulki haz dadin elkarbizitza.

2

Sentierak dira manifan anitzak
gozo batzen gaitu elkartasunak,
eskutik hartuta gu zinez bat gatoz
hitzak mendekua ordezkatu dezan,
amnistian noizbait pausatuko gara
goiztiriak poza izan daitezen,
xedearen alde zirraraz diogu,
“gatazka batera gaindu dezagun”.
Orain joango gara Paristik Bilbora
lor ditzagun giza eskubideak,
preso min gaixoak bueltatu daitezen,
erbesteetatik iheslariak,
hunkituta pil-pil senti dezatela
gertu dagoela udaberria,
hegatxabalaren txortxorrak harrera
egin diezaiela opa diegu.

*2018ko urtarrilaren 21ean*

*703*

**Ukhiyan babestu zen rohingya haurrari**

1
Neskatxaren malkoek
naute gaztigatu,
zoritik oinazera
ziplo zen pasatu,
budista “baketsuen”
bortxa du pairatu,
musulman jaio zenez
dute mehatxatu,
Rangunek rohingyak
ditu izorratu.

2

Budistek urtu dute
Budaren oroitza,
Nirvanaren bidea
galtzen dabil sitsa,
liliari diote
zimeldu bizitza,
Myanmarren zelaia
egin da sasitza,
zer dadila lehengo
jendarte anitza.

3
Aung San Suu Kyi (*)
agindu menia,
aterpetu lehen lez
edozein etnia,
Myanmar ez dadila
izan Birmania,
rohingyak xurgatzen
ari den tenia,
alaiki koskor dadin
poza zen ninia.



(*) *Myanmarreko presidentea (Bakearen nobel saria jaso zuen).*

4
Sorlekua daukazu
beti akorduan,
liskarrik gabe zeunden
ederki orduan,
orain Ukhiyan zaude
zu kanpamenduan,
zurekin garelako
ahaztu munduan,
budistak ari dira
faxisten moduan.

5

Oi, beltzaran gaixoa
zaituzte tristatu,
bidegabe dizute
oraina zartatu,
dutelako Budaren
hitza ezeztatu,
bakeak har dezala
Rajinen ostatu,
haurtzarora zaitezen
gozoro bueltatu.

6
Nahiz budistak ez ziren
ustez basatiak,
“sinesle batzuk” zinez
gaur dira piztiak,
Bangladeshen dakuskit
pil-pil arrastiak
Myanmar noizko zure
goiz-argi eztiak?
Haurrak izango gara
barrez jolastiak.

*2018ko urtarrilaren 28an*

*704*
## Nabi Saleh-eko Ahed Tamimi nerabeari

1
Ahed Tamimik garbiki diosku,
“sionisten bortxak odolusten gaitu”,
nahiz hamasei urte bakarrik dituen
oro daki zer den errepresioa,
jaio zenetik du gerra ezagutu,
Palestina duen zaititu murrua,
sendia gogorki kolpatu diote

imperio harro baten izenean.
Zisjordania da haserre itzarri
Trumpek duelako sutautsa izeki,
Israelen asmo gaitza sustatu du:
“Jerusalem gure hiriburua da”,
Palestina dute berriro iraindu,
hautsi sinesmen arteko oreka,
zolak harriz eta balaz bete dira
ez ditzala herrak esperantzak ito.

2

Ahed lurraldea gerizatu duzu
zure amak eta lehengusinak lez,
polizien kontra herritarren alde
ankerrak tiroka ari zirelako,
zuen etxearen atarian zeuden
gorrotoz estutzen manifestariak,
ostikoka hasi zineten ausarki
ez zelako euren jarduna zilegi.
Ikono bat omen zarela diote,
jende zintzoentzat eredugarria,
zu guretzat zara izarrak lakoa,
hurkoak oroituz, ekinez ondratuz,
Ahed ederra da zure izaera,
Makurra, ostera, polizien kara,
maitez opa dizut urrezko neskatxa
Palestinan libre bizi zaiteztela.

*2018ko urtarrilaren 28an*

*705*

**(2018.01.13)**

**Bilbon “prest gaude” esan dugu**

1

Urtarrilak hamahiru
poza dadin lora,
bake zuzena ekar
dezagun txokora,
aterkiak ditugu
jarri beha gora,
prest gaude iristeko
desiren gerora,
Paristik gogoz gara
etorri Bilbora,
joateko motxiladun
laztanen ondora.

2
Zerua berriz zaigu
erori gainera,
baina oihartzuna da
heldu erbestera,
euriari diogu
esan alegera,
“blai eginda kantuan
goaz udalera”,
haurrek pil-pil diote,
“kalera-kalera”,
“iheslariak eta
`presoak etxera”.

3
Prest gaude osatzeko
indar metaketa,
giza eskubideak
eta konponketa,
gerta dadin bideko
traben erauzketa,
estatu ilegalen
trintxeren husketa,
auzolanean egin
dezagun josketa,
Euskal Herriak behar
duen eraketa.

4
Denok mezua dugu
garbiki aditu,
kontzientzian dirudi
zaigula sustraitu,
bortxan ezin dugunez
bizitza eztitu,
gu prest gaude xedeak
daitezen mamitu,
beraz, enaren alde
hesiak txikitu,
eurak bueltatu arte
bihotzak goritu.

*2018ko otsailaren 4an*

*706*
## Bilboko portuak ez du etikarik

1

Portu erraldoia Santurtzin dago,
Serantes zaharra penaz begira,
Portsmouthekin gaitu ferryak batzen,
eskura daukagu London hiria,
merkantzia franko irteten dira
beste horrenbeste heltzeko gero.
Transatlantikotan turistak datoz
Bilboko altxorrak ezagutzeko,
baina ez da dena bertan distira,
etikoki dauzka hamaika kraka,
armen trafikoa lohiena baita
azken urtetan gainezka egin du.
Zamatuta dira ontziak joaten
Saudi Arabia boteretsura,
garraiatutako bonben mendean
Yemenen kalteak itzelak dira,
Europak maiz ditu holan eragin
halabeharrezko migratzaileak.

2

Kaia partitzeko gunea denez
iheslari batzuk peskizan daude,
Calaisen zeukaten kanpalekua
Ingalaterrarara noizbait joateko,
zakar hondoratu zietelako
Zierbenara dira hainbat etorri.
Hesi bat diete ziplo eraiki
desiren ferryan ez daitezen sar,
latza da goikoen hipokresia,
euren nortasuna net berekoia,
bortxa dutelako non-nahi sustatzen,
ihes datorrena zeken hertsatzen.
Feministak horman kateatuta
ausardiaz ozen aldarrikatzen:
“mundua delako denon habia
mindu dituztenak babes ditzagun,
gerra matxistak amai daitezen,
ahizpatasunean bizi gaitezen”.

*2018ko otsailaren 4an*

*707*

**Zuberoa ez da postal bat**

1

Pastolara Pagolan
nuen begiztatu,
maskarada bezainbat
ederki dastatu,
herritarrek bihotza
zidaten txeratu,
Zuberoa zen nire
ariman loratu.



2

Zuberoan antzezten
dute pastorala,
oro susper gaitezen
berak du ahala,
arizaleak igo
dira oholtzara,
musikarekin baita
lehertu zirrara.

3
Pastoralak jakintza
ohi digu opatzen,
asaben historia
oholtzan pausatzen,
kontzientzietan denez
sugarra hedatzen,
herri bera garela
gara konturatzen.

4
Errejenta saioa
ari da gidatzen,
satanak dakuskigu
jauzika dantzatzen,
sujetak hasi dira
gozoro kantatzen,
gorriak ta urdinak
gero "borrokatzen".

5
Pastoralak bikain du
aupatzen kultura,
euskara sustatzea
da bere jaidura,
maitez garamatzanez
desiren zerura
“Zuberoak” diogu,
“baitu bizigura”.

6
Zuberoa diogu
direla bortuak,
horrenbeste gustatzen
zaizkigun kantuak,
horixe dira ere
behargin prestuak,
laborariak eta
artzain saiatuak.

7
Ez delako postal bat
gure Zuberoa,
elkartasuna izan
dadila beroa,
herritarren kemena
denez oparoa,
guk lez biziko dute
lilien aroa.

8
Zuberoa zu zara
arte ta beharra,
auzolana da zeure
besoen indarra,
Matalazek zuenez
egin deiadarra,
geroztik mardul duzu
mantendu zuztarra.

*2018ko otsailaren 11an*

*708*

**Bizitza ilundu zaien lagunei**

1

Antzinako lagun zorigabeak
zuen eguzkia amatatu da
garai oparoak noizbait joan ziren
lausotuta daude oroimenean,
oraina dirudi amildegia,
lehengo bidea sasien zola,
orduko bizinahi mugagabea
egin zitzaizuen atsekabea.
Jakin dudanean zuen ataka
baitan negargura estekatu zait,
zimeldu zaizue mardultasuna
edandako gauak ajeak dira,
nahiz zuen ametsak abaildu diren
senti ezazue nire epela,
zuekin nioen atseginez blai
“O, ortzia dago izarratuta”.

2

Lagun minak ginen iraganean,
gaztetan dena da zoragarria,
tabernaz taberna tximeletak lez
aisian batera bikain genbiltzan,
bizitzak gintuen gero banandu
ezberdinak ziren gurari batzuk,
politikan nintzen adorez sartu,
maitasunak zidan taupaka deitu.
Ordutik urteak igaro dira,
ni aspaldidanik kartzelan nago,
ez da ona izan hartu-emana
nire egoerak galarazi du,
atzo lez gogoan dir-dir zaudete
zinez diotsuet ziega barrutik,
patuari gogoz eskatu diot
geroan Eibarren batu gaitzala.

*2018ko otsailaren 11an*

*709*

**(2018.01.13)**

**Ume motxiladunekin jolastuko gara**

1

Ume motxiladunak
oinez arrastian,
manifaren aurrean
begiak ortzian,
sakabanaketaren
zama hustu nahian,
mirentxinak lez daude
Bilboren erdian.



2

Umeek maiz diote,
“itzul daitezela”,
gozo jaso dezaten
etxeko epela,
estatuen bengantza
delako itzela,
ustezko zuzentza da
eurentzat krudela.

3
Umeak ez daitezen
orain lez ahitu,
bortizkeria zuzen
dezagun gainditu,
gaur, agindutakoa
diete konplitu,
Porrotxek animoa
die oparitu.

4
Umeentzat euriak
dirudi ttunttuna,
nahiz busti diren ez da
izan hain astuna,
Bilbon dastatu dute
txit elkartasuna
Sareren lana izan
delako txukuna.

5
“Jin daitezela aitxak
et(a) amak herrira”
horixe da xaloen
txaloen desira,
Bilbon ernatu dira
milaka pilpira,
ikusita umeen
ninien distira.

6
Ume hauen ametsak
ditzagun mamitu,
bidaldi neketsuak
daitezen amaitu,
etxean bizipoza
dakien lilitu,
motxila bihur dadin
aurki txilibitu.

7
Umeek dioskute
“ez dugu botako”,
“motxila izango da
bihar mendirako”,
“ez ditugu maiteak
zokoan lagako,
euren askatasuna
geurea delako”.

8
Espetxera heldu da
Bilboko zirrara,
ziegan aditu dugu
umeen algara,
prest gaude hegatzeko
hamaika enara,
eurekin jolasteko
euskal habiara.

*2018ko otsailaren 18an*

*710*

## Kale hezitzaileak krimena uxatzeko

1

Gizarte langile finak diosku,
“gogoz daude kale hezitzaileak”,
“hedatzen hasteko berdintasuna
jendartean libre bizi gaitezen”
“nerabe gaiztoak beza ditzagun
putzu zikinetik irten daitezen,
horrela geroa zer genezake
pobrezia eta espetxe barik”.
Inberti dezagun gizartegintzan
gaizkiari galga zuzen jartzeko,
aldiriak ongi ongarritzeko
kulturaz, kirolez, samurtasunez….
bertan bizi diren sendi hitsei
zintzo diezaiegun opa laguntza
ez daitezen eror haur zaurgarriak
krimenaren sare likin sarrian.

2
Geurean hilketak jasan ditugu
ustez lapurtzeko egin zituzten,
bihotzak zaizkigu dar-dar uzkurtu
ezin ulertuta gertatu dena,
ahoskatzen dugu mendeku hitza
gertakizunekin aztoratuta,
baina konponketa izan dadila
ehuntzea giza eskubideak.
Auzolanez eta elkartasunez
ataka gordina gain dezakegu,
biktimen hurkoak laztan ditzagun
atseginak mina goza diezaien,
kale hezitzaile jarrai itzazu
kaleak ereinda arimak ontzen,
nerabe bortitzek senti dezaten
jendartea dela euren etxea.

*2018ko otsailaren 18an*

*711*

## Ozeanoak garbitu ditzagun

1

Ozeanoak bururik gabe
ari gara izorratzen,
plastiko poltsak ditugulako
ganora barik botatzen,
haizeaz sarri dira ibaien
erriberetan pausatzen,
ondoren urak garraiatuta
itsasoan barneratzen.



2

Aizu, plastiko horiek dituzte
bost irla zuri osatu,
ur korronteek sendo zituzten
ozeanoetan batu,
urtetan euren azalera da
ezarian emendatu,
geure joera zatarren erruz
Kantauri dugu tristatu.

3
Gure artean sei hamarkada
daramatza plastikoak,
ekologistak sentitzen ditu
bihotzean zimikoak,
kontsumismoan daude oraingo
kutsaduraren gakoak,
zentzuz kontsumi dezagun gerta
ez daitezen halakoak.

4
Itsas natura ez dadin gera
bizitza barik hustuta,
plastiko mota batzuk ditzagun
baztertu ez ekoiztuta,
gogoz lan egin beharko dugu
gizakiok elkartuta,
herri batzuen zabortegiak
musu-truk kudeatuta.

5
Izaki askok dute tamalez
ohitura basa pairatzen,
munduan ia ez dugulako
plastikorik birziklatzen,
itsasoari diogulako
uzten gai hori flotatzen,
ergelki ari gara gerran lez
heriotza barreiatzen.

6

Itsas hegazti franko ei dira
plastikoekin pozoitzen,
dordokak, mortsak, itsas txakurrak…
sareetan iraungitzen,
itsasertzetan baleak hilda
sarri dituzte aurkitzen,
arraina jaten gu has gaitezke
zera horrekin eritzen.

7
Mundu bakarra dugunez, arren,
zintzo dezagun artatu,
gu bizitzaren alde gaitezen
jendartean borrokatu,
ozeanoak gura ditugu
kemenez izarniatu,
ur azalaren plastiko gaitzak
zamatuta porturatu.

8
Izurde bat da Debara heldu
gurekin dibertitzeko,
burututako planaren jaia
haurrekin konpartitzeko,
jaso genuen zabor guztia
itsasoa garbitzeko,
izarbel urdin zoragarria
ferekaz ongarritzeko.

*2018ko otsailaren 25ean*

*712*

**Irria alkoholik gabe hobea delako**

1

Ez dut behar drogarik irri egiteko,
ezta kantuz hasteko alkoholik ere,
gaztaroan ez nuen horrela pentsatzen
tabernetan irrikaz sartzen nintzenean,
gaur dakidan adina jakin izan banu
ez nituzke orduko ajeak jasango,
ez nukeen aisia ergelki erreko
baizik zinez egoki aprobetxatuko.
Espetxean horretaz maiz konturatzen naiz
kideekin txantxetan hasten naizenean,
gure barre algarak aireratzen dira
etxartetik tristura ziplo egozteko,
horrelako umore sanoa gura dut
gainditzeko minak ta aurpegi muzinak,
atseginez zertzeko helburu zuzenak
patxadaz bizitzeko askatasunean.

2

“Izadian ibili eta irri egin”,
esaldia laztana magikoa baitzen,
oparitu zenidan bizitza hobe bat
alkoholak ez zeukan bertan aginterik,
harremana genuen grinaz elikatu
elkarrekin ez ginen sekula aspertzen,
maitasunak ez dauka ronaren beharrik
bitarteko ugari hunkitzeko ditu.
Nahiz zigorrak aspaldi urrundu gintuen
zorionak astero kulunkatzen gaitu,
irribarre natural ohi dagigulako
lehen legez bidean batera darraigu,
ederkiro bizi naiz mozkorturik gabe
bizipozez diotsut kideek dakite,
bihar dizut esango beste horrenbeste
ihinztatuz kilimak goiztiri arraian.

*2018ko otsailaren 25ean*

*713*

**Amets zoragarri baten kontakizuna**

1
Arratera igo gara
arnasteko lurrina,
ziplo lurrundu zaizkigu
kezkak eta samina,
Akondiara joan baino
lehen une sorgina,
zelaian kantuz ari da
kardantxilo pittina.



2
Tximista ikusi dugu
trumoia entzun gero
Akondian halakorik
ez genuen espero,
behorra eta moxala
lauhazkan doaz ero,
dardaraz sentitu dugu
bor-bor odola bero.

3
Akondiatik urruntzen
dakusagu ekaitza,
lainoek estali dute
Aizkorriko erlaitza,
nahiz zoritxarrez sarritan
izaten den murritza
ikuskizunak diosku
“itzela da bizitza”.

4
Belarrak eta garoak
euriaz dira blaitu,
kolore berdea zaie
tantanekin bizitu,
zeruan ostarteekin
iluna da argitu,
eguzkiak printzekin du
Kalamua beztitu.

5
Goazen mendi xarmantara
gorputza epeltzera,
bide batez iturrira
naroro edatera,
trintxeren lurretan zaigu
hunkitu sentiera,
ez ahazteko Francoren
gerra zital minbera.

6
Kalamuan haizetxoak
hobetu du giroa,
Kantarui aldera dugu
zuzendu miraz soa,
largabistaz hurreratu
zaigu urrutikoa,
bikain asebete dira
bihotza ta gogoa.

7
Usartzara heldu gara
jaisteko Eibarrera,
atseginez joko dugu
Urkotik Legarrera,
onik bueltatu garenez,
alegera etxera,
bainua hartuta goaz
hor nonbait afaltzera.

8
Espetxean esnatu naiz
ametsa da bukatu,
baina gaua zin-zinez dut
zoriontsu pasatu,
istorio dena diot
laztanari kontatu,
Euskal Herriak gaitzala
Ama-Lurrean batu.

*2018ko martxoaren 4an*

*714*

**Eskola, euskaldunen kuma izan dadila**

1

Heziketan ele mina ez dugu txit suspertu
makina bat herritan eri darrai oraindik,
ahalmena kentzen dio ereduen legeak
hortik at da tamalez abar edo ezdeusa,
haur batzuek ezin dute nahita ere ikasi,
ez delako apropos irakasten eskolan.
Horrelako berriekin sentitzen dut tristura
mintzatzea edonon ez delako erraza,
jendartean hola dugu segituko zokoan
Francorekin lez gara ikusgaitzak izango.

2

Aberatsa teorian behartsua praktikan
euskara maiz ohi dago zimeldurik geurean,
gaztelera ta frantsesa mardul daude, ordea,
estatuen babesa dutelako dastatzen,
ez delako irakasten orain non-nahi altxorra
sentiera digute bidegabe sestatzen.
Geroan ez dadin bihur urmaela basatza
euskarari eralda diezaiogun habia,
arren, behar dugun kuma zertzen jarrai dezagun
zin-zinetan eskolak euskaldunak sor ditzan.

*2018ko martxoaren 4an*

*715*

**(2018.03.08)**

**Emakumeen egun internazionalean**

1

Matxismoaren indarra
versus feminismoa,
zer dezala Martxoaren
Zortziak desioa,
sentierak zehatz zuen
taxutu sinboloa,
patriarkatzak gal dezan
aginteko erroa.

2

Matxistak apropos dira
izaten jazarleak,
era berean maitasun
hitzaren hiltzaileak,
irmoki beza ditzagun
gaizkiaren aleak,
izan daitezen direna
erlauntzetan erleak.

3
Gutariko batzuk dira
benetan berekoiak,
etxeko lanen aurrean
dirudite lehoiak,
ea matxistak geurean
bihurtzen diren ohiak,
neska lagunekin izan
daitezen lagunkoiak.

4
Lanaren arloan daude
bi aldiz zanpatuta,
andre eta langile lez
arras mespretxatuta,
ustezko lankideekin
daudenez nazkatuta,
"zuen besteko soldata!"
diotsete batuta.

5
Feministen muga denez
jendartea ontzea,
halaber matxismoari
atea zarratzea,
emendatzen ari dira
zentzudunen oldea,
gizon duina izan dadin
gaurkoaren ordea.

6

Feminismoak zuzen du
irauliko mundua,
ideiak ereiten dabil
egokitzen modua,
patriarkei nahi die
agortu sorburua,
lehor dadin, behingoz, gerren
eta bortxen zorua.

7
Gizonak izan gaitezen
feminista bikainak,
andreekin lur ditzagun
mendetako irainak,
zintzoki izango gara
kideko jostakinak,
eraikiko dugun herri
morearen harginak.

8
Emakumeen eguna
da internazionala,
“matxismorik ez!” oihuak
du irismen zabala,
berdintasuna josteko
lor dezagun ahala,
mundu ederra denontzat
izan dadin magala.

*2018ko martxoaren 11an*

*716*
## Momorro otiari

1
Intsektu arrea bart pausatu da
leiho goibelaren burdin sarean,
Afrikatik ei zen ailegatuko
deritzote oti migratzailea,
nahiz dirudien ez dela mugitzen
noizean behin lekuz aldatzen baita,
jatunak ohi dira ortopteroak
baina honek ez du jan jin denetik.
Maiz nire arreta erakartzen du
ederra delako bere itxura,
nirekin oraingoz ez da beldurtu
lagunak garela esan daiteke,
ez dakielako zer den kartzela
patxadaz hormari begira dago,
zomorro jauzkari hegaldaria
iratzar dadila udaberrian.

2
Otiak bakarka lasaiak dira,
Samaldaka, berriz, izugarriak,
jaten direlako aseezinak
landak suntsituta uzten dituzte,
ugaltzen direnez neurri barik
gosetea dute erraz hedatzen,
sarri gertatzen da hondamendia
Afrikako toki txiroenetan.
Otiak hor darrai nire aurrean
ekiaren printzek bizitu dute,
ez dadila zendu opa degiot
barrutik joan dadin libre kanpora,
“hemendik at bikain biziko zara”
leun esan diot egunsentian,
ulertu didanez abiatu da
Momorro geldoa ziztu bizian.

*2018ko martxoaren 11an*

*717*

**Senide zaharrak diosku**
**“sakabanaketa lurtu ezazue”**

1
Etxeko kuttuna dago
zigorraren munduan,
sakabanaketak zuen
hautatu ezlekuan,
amari tristura zaio
nabaritzen musuan,
jada ezin duelako
bisitatu barruan.

2
“Noiz arte iraun dezake
makurren mendekuak?”.
Etsipenez galdetzen du
senide adinduak,
ez direnez zilegiak
estatuen arauak
esperantza ia dio
agortu amarruak.

3
Bidaia latza delako
etxetik espetxera,
batzuk nekez joan diatezke
hurkoak ikustera,
ezinduak ari dira
pairatzen egoera,
beharrez diote, “ekar
ditzatela geurera”.

4
Gorrotoak duelako
boterean agintzen,
gure senide zaharren
kemena da erkintzen,
guk espetxetik diegu
maitasuna eskaintzen,
gutun eztien bitartez
arima zipriztintzen.

5
Senide horien mina da
orain azaleratu,
noizbait zieten, ordea,
ataka inposatu,
sakabanaketa zuten
ankerrek antolatu,
hartu-emanak zeharo
zekizkien hormatu.

6
Bizigurak bihotzetan
gal ez ditzan erroak,
elkartasunak dizkie
ematen animoak,
adinduek nahi dituzte
laztandu etxekoak,
halaber zendu aurretik
gainerako xaloak.

7
Bidaiek dietelako
aurpegia zimurtu,
zer egin eurak pozteko
sakon dugu mamurtu,
denon artean ditzagun
estatuak uzkurtu,
behingoz, daitezen sendien
nahietara makurtu.

8
Arren, sakabanaketa
net dezagun ahitu,
gaur egun zorrotz darraien
bortxa sorra gainditu,
taupadak diezazkiegun
gaixoei bizitu,
desioak dakizkien
sukaldean mamitu.

*2018ko martxoaren 18an*

*718*

**(2018.02.15)**

**Ekai zenari. Chrysallis eta LGTBIri**

1

Nahiz ni Angel nintzen Angela egin naiz
gorputza bat dator orain senarekin,
bizigura, behingoz, pil-pil sentizen dut
nik dakidalako garbiro zein naizen,
urratsa izan zen emateko zaila

etxean ez zeuden prestatuta eta.
Maitasunak zuen koska latza gaindu
gurasoak ziren hunkitu nirekin,
Chrysallis taldera batera joan ginen
bizitza ontzeko gidatu gintuzten,
"ez gaitzala inork mindu", genioen,
irria oro zen geurean sustraitu.

2

Jendea oro har ezjakina denez
gerora gogorki hertsatu ninduten,
ezberdina omen delako bitxia
matxistentzat nintzen arbuiagarria,
lagunak bikainki portatu zirenez
eurekin dastatu nuen atsegina.
LGTBI-k oro babestu nau
bere epela dut bihotzez eskertzen,
homofobo horien ekaitza gal dadin
ostadarra dabil kontzientziak janzten,
horregatik noiznahi alegera diot,
"transexuala naiz eta harro nago".

*2018ko martxoaren 18an*

*719*

**Iraultza berdea glisofatoa da**

1

Glisofatoak du hondatzen ortua,
laborantza duina zaborra bihurtzen,
iraultza berdea iruzurra denez,
goseteak darrai umeak erkintzen.
Mosanto ta Bayer puzten ari dira,
transgenikoekin zekenki dirutzen,
haziekin dute mundua kutsatzen,
aniztasuna den natura pobretzen.

2

Paraguain Herio glisofatoa da
ihinztatuz dute soja bizkor hazten,
guaraniak nahita gaixotzen dituzte,
euren esparruan horrela pozoitzen.
Multinazionalen kontra bat gaitezen
ez dezagun eros transgenikorik,
nekazari erein ezazu ohi legez
osasuna izan daitezen fruituak.

*2018ko martxoaren 18an*

*720*

**Alfako behargin duinei**

1

On Toribio Etxebarriak
Alfa maitez zuen sortu,
behargin finek beregaz zuten
krisia gaintzea lortu,
tailer bikaina auzolanaz zen
gero ederki gotortu,
nahiz arras zuen Francoren bortxak
Eibar bonbekin zigortu,
asaba zintzo haien eskuek
trebe baitzuten bizkortu.

2

Eibar kutuna Alfarik gabe
ezin dut irudikatu,
gerente txarrek gura diote
etorkizuna kraskatu,
txanponen truke ziplo nahi dute
berekoi horiek urkatu,
“Alfa ez itxi” txapa dezagun
bularrean estekatu,
xede onaren alde gaitezen
eibartarrak borrokatu.

3
Alfa izan da hamarkadetan
gure hiriko ikurra,
tamalez laster egin daiteke
harribitxia papurra,
goikoek soilik nahi dutelako
tailerrari eman lurra,
lotsarik gabe gauzatzen ari
direlako iruzurra,
behargin duinek jasoko dute
soldaten ordez simaurra.



4
Untzagan karpan daude behargin
kementsuak esateko,
greba egiten dihardutela
hondamena saihesteko,
Alfak bizirik jarraitu dezan,
lanpostuei eusteko,
ondasunak ez direla kaka
gardenki erakusteko,
gertatzen ari den lapurreta
itzela gerarazteko.

5
Harro xurgatzen ari delako
euren odola zorria,
behargin hauek tinko diote
atera txartel gorria,
behingoz, izenpe dezan geroa
baieztatzeko orria,
udaberrian uxa dezaten
aspaldiko laborria,
Alfa gaineko zeru grisean
heda dadin oskorria.

6
Senak diosku, “Eibar ontzeko
Kooperatiba hartu”,
“argudioak zuzenki josi,
Konpromisoa indartu”
bihozgabeek oro dezaten
erabakia onartu,
ez dadin inoiz txirotasuna
gure bizitzan uztartu,
Arrate eta Urko artean
soak daitezen izartu.

*2018ko martxoaren 25ean*

*721*

**Duintasuna elkarteari. Pentsionistei**

1

Untzagan pankartak kulunkan diosku,
“PENTSIOAK DUINAK IZAN DAITEZELA”,
kinkak duelako eskatzen ahala
“Duintasuna” dabil pentsionistak biltzen,
behargin zaharrak haserretu dira
eros-ahalmena jan dietelako,
pobrezia laster antzeman dezake
 merkatuak, dendak, tabernak, kulturak…
Bizitza mailari egoki eusteko
gure nagusiak zutik jarri dira,
ez diezazkieten arimak ilundu,
prekaritateak ez ditzan hondora,
beharrean gogor aritu direnez
ongizatea zen eurekin sendotu,
ez dutenez adar jotze hau merezi
lagun diezaiegun dema irabazten.

2

Madrilek zekenki eskuratu nahi du
bankuei eman zien oparia,
pentsio eskasak arras izoztuta
pentsionistek dute zorra kitatuko,
ekonomiaren zola mugatuta
hainbat arlo ezin dugu kudeatu,
independentzia lortuko bagenu
bikain genituzke beharrak aseko.
Pentsionistak dira gurekin hunkitu
eurekin kalean batu garelako,
gure adorea eskaini diegu
atseginez zintzo eskertu digute,
asabak babesten dituen herriak
morrontzarik gabe libre biziko da,
iraultza lilitu daitekeelako
bihotzen taupadak naroro ereinda.

*2018ko martxoaren 25ean*




**Ametsen txokoan bizi naiz**
**[1-162]**
ATARAMIÑE. *2011.*




**Ainarak herrira itzuliko dira**
**[163-308]**
ATARAMIÑE. *2014.*




**Bidean gaude, aurrera goaz,**
**joan zirenekin**
**[309-450]**
ATARAMIÑE. *2016.*




**Udaberrian biziko gara**
**[451-580]**
ATARAMIÑE. *2017.*

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
MIKEL ANTZA. *2011.*

**Espetxetik at**
BORXA URBERUAGA. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**Z²**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

**Ilargiraino!**
MIKEL ORBEGOZO. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
JOSEBA ARREGI. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Kuku erlojua**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Haizea**
HAINBAT EGILE. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
IBON MUÑOA. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
JEXUXMARI ZALAKAIN, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
KEPA ETXEBARRIA. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
IBON MUÑOA *2017.*

**Errezel berdeak**
JEXUXMARI ZALAKAIN. *2017.*

**Txori mezulariak**
JOSEBA EROSTEGI 'ELTZIKORTA' / LOREA EROSTEGI FERNANDEZ. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
IBON MUÑOA. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
OIER GOITIA. *2018.*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958.05.18
Eibar

***Hamaika desio utopiarako*** Ibon Muñoaren bosgarren liburua dugu. Aurretik argitaratuak ditu: *Ametsen txokoan bizi naiz* (2011), *Ainarak herrira itzuliko dira* (2014), *Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (2016) eta *Udaberrian biziko gara* (2017). Haien ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen diete liburu honetako bertsoek ere.

Hartara. lehen bertsoak 581. zenbakia darama; azkenak, 721.a. Guztira, 141 bertso berri, 2017ko urtarrilaren 15etik 2018ko martxoaren 25era artean Kordobako espetxean idatziak.



ataramiñe
**www.literaturakoadernoak.org**